

EGILEA:
**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**

Centro Penitenciario Córdoba
14.014 Córdoba

Ibon Muñoa 2000ko urrian atxilotu zuten. Harrez gero preso daukate: Valdermoro, Kordoba, Burgos, Langraitz, Puerto I eta, 2014ko martxotik hona, Kordoban.

AZALEKO IRUDIA:
**Mikel Zarrabe Elkoroiribe**

**www.literaturakoadernoak.org**





ISBN: 978-84-942777-0-2
LEGE GORDAILUA. DEPÓSITO LEGAL. DÉPOT LÉGAL

*Joan zirenei: etxekoei, lagunei, krabelin gorriei.*

## Ainaren zain

Ezagutzen ditut Ainara izeneko txori batzuk. Behin ehiztariek harrapatu eta urrutiko kaioletan sartu zituzten. Ez ziren loroak, ordea. Horiei gustatu egiten zaie itxita bizitzea, Ainarei ez; gainera, loroek maite dute nagusiaren esana behin eta berriz errepikatzea, Ainarek ez. Horiek garbi dituzte ideiak eta gai dira eskopeta-zale maltzurrei aurre egiteko ere.

Euskal Herrian bietatik dago ugari: batetik, badaude datorrena datorrela burua jaitsi eta isilik gelditzen diren hegazti akritikoak. Beldurrak eta erosotasunak geldiarazi ditu, eta ikasi dute bizitzen alpiste apur batekin. Elikatzen dira, batez ere, futbolaz eta komunikabideen gezurrez. Nahikoa dute, ez dute gehiagoren beharrik. Tarteka haserretzen dira, beraien kirol talde kuttunak galdu duelako, edo kaiolako atea estutuko dietelako apur bat gehiago, baina ez dute ozenegi esango, badaezpada. Bestetik, zorionez, hegodun kritiko asko dago gurean. Iritzia dute edozein gertakizunen aurrean. Haserretu egiten dira eta salatu egiten dituzte injustiziak. Ez dute gainekoen esana onartzen beraien galbahetik igaro gabe, hausnartu gabe. Beraien iritzia ematen dute ausardiaz eta zorrotz, baina baikortasunez.

Niri iritsi zait belarri ertzera, Eibarko Ainara baten kantu hots ederra. Abesten aritu zait 2011ko otsailetik 2013ko irailera arte. Zortziko zaharrean bota dit bertso ugari, hamarreko txikian ere ez gutxi, baina baita habaneran eta bederatziko txikian ere. Kartzelako gertaerei buruz, herenegun; Euskal Herriko gairen baten gainean, atzo; historiaren inguruan, gaur, eta sarri, politikaz, zein maitasunaz... ez dut aspertzeko tarterik izan inondik ere.

Zuri, irakurle, ez dizu inork kantatuko goxo-goxo belarrira, zorte izugarria duzu, ordea. Izan ere, bertso guzti-guztiak esku artean dituzu liburu mardul honetan. Hala ere, irakurri egin ditzakezu eta Ainara bat etxe ondoko zuhaitzetik ari zaizula irudikatu; edo zure ondoan dagoenari eska diezaiokezu abesteko, zu lasai-lasai etzanda zauden bitartean.

Begiz ikusi edo belarriz entzun, kontua da bertsook zeure baitan sentitzea. Barre egitea umore zipriztin bakoitzarekin, edo negar bere malenkoniarekin bat egitean. Konplizitate keinuak ere eragingo dizkizute, tarteka. Ez zaitez liburuaren gainetik pasa, senti ezazu zeure barrenean hitz bakoitzaren arnasa.

Orain isilik dago gure Ainara. Niri, behintzat, ez zait aspaldian iritsi bere kanturik belarri ertzetara. Bertso berriak prestatzen ariko da ziurrenik. Kukua bai, kukua sarritan entzun dut 2014ko udaberrian. Errepikakorra da bere jarduna, baina polita oso, beti adarra jotzen ariko balitz bezala. Askatasun izugarria du txori horrek. Nahi duenean etorri eta okupatuko du txantxangorriaren kabia, trukean ezer eskaini gabe, gainera. Libre ibiliko da zuhaitzez-zuhaitz eta kabiz-kabi. Boterea ere badu, bestalde. Entzuten dugun lehen aldian, aldean dirurik ez badugu, begizkoa botako digu, eta gure ekonomia apalari bere horretan eutsiko dio urtebetez. Hala eta guztiz ere, izugarri pozten gaitu bere soinua entzuteak, patrikan sosik izan ala ez izan.



Ainarek, aldiz, ezin dute Euskal Herrira etorri oraindik. Garesti ordaintzen ari dira txori konprometituak izatea. Izan ere, oso urrunetik heldu zait musika. Ba-tzuetan, interferentziak izan ditu soinuak, baina az-kenerako lortu dut dena garbi entzutea. Baikorra da mezua, gelditu zaidan sentsazioaren bestekoa. Lasai nago, Ainarak Euskal Herrira itzuliko direlako. Ea laster datozen gure basoetara, lastima baita horrenbeste zeresan daukaten txoriak urrun eta preso bizi beharra. Kuku bihurria entzuteaz hainbeste poz-

ten bagara, zer sentituko ote dugu Ainaren ahotsa gurean entzutean?

Ez dizut ezer gehiago aurreratu nahi. Nago honaino iritsi bazara liburu honetako bertso sortak ere gustura irakurriko dituzula. On egin!

*Iritsi zait urrutiko*
*txoriaren kantu hotsa,*
*eta distantziak ez du*
*bilakatu kantu hotza.*
*Heldu zait malenkonia*
*haserrea eta poza,*
*bere deiadar ozena*
*polita bezain zorrotza.*
*Euskal Herriaz dihardu*
*ezer ez zaio arrotza,*
*gorputza Andaluzian*
*gure artean bihotza,*
*kilometro asko dago,*
*baina oso tarte motza (ber.)*

***Mikel Arrillaga***
*Eibar, 2014ko maiatzaren 18a*

2011-2013 tartean Puerto I espetxean idatzitako bertso eta olerkiak kronologikoki antolatuta bildu dira liburu honetan, *Ametsen txokoan bizi naiz* (Ataramiñe, 2011) liburuaren ildo eta ordenari ere jarraiki.

*163*

**Fermin eta Fermina**

1
Auzitegi omen den
Nazional horretan,
Fermin eta Fermina
adi leotzetan,
urrundu dituztenez
azken urteetan,
desioa dirdirka
dute ninietan.

2
Estuki zeneuzkaten
lotuta bilurrak,
polizien erdian
keinuak zuhurrak,
bat egin zuten zuen
begien agurrak,
gogotsu zeuden ezpain
hezetsu samurrak.

3
Musu xume harekin
izan zen nahikoa,
segundo bat bakarrik
baina magikoa,
unerik ederrena
berebizikoa,
xalo adierazteko
euren artekoa.

4
Kartzelan zitzaizuen
piztu maitasuna,
agerian zegoen
atsegintasuna,
sentitu zenuten zirt
zoriontasuna,
zirriekin aurkitu
larruen tasuna.

5
Haginka etorri zen
sakabanaketa,
gertatuko zen zital
beren banaketa,
ordutik eurentzat da
amets hurbilketa,
bikote batek behar
duen arnasketa.

6
Sailburuak agintzen
ditu mendekuak,
berehala zintuzten
bereizi kaikuak,
gure Euskal Herrian
badira lekuak,
goxo helduta bizi
daitezen eskuak.

7
Orain urritu dira
euren harremanak,
oroimenean daude
atzoko laztanak,
gutunekin dituzte
trukatzen esanak,
telefonoz hitzartzen
gerorako planak.

8
Eguzkiak zelaia
janzten duenean,
dena da zoragarri
lilien soinean,
zuen zain daukazue
askatasunean,
gerezien lurrina
ohe apainean.

*2011ko otsailaren 7an*

*164*

**Eguneroko patatari**

1

Patata, lursagarra
gure berriketan,
dakusagu otordu
ugarietan,
frijituta dakarte
aldi batzuetan,
nolanahi egosita
gordin gehienetan,
egun horietan
nabil zalantzetan,
beha azpiletan
ehiztari lanetan,
baldar zuritzen dute
zulo honetan.

2

Patataren mamia
berriro belztuta,
eseri naiz mahaian
aztoratuta,
sendagileak dauka
bista urrituta,
sukaldeko zikinek
gauzkate sututa,
horrela ohituta
txar elikatuta,
gaude nazkatuta
eta aspertuta,
sukaldaria dago
potolotuta.

3

Patata asetzeko
duzu gaitasuna,
munduan zor  dizugu
adeitasuna,
espetxean joan zaizu
azkar ontasuna,
lurrak eskainitako
oparotasuna,
erantzukizuna
du, mardultasuna
gaitz utzi dizuna
erabat lizuna,
itzul diezazutela
bikaintasuna.

4

Nekez ahal zaitugu
gogoz ahoratu,
zure izena ezin
dugu goratu,
sukaldean zaituzte
mailaz beheratu,
jantokian irainez
zakar azpiratu,
patata artatu
leunki haztatu,
nahi zaitut sustatu
ganoraz prestatu,
arrautzopil batean
urtsu dastatu.

*2011ko otsailaren 14an*

*165*

**Sortu da “Sortu”**

1
Eguzkia irten da
ilargia gorde,
beti txandaka bata
bestearen orde,
gauminak utzi digu
izar bat oinorde,
izango da zeruan
doinuen akorde,
Ama laztandu arte
gure amaorde.

2
Ekiaren izpiak
gorantz goiz-argian,
ihintza distiratuz
zelai orlegian,
ekaitza baretu da
sasien hegian,
zalantzetan zorabia
gaitezke agian,
uzta ordea dugu
larrain beilegian.

3
Herri baten geroa
behingoz ziurtatu,
ihartutako sustrai
jatorra sustatu,
orainak hemen digu
garden baieztatu,
batera ahal dela
mamua haustatu,
lege-kate zurruna
labean urtatu.

4
Euskal lurrean zara
osasuntsu sortu,
ausardiak du bikain
hitzarmena lortu,
argitara da zure
ospea bizkortu,
adostasuna dizu
jendeak aitortu,
itxaropena zaigu
indartsu birsortu.

5
Gatazkaren zaleak
zaizkizu muturtu,
oinez hasi orduko
zaituzte egurtu,
abagunea duzu
sakonki mamurtu,
emandako urratsak
zuzenki neurtu,
mehatxuen aurrean
ez zara uzkurtu.

6
Atzo bezala xede
denon aberria,
gorrotorik gabeko
jendarte berria,
goldatzen ari gara
gogoz luberria,
ereiteko hazia
eskainiz gerria,
haz dadin loriatsu
gutarren herria.

*2011ko otsailaren 21ean*

*166*

**1976: martxoak 3**

1
Martxoak hiru, dagoeneko
hogeita hamabost bira,
oroitarriko lili xortei
gaurko gazteak begira,
egun hartako gertakizunak
gogoan geratu dira,
“Gasteizen kea eta negarra,
grebak jo zuen gorrira”.



2
Bost gazte tiroz erail zituzten
langileak izutzeko,
hamaika lagun larri zauritu
gasteiztarrak sumintzeko,
patroiek maltzur jokatu zuten
poliziak xaxatzeko,
zekenkeria izan zen muina
eskaerak birrintzeko.

3
Irain bat esan zuen zitalki
Manuel Fraga zakarrak,
“balioko du gaztigatzeko
behin betiko herritarrak”,
Euskal Herriak erantzun zion
hedatuz nonahi kedarrak,
barrikadetan sutu zituzten
frankistaren hitz txatxarrak.

4
Zaramagako elizan zeuden
langileak batzartuta,
greba eguna zuten hizpide
egoerak behartuta,
grisak kanpoan zebiltzan ere,
ke poteak prestatuta,
kristalak hautsi zituzten bortitz
gorrotoak bultzatuta.

5
Barnean denak ikaratuta
atera ziren korrika,
grisak kolpeka eta tiroka,
langileak garrasika,
beranduago hango kanpaiek
egin zuten errepika,
frankista haien basakeriak
tinko salatzeko deika.

6
Langile haiek behar zituzten

hobekuntzak tailerrean,
soldata duin bat, lan erlazio
zuzenak orokorrean,
egurra jaso zuten krudelki
hitzarmen bat beharrean,
botereak ez du errukirik
diruaren alorrean.

7
Langile batzuk aspaldi daude
kontsumismoan sartuta,
sorgor dabiltza soilik beraien
zilborraz arduratuta,
kotxe barruan nondik gatozen
ia dugu ahaztuta,
hemen onurak lor ditzakegu
Gasteizko eran batuta.

8
Bihotzak oro mindu zituen
Arabako albisteak,
langilerian babestu ziren
gazteen senitarteak,
borrokan jardun zenutelako
urtuko dira kateak,
ez dizkiegu inoiz itxiko
utopiei ateak.

*2011ko otsailaren 28an*

*167*

**Aratusteak aprobetxatu**

**– Iparragirre abila dela –**

1
Aratusteak behar ditugu
egoki aprobetxatu,
koko-jantziak ganbaran jaso
ohiturak jator altxatu,
uxatu zomorroak,
gezurren mozorroak,
faltsukeriak pitzatu,
joaldunekin pausarik gabe
egia zintzo bultzatu.

2
Estatu batzuk demokraziaz
erraz dira maskaratzen,
polizietan aurrekontuak
erruz dituzte xahutzen,
herria kikiltzeko,
hitza debekatzeko,
bortxa dute erabiltzen,
gutxiagotik dugu Markitos
sutan urtero kiskaltzen.

3
Sarri diogu pozez kantuan
gu garela euskaldunak,
oker ditugu bizi ordea
erdara hutsez egunak,
kalean gaudenean,
haurren aldamenean,
aitzakia zailtasunak,
hobe izango bagina beti
koko-marruen lagunak.

4
Honako hauek iraultzailetzat
dauzkate euren buruak,
era merkean darabiltzate
mingainetan aburuak,
kotxerik karuena,
txaletik handiena,
dira beren helburuak,
Pitxu azkarrak lotsatu ditu
hemengo artaburuak.

5

Inperioen asmo petrala
inauteriak birrindu,
herri txikien aniztasuna
arropa hitsez berdindu,
kulturak kolorgetu,
hizkuntzak indargetu,
arbasoak nahita mindu,
Zaldiko dabil oso haserre
gogor nahi ditu astindu.

6

Alaiki datoz Zaku-zaharrak
astearte-inautean,
Sorginak dakar ilusioa
zapaltzaileen kaltean,
herri bat aireratu,
geroa bideratu,
Euskal Herriko partean,
Lanzkoek dute bart Miel Otxin
erre doinuen artean.

*2011ko martxoaren 7an*

*168*
## Lili bihotzean zaude

1
Gaixotu zinenean
galdu zen irria,
ezagutu genuen
dar-dar hozkirria,
larruak behar zuen
eskuen zirria,
aupatzeko leunki
bizipoz mirria,
berotzeko sentitzen
zenuen tirria.

2
Etxean lili zinen
gure alabatxo,
goxo eman genizun
horrenbeste patxo,
etsipenean dabil
herrestan amatxo,
negarren eremuan
lur jota aitxatxo,
zure bihotz txikia
isildu zen atzo.

3
Krudela egin zaigu
lar dakigunean,
elkarrekin geundela
txit zorionean,
samina gotortu da
gure barrenean,
areago umeak
izan ginenean,
hazi gintuztelako
poz maitasunean.

4
Jaiotzak naro dakar
berarekin bitsa,
heriotzak sartzen du
etxeetan sitsa,
hodei beltzek digute
ilundu bizitza,
zoritxarrek goibeldu
aurpegiko hitza,
sehaska utzi duzu
hotza eta hitsa.

5
Abegitsu zain dugu
Ama-Lur apala,
pattal igoko dugu
azken arrapala,
urrumaka ariko
zaizu usapala,
ihintzak jantziko du
hilobi jabala,
egunsentian eder
belardi zabala.

6
Enparantzan dabiltza
umeak korrika,
algaraka, jauzika,
zoro aztarrika,
gure baitan zabiltza
gogotsu zirrika,
indar dakigun poza
gurekin irrika,
udaberria dator
alai aldarrika.

*2011ko martxoaren 14an*

*169*

## Juaristiri euskaraz

1

Txantxa txar bat izan da
Jon Juaristirena,
aholkulari dugu
euskararena,
adarra jotzeko du
horrela baimena,
gure kulturarentzat
dakar nahasmena,
hona datorrena
hori da txarrena,
bere adimena
hau bai hondamena,
ken diezaguke *euskal*
izen omena.

2

Jon Juaristik du harro
euskara iraindu,
guztion ondarea
nahita hebaindu,
esaldi eroekin
gaitu zipriztindu,
aho-larriak digu
bihotza astindu,
Erreinuan mindu
hantxe da samindu,
geurea mirrindu
gura du lorrindu,
nork dio hola buru
hori birrindu?

3

Unamuno bezala
Juaristi suharra,
lurpetu nahi du gure
ele zaharra,
gaztelera da bere
hizkuntza goitarra,
"horrela zara", dio
"soilik hiritarra",
euskaldun kaskarra,
gurekin zakarra,
hitza du zantarra
jarrera zatarra,
bakean utz dezala
baserritarra.

4

Euskara biziko da
askatasunean,
justizia beraren
lagun denean,
elebakarrek zinez
maite dutenean,
hizkuntza politika
alde duenean,
giharrak lanean
denok arraunean,
uhinaren gainean
txanparen unean,
etorkizuna dugu
kai barrenean.

*2011ko martxoaren 21ean*

*170*
**Kide bati mirespenez**

1
Paris eta Madrilen
gotorki hesiak,
sakon sustraitu dira
herraren haziak,
kartzelan dagitzate
sarri demasiak,
geuretzat bidegabe
ziega biluziak.

2
Oro umiliagarri
dira miaketak,
goitik agindutako
ohiko araketak,
ezagutzen dituzte
ongi ariketak,
guri larrugorritan
jartzeko lanketak.

3
Susmo bat erabili
zuten kakazteko,
gure eguneroko
ohiturak hausteko,
ziegetan ondasunak
baldar nahasteko,
guztion lotsariak
zikin ikusteko.

4
Atzotik zaude kide
zeharo sututa,
bizipoza zizuten
utzi txikitua,
denak sentitu gara
bortitz zanpatuta,
biluzte kontuekin
gaude nazkatuta.

5
Potroak altxatzeko
hiru makurdura,
agindu zizkizuten
hura asaldura,
zu zeu izatea zen
han zure ardura,
buruari zenion
jantzi estaldura.

6
Oheko somierrean
zeunden estututa,
kartzelazainak zure
kontra oldartuta,
banandu zizkizuten
hankak behartuta,
harroki puztu ziren
irritsa lortuta.

7
Isolatu zintuzten,
gordin mintasuna,
ukatu eta gero
agindu lizuna,
garesti ordaintzen da
hemen duintasuna,
kideak dakarkizu
naro poztasuna.

8
Hurbil dugu eguna
kentzeko kateak,
urrun gera daitezen
kartzelen kalteak,
zabalduko ditugu
zuekin ateak,
agurtuko alaiki
laztanen urteak.

*2011ko martxoaren 28an*

*171*
**Udaberrian udaberriaz**
**– Juana Bixenta Olabe –**

1
Kantuan hasi da izadia,
hostoek jantzi dute pagadia,
erreka garden ibilbidean,
ote usaina mendialdean,
ereserkia,
mardulik dago agertokia,
bihotz hautsien adabakia.

2
Udaberria dator alaia,
lorez bete du tarinen zelaia,
etzanda goxo eguzkitara,
etorri zara begietara,
lilurapena,
gure laztanen oroitzapena,
hozituko da itxaropena.

3
Hontza gogotsu hegaldietan,
udaberriko gau izartsuetan,
miraz behatzen du ilargia,
maitaleak zor dio ongia,
baretasuna,
laketzen zaio isiltasuna,
ordu txikien xalotasuna.

4
Geurea piztu zen maiatzean,
osteratxo bat ezti burutzean,
gainean dago urteurrena,
abagune hau da ederrena,
gogoratzeko,
bion taupadak ez urruntzeko,
etorkizuna besarkatzeko.

5
Diz-diz leunki argitasuna,
barnean puztu zait bizitasuna,
zurekin nintzen zirt munduratu,
zure izena nahi dut goratu,
udaberria,
sorterriaren altxagarria,
txorrotxioen sustagarria.

6
Itzuli dira lirain enarak,
begitarteak daude alegerak,
eurek dakarte gogora grina,
beharrezko den desio mina,
erakarmena,
konpartitzeko blai gozamena,
iraun dakigun zut sentimena.

7

Umeak datoz praka motzetan,
kaleak irauliz antxintxiketan,
udaberria dute aupatzen,
gaztetasuna aldarrikatzen,
odol beroa,
iritsiko da euren aroa,
bultzaka, barrez, dator geroa.

8

Begirunea Ama-Lurrentzat,
udaberria euskaldunarentzat,
saminduran hits gabiltzalako,
horren beharra dagoelako,
erantzuteko,
denak bilduta jori hazteko,
maitetsu bihar gu izateko.

*2011ko apirilaren 4an*

*172*

**AEKri esker euskalakari**

1
Gogoa suspertzeko
zu euskalakari,
gure ilusioen
bitartekari,
ideia zoragarri
anitzen sorkari,
zeuri esker gabiltza
bon-bon lasterkari,
ari zara ari
arin bertsolari,
sarri hegaldari
ametsen gidari,
korrikaren maitale
eta zaindari.

2
Korrikaren eskutik
jendetza bidean,
egunsentian eta
ilunaldean,
lekukoa dakarte
tenk aurrealdean,
euskalakari hitza
hartuta aldean,
lamien ordean
dabiltza galdean,
kantatuz taldean
oraingo moldean,
"AEK aritzen da
gogoz goldean".

3

Hizkuntzak behar gaitu
prestatuko gara,
iritsi da Korrika
enparantzara,
helduen irrifarra
umeen algara,
oro euskalakari
sentituko zara,
kalean dardara
soinean zirrara,
handik zoaz hara
laztanduz euskara,
Trebiñutik hasita
Donostiara.

4

Euskalakari nahi dut
izan eta jardun,
Korrikaren magiaz
zinez euskaldun,
gure hizkuntzarekin
nonahi arduradun,
mingainean dantzatuz
goizero txapeldun,
bizi baino mindun
arbasoen zordun,
nahiago zentzudun
zurekin lehiadun,
azokaren saskian
sagar net urdun.

*2011ko apirilaren 10ean*

*173*

## Hogeita hamar urte espe

**– Ia gureak egin du –**

1
Hogeita hamar urtetan
zigortuta kartzeletan, (BIS)
etxea ametsetan
datorkizu gauetan,
sukaldearen usaia
sendiko giro alaia.

2
Jausi zinen sarekadan
etsaien atzaparkadan, (BIS)
egunen errenkadan
torturen adarkadan,
eutsi zenion goiari
erronka mingarriari.

3
Kartzelan goibel gaztetan
garai jorien kaltetan, (BIS)
larri hastapenetan
itota aienetan,
kideen babesarekin
sendoki zenuen ekin.

4
Sakabanaketarena
krudelkeria alaena, (BIS)
zure amaren pena
eta herritarrena,
gutunak dira arnasa
bisitak pozaren nasa.

5
Maitea pentsamenduan
dabil isolamenduan, (BIS)
zirrararen munduan
hurbil sentimenduan,
etortzen den bakoitzean
lo hartzen du bihotzean.

6
Espetxearen aroa
igaro da gaztaroa, (BIS)
bizipenez naroa
dakusazu geroa,
sasoia baliatzeko
izadia gozatzeko.

7
Gaur zure azken eguna
kalera zoaz laguna, (BIS)
bizimodu zurruna
bihurtu da lurruna,
zain duzu Euskal Herria
asetzeko egarria.

8
Kartzelako atarian
lagun minak agerian, (BIS)
herriko aldirian
malkoak ezarian,
lehenengo aurreskua
bukatu da mendekua.

9
“Kaixo jolasen ibaia
goiko mendiko talaia”, (BIS)
piztu zaizu bisaia
zirt berpiztu kuraia,
irainak lurperatzeko
aberrian uztartzeko.

10
Zurekin maitez aurrean
gutarrak gorazarrean, (BIS)
dardara bularrean
kilimak paparrean,
“euskaldunaren indarra
amnistiaren pindarra”.

*2011ko apirilaren 17an*

*174*

## Joan zizkigun kide gaixoei maitasunez

1
Kartzelak utzi zaitu
zurbil, hebaindua,
larri gaixotu zara
zabiltza hildua,
maite duzu bizitza
herri zapaldua,
uxatu nahi zenuke
gogotik gandua,
onduta ikusteko
aberri mindua.

2
Lurrari eskainita
tinko gaztaroa,
urrun izan zenuen
goxo abaroa,
sarean jausi zinen
kaltetu geroa,
pairatzen ari zara
mendeku eroa,
sentitu nahi zenuke
etxeko beroa.

3
Kartzelak zurekiko
arreta eskasa,
mina arindu duzu
sarri zure kasa,
gaixoen egoera
makur eta basa,
sendagile batzuen
jarrera jolasa,
osasun arloa da
erabat narrasa.

4
Espetxean gaixorik
bikoitza zigorra,
gaua minez igaro
zinez da gogorra,
zure hitz jarioa
dago lar agorra,
justizia zurekin
itsu eta gorra,
esperantzen zelaian
dihardu txingorra.

5
Aske utzi zaituzte
hutsak estaltzeko,
herritarren oihuak
zerbait isiltzeko,
aurkitzen zaren arren
herren ibiltzeko,
iritsi zara garaiz
sendia gurtzeko,
presoen lagunei
maitez eskertzeko.

6
Zirimiriak gaitu
busti barra-barra,
zure ilunaldean
ari du negarra,
etorriko da galant
gure ostadarra,
histura bihur dadin
bihar irrifarra,
amnistiarantz zoaz
taupaden iparra.

*2011ko apirilaren 23an*

*175*

**Atzo, gaur eta bihar zurekin**

1
Belardirik ez dago
mundu lehorrean,
zurekin jolasten dut
zigorren dorrean,
irudikatzen zaitut
xalo alorrean,
ortzemugari beha
bion enborrean.

2
Sorbeltzek bete dute
udako zerua,
zoragarri apainduz
zure ingurua,
lerden itzultzea da
nire helburua,
zurekin maitatzeko
euskal lurzorua.

3
Desioaren deia
ozen burmuinean,
zuregana narama
aldarte onean,
sarri ikusten zaitut
han iraganean,
esnatzen ginenean
blai zorionean.

4
Gaueko ilunean
lo bakardadean,
bildu zara nirekin
dirdaiki oldean,
behar zaitut laztana
ametsen aldean,
etzan gaitezen goxo
lastaira berdean.

5
Larruak bat eginik
txoko kutunean,
taupadak konpartituz
izarren unean,
hontzak ulu egin du
luze urrunean,
hola bizi nahi nuke
etorkizunean.

6
Garden gogoratzen dut
goizero irria,
elkartzen ginenean
oro zen zirria,
oroimena losindu
onuragarria,
geroan murgiltzeko
gure giltzarria.

7
Orainak ereiten du
maitaleen lurra,
sentimendu garbiak
babestu adurra,
lot ditzagun eskuak
ekintza samurra,
umo dadin oparo
hurritzaren hurra.

8
Itxaropenik gabe
bizitza uherra,
biderik zuzenenak
dirudi okerra,
hunkitzen zarenean
dena da ederra,
gaurko ilusioa
biharko plazera.

*2011ko maiatzaren 23ean*

*176*

## Gu bildu gara

**– Ia gureak egin du –**

1
“Zuekin naiz gar bilduko
bakea dut aginduko, (BIS)
justizia piztuko
onura hedatuko”,
Marik dio bihotzetik
euskararen lurraldetik.

2
Bildu gara mendipean
haritzaren gerizpean, (BIS)
etsia ilunpean
utzi dugu harpean,
eraikitzeko herria
euskaldunen aberria.

3
Erabaki dugulako
beharra dagoelako, (BIS)
lehia denez halako
ari gara holako,
jendea erakartzeko
kontzientziak ernaltzeko.

4
Jende dena ez da bildu
ezta ere kiribildu, (BIS)
konpai zara zirtzildu
boterean amildu,
ez zaitez izan berekoi
behar zaitugu lagunkoi.

5
Bildutakoak banatu
nahi gaituzte aienatu, (BIS)
adiskide esnatu
Estatua unatu,
heldu irmoki lemari
adostutako demari.

6
Bildu nahi dute ukatu
urkamendian urkatu, (BIS)
herria da kezkatu
argiki du jokatu,
laketa zaigu batasuna
zapalduen ondasuna.

7
Sartu gara biltegian
itxaropenen hegian, (BIS)
eguzkia sabaian
nagusi den garaian,
eranzteko arrangura
janzteko arin lilura.

8
Atseginean bilduta
oztopoak aldenduta, (BIS)
aitzakiak hilduta
auzolana onduta,
laster daukagu eskura
askatasunaren ura.

9
Sendo dago gara-meta
euskal indar-metaketa, (BIS)
oraingo batuketa
biharko biderketa,
gatazka bideratzeko
konponketa atontzeko.

10
Bildu zara biribila
gure ametsen gurpila, (BIS)
bidean espe pila
amnistiaren bila,
badator egunsentia
haziko da gorostia.

*2011ko maiatzaren 8an*

*177*
## **Gure munduaren drama**

1
Hiltzaileek kalitu
dute hiltzailea,
bortitzena izan da
aise garailea,
txaloka dabil harro
mendeku zalea,
kezkaren eremuan
hits bakezalea.

2
Erailketa ospatzen
ari da Obama,
urpetu du ankerki
Bin Laden Osama,
gaurko xanpain aparra
biharko zarama,
aspaldian hasi zen
Mundu honen drama.

3
Yankiak du ahula
gogor umiliatu,
*Jeronimo* izena
maltzur baliatu,
gorrotoaren zama
dute barreiatu,
gizatasuna berriz
krudel irabiatu.

4
New York, Madril, Londonen...

entzun zen negarra,
Islamabad, Kabulen...
ari da langarra,
kaltedunen ariman
gotor zoritxarra,
sen berekoiek zuten
piztu ezbeharra.

5
Gudarosteak ditu
Obamak harrika,
Munduko erregaiak
dabil aldarrika,
Bin Laden, Jihadaren
bidean txirrika,
zeukan sinesgabeak
hiltzeko irrika.

6
Al-Kaeda indartzen
du txirotasunak,
doilor lapurtutako
aberastasunak,
hainbat jekeren eite
lizun dirudunak,
Korana ulertzeko
modu lar sudunak.

7
CIAren zeregina
oro aztoratu,
euren esanetara
Mundua eratu,
armen negozioak
dituzte garatu,
lehengo bazkideen
kontra bideratu

8
Nazio Batuena
den Erakundea,
gaur egun da Estatu
tzarren etxaldea,
osa dezagun azkar
herrien taldea,
konpartitzeko jator
Lurren lurraldea.

*2011ko maiatzaren 15ean*

*178*

## Plazetan eserita bildu gara

**– Aizak i, mutil mainontzi –**

1
Ikusi zaitut klartuta
Bildurekin hunkituta,
Euskal Herria esnatu zara
lirain suspertuta,
debekua baztertuta,
ilusioa piztuta,
izotzak arin utziko gaitu
ekiak urtuta.

2
Eserita gauerdian
astegun buruzurian,
jendea batu da enparantzan
euskoen hirian,
antsietatea bisaian
ebazpena jakin nahian,
irrintziak du gaua urratu
izarren azpian.

3
Jarri gara harlauzetan
kantuan eta hizketan,
denbora goxo igaro dugu
oroitzapenetan,
hango begi dirdaietan,
zure nini urdinetan,
garden dakusat islatuta
geroa loretan.

4
Bilbon eta Iruñean

udalen ingurunean,
Madril aldera beha urduri
bozaren unean,
“Bai”, entzun da itzalean,
konstituzionalean,
itxaropenak irabazi du
bilduta kalean.

5
Heldu zaigu gozamena
bete delako nahimena,
bilduta dugu auzolanean
gure ahalmena,
eserita goramena,
iritsi da zoramena,
bozgorailutik esan digute
“kito pairamena”.

6
Eroso gure plazetan
besaulkian etxeetan
irratiei ezbaian adi
soa zeruetan,
kartzeletako ziegetan,
irrifarra ezpainetan,
presoak izan dira partaide
ospakizunetan.

7
Zaharrentzat ohorea
guztiontzat kolorea,
matazak bilduz fin ehuntzeko
herri dotorea,
buka dadin dolorea,
askatzeko umorea,
udaberrian ikus dezagun
poz otalorea.

8
Haur jostarien erara

xaloki zutitu gara,
bizipenekin edertu zaigu
gozoro ganbara,
bihar txioen algara,
harraparien ikara,
bildu garenok sentitu dugu
presoen zirrara.

*2011ko maiatzaren 22an*

*179*
**Puertorako autobusa**

1
Hor dator abegikor
Puertorako busa,
astero dezakegu
erosoki usa,
ideia zoragarri
ugariren musa,
euskal presoentzat da
gaitzen errefusa,
berari esker zaie
urtzen malerusa.

2
Autobusean gara
Gasteiztik atera,
maitagarriak dauden
kartzelen aldera,
harantz doa bihotza
guztiz alegera,
goratzeko beraien
jarrera onbera,
konpartitzeko amets
ederrak batera.

3
Bidaiaren xedea
euren kontaketa,
presoei ekarri
gure arnasketa,
autobusak eskaintzen
digu hurbilketa,
gozoro senideen
arteko hizketa,
esperantzak hazteko
arimen gehiketa.

4
Autobusean doa
espearen ama,
umorez uxatzen du
tristuraren zama,
semeak deitzen dio
Anbotoko Dama,
dakarkio herriko
kaleen arrama,
bidean jasotako
koloreen gama.

5
Haurrak penintsula du
lotan zeharkatu,
autobusa ohitura
zaio bilakatu,
ohi duen eran dio
aitxari eskatu,
“kartzelan gura nuke
ama musukatu,
bere larru leuna
goxo ferekatu”.



6
Neguan eta udan
gertu aisietan,
autobus barrenean
ordu luzeetan,
politika kriminal
baten erpeetan,
txalaparta zarete
ziega urrunetan,
goizeko zohardia
une ilunetan.

*2011ko maiatzaren 29an*

*180*

**Dominique lizunkoi anker bat**

1
Lizunkoi anker bat da
Dominique Strauss-Kahn,
hankartea beti du
aisian irrikan,
etxetik kanpo neskak
dihardu zirikan,
hobe jardungo balitz
korrikan karrikan.

2
Strauss-Kahnek omen du
neska bat bortxatu,
hotelean sendia
larriki lotsatu,
New Yorken poliziek
bart dute giltzatu,
Europan eguna da
haserre altxatu.

3
Hiru mila euroko
gelan da itzarri,
bainugelatik irten
basati net txarri,
brasta langile bat du
irritsaz jazarri,
neskaren izen ona
biluzik ezarri.

4
Nazioarteko den
Diru Funts horretan,
aritzen zen Dominique
jaunen mesedetan,
agintaritza zaio
zapuztu grinetan,
ar senak eseri du
epaitegietan.

5
Strauss-Kahn sozialista
eta aberatsa,
bere baitan darama
astunki akatsa,
ez du konpartitu nahi
diruen baratza,
langileari dio
eskaini lokatza.

6
Estatu txiroekin
zorrotz du jokatu,
euren etorkizuna
gaitz hipotekatu,
bankarien bizkarrak
ditu ferekatu,
beraien gutiziak
ongi elikatu.

7
Frantzian hurbil zeukan
lehendakaritza,
sozialistentzat klar zen
euren esperantza,
bilatu duelako
maltzurki triskantza,
oilar gandorra zaio
bihurtu arantza.

8
Dominique bat antzera
ari zarenean,
ama iraintzen duzu
bihotz barrenean,
emakumeak tinko
"Ez", dioenean,
arkeria desegin
adeitasunean.

*2011ko ekainaren 3an*

*181*
## Krabelin amets zoragarrietan zaude

1
Krabelin zeuri beha
nengoen mendian,
arrats sargori hartan
Udako aldian,
tximisten menpe zeunden
arrisku handian,
ekaitz basatiaren
azken zohardian,
erori zinen ziplo
zure belardian.

2
Jaso zintudan leun
esku ahurretan,
petaloa zeneukan
zimel azkenetan,
zurtoina zartatuta
joan zen haizeetan,
lore, bizirik zaude
lo liburuetan,
iluntzetako amets
zoragarrietan.

3
Landare, naro zara
hazi zelaietan,
hostoak prest dauzkazu
gure bazterretan,
sarri ikusten zaitut
hur bizipenetan,
hor zaude paparretan
maiatz lehenetan,
gudari eguneko
oroigarrietan.

4
Gauez sumatzen zaitut
triste bilduago,
goiz-argiaren eske
larri motelago,
eguzkitara zaude
lili alaiago,
ihintzaren jantziaz
dir-dir ederrago,
lorea duzu heze
mardul tenteago.

5
Maite zaitut krabelin
poztu nauzulako,
lurrina goxo-goxo
hedatu delako,
gorri zelai berdean
polit zaudelako,
zurekin sorginduta
bizi naizelako,
txoriak txiruliru
hasi direlako.



6
Erleak gozatu du
ezti krabelina,
tximeletak laztandu
hegan lagun mina,
urrian itzali da
harreman bikaina,
natura gero zaigu
berpiztuko baina,
hala gerta dadila
Ama-Lur liraina.

*2011ko ekainaren 12a*n

*182*

## Futbola, Euskal Jaixa eta alkatea

**– Habanera –**

1
Zuretzat eta niretzat
futbola denbora-pasa,
aisian ez aspertzeko
tabernetako solasa,
berak dakarkigu baina
menpekotasun demasa,
sarritan bihurtzen gaitu
zale beharrean masa,
horren erruz baloi horrek
darabil txanponen kaxa,
erraz eskuratzen ditu
hurra eta mahaspasa,
kulturari zaildu dio
diru laguntzen arnasa,
zelairik gabe bakarrik
erabil dezake basa.

2

Euskararen lurra dugu
ohituren ingurunea,
Munduan eraiki dute
futbolaren auzunea,
telebistak jarri dio
aldeko abagunea,
jokoan dagoenean
gogoen isilunea,
euskal kulturak behar du
guztion begirunea,
eta ez orain tamalez
bizi duen hutsunea,
bertan daukagu hemengo
nortasunaren gunea,
ekar diezaiogun naro
pizkundearen unea.

3
Euskal Jaixakoak daude
Eibarren oso erreta
kaltetu dietelako.
Karparen antolaketa,
alkatearen hautuak
ekarri du aldaketa,
futbolari utzi dio
plazaren erabilketa,
armeroek garaitzeko
aukera zutela eta,
dantzaren ikuskizunak
jasan zuen bazterketa,
azkenean ez zen egin
futbolarien olgeta,
eragin zion ordea
jaiari eragozketa.

4

Futbolak Munduan dauka
geroa ziurtatuta,
Euskal Herri barik ere
jarraituko du puztuta,
kulturarik gabe berriz
euskalduna pitzatuta,
aberriaren zentzua
geratuko da hustuta,
Alkate, gure dantzekin
senti zaitez hunkituta,
Eibarren hurrengokoan
aritu arduratuta,
maiatzean jar ezazu
Euskal Jaixa goratuta,
Larrain dantzari txalotu
golari bezain poztuta.

*2011ko ekainaren 19an*

*183*

**Kirola kartzelan**

1
Kartzela eta kirola
hemen hitz ezagunak,
tamalez euren arteko
harremanak aizunak,
porlanak lagatzen ditu
giharrak net zurrunak,
janariaren koipeak
gorputzak lar astunak

2
Kirolaren helburu bat
erre umore txarrak,
atzean utzi lasterka
pentsamendu kaskarrak,
biraka zabiltzanean
gogoan herritarrak,
itzuliko dira noizbait
antzinako aparrak.

3
Izerdiarekin doaz
etsipen sakonenak,
estresak eragindako
ondoez larri denak,
kirolak urtzen dizkigu
aise kezka gehienak,
zuekin egin ditzagun
amets atseginenak.

4
Bihotza eroso dabil
arnasa neurtuta,
hobeto doaz zangoak
taupadekin batuta,
saioa bukatuko dut
pixka bat nekatuta,
berehala suspertzeko
maitea oroituta.

5
Kiroldegian pilotan
dihardugu hormetan
besoak eta gerriak
astinduz partidetan,
herria sentitzen dugu
hurbil halakoetan,
hauspotzen zaigu punpaka
nortasuna zainetan.

6
Gorputz ariketak dira
guztiz beharrezkoak,
giltzadurak gozatzeko
zinez egundokoak,
kartzelak baldar nahi gaitu
harri antzerakoak,
aberriak aldiz malgu
ihi tankerakoak.

7
Kirola dagigu gogoz
osoro bizitzeko,
osasuna zaintzen dugu
geroa laztantzeko,
askatasunaren nahia
naro elikatzeko,
Euskal Herria zugana
ganoraz itzultzeko.

8
Egun handian ditugu
ateak birrinduko,
ziegako mamu zitalak
betiko aldenduko,
espetxetik lerden gara
korrika urrunduko,
arrats gorrian garaile
besoetan bilduko.

*2011ko ekainaren 26an*

*184*
**Haserretuta**

1
Stephan Hessel zahar gazte bat
jendartea zirikatzen,
utopiaren bide luzean
laño sartzeko eskatzen,
politikari ustel guztien
trapu zikinak astintzen,
pobretasuna hazi delako
bankariak maiseatzen.

2
Etorri zara haserretuta
ukabilak estututa,
langabeziak utzi dizkizu
esperantzak txikituta,
bakarrik baino hobe zenuke
borrokatu elkartuta,
kapitalisten oldarren kontra
kaleak hartu batuta.

3
Sumin dakusat Gazako ama
min du bere erraietan,
etxeko ume zoragarriak
dautza zurbil odoletan,
guda-zaleek darabiltzate
armak herri txiroetan,
gudei esker bikoizten dira
kapitalak bankuetan.

4
Haserre zaitez, haran bat dute

indusmakinek urratu,
garapenaren arrazoipean
baserriak izorratu,
Ama-Lurrari kotxeak sarri
geroa dio zerratu,
gutxi batzuen handinahiak du
ekologia zurratu.

5
Sututa daude bihotz onberak
goseaz dago Afrika,
handik kontsumo oparoari
aritzen dira kirika,
lagundu baino nonahi ditugu
hesiak jaso korrika,
Europan bizi nahi dutelako
datoz ia igerika.

6
Hiratu gara ele txikiak
ari direlako galtzen,
gure munduko edertasuna
dabiltza nahita lurpetzen,
Inperioen hegemoniak
kultura du inposatzen,
gau eta egun dabil herrien
aniztasuna zapaltzen.

7
“Engaia zaitez!”, oihukatu du
liburua goratuta,
Hesselen deiak aspaldi dauzka
gogoak inguratuta,
aldarri hori haizean dabil
mugarriak gaindituta,
munduan ongi biziko gara
ondasunak banatuta.

8
Enparantzetan dabiltza tinko
haserre dauden jendeak,
kartzelan ozen entzun ditugu
aurkeztutako galdeak,
Euskal Herria busti dezala
elkartasun uholdeak,
gure lurralde hau askatzeko
lerrotu zuen moldeak.

*2011ko uztailaren 3an*

*185*
**Erraustegirik ez**

1
Errauskailu bat nahi dute
ezarri zubietan,
Donostiako lurretan
Usurbilgo mugetan,
zaramak gura dituzte
kiskali labeetan,
birziklatu beharrean
zaramategietan.

2
Lurra txikia delako
ingurumena zaindu,
birziklatzen duenari
zergak kentzen ordaindu,
argindarra dela eta
auzo hau ez iraindu,
zubietarrak maite du
loraldia usaindu.

3
Txoko eder bat urratu
betiko zatartzeko,
dirudunen handi nahia
porlanaz asetzeko,
mendialde bat suntsitu
zakarra erretzeko,
osasuna egunero
arriskuan jartzeko.

4
Kontsumismoaren erruz
zorroak metatuta,
jendartean aspalditik
gabiltza kezkatuta,
baserriko ekoizkinak
zentzuz kontsumituta,
ikusiko genituzke
zaborrak murriztuta.

5
Zakarra bihurtu dute
irabazkin erretzen,
horrela dirutu dena
harro dabil kutsatzen,
gaurko kontsumo ohiturek
lar gaituzte kaltetzen,
guztiak izango gara
garaile birziklatzen.

6
Zaramak sukaldeetan
bereizita prestatu,
atez-ateko ontziak
arduratsu hautatu,
bizimodua ontzeko
ekimena sustatu,
errauts zaleari hola
jostailua zartatu.

7
Berrerabili zaborrak
ongarritu larrainak,
ez ditzala alferrikan
erre labe zikinak,
gezur eskas asko dio
txanponaren mingainak,
keak zoritxarrez ditu
hazten soinean minak.

8
Suak sosez beteko du
berekoien kolkoa,
astinduko hustu arte
udalen poltsikoa,
errraustu baino nahiago
biriken aldekoa,
izan dadin Zubieta
txorien gogokoa.

*2011ko uztailaren 10ean*

*186*

## Neskatoa erditu da

**– Bertsuak jartzen naiz hasi. *Afrikako Gerra*. Paulo Yantzi –**

1
Motel dabil oharketa
sexu arloko heziketa,
merezi du hausnarketa,
gazte ugari urduri dago
gertu dute ernalketa,
txar eginda ariketa,
axolagabe uztarketa
kondoien erabilketa.

2
Arkeriaren erpetan
eror zaitezke jai gauetan,
lizunkoiaren grinetan,
uxatu azkar ezezaguna
mozkorren inguruetan,
ez zaitez ito drogetan,
ezta ere arriskuetan
adinduen lokatzetan.

3
Gazte batek du limurtu
bizipoza dio lapurtu,
haurdun utzita agurtu,
hamabi urte baino ez dauzka
neskatoa da beldurtu,
urdaia zaio uzkurtu,
begirada oro muturtu
gaztetasuna laburtu.

4
Abortua baztertuta
sinesmenak debekatuta,
etxekoek ukatuta,
eskolan ez da bihar sartuko
haurduntzeak behartuta,
harrabotsaz nazkatuta,
lagunik gabe tristatuta
malkotan dago hustuta.

5
Amatxo eta nerabe
aurrerantzean gogo gabe,
sentimena du herabe,
agur jolasak eta desirak
ezinean atsekabe,
haurra bere nahien jabe,
izango da zama nahigabe
egoera dohakabe.

6
Erditu zen pinpirina
oihukatuz barneko mina,
zartatuta larru fina,
gorputz argalak jasan zituen
kizkurduren eragina,
izuduraren usaina,
zesarearen ebakina
eta buruko samina.

7
Neskatoa ametsetan
urrun dabil zorionetan,
balizko bizipenetan,
ilargiak du zaintzen ohean
liluraren taupadetan,
biziko da izarretan,
haurra jasota besoetan
kantuaren laztanetan.

8
Irten dira argitara

jaitsi gure karriketara,
begi gehienen bistara,
plazan neskatxa eta umea
gozoro eguzkitara,
hurbildu gara bertara,
xuxurlatuz bien baitara
“zatozte bihotzetara”.

*2011ko uztailaren 17an*

*187*

## Mendekua pikutara

1
Pikutara mendeku
hotz eta krudela,
giza eskubideen
haustaile itzela,
haizatu behar dugu
egurats umela,
etor dadin dirdirka
goiz-argi epela.

2
Mendekua ekintza
madarikatua,
estutzeko gehiago
herri zanpatua,
inperioen tresna
malapartatua,
barreiatzen du hemen
eta han lantua.

3
Begia begi truke
da euren arrantza,
esperantza nahi dute
bihurtu lokatza,
mendeku zaleena
bizimodu latza,
ezin zuzendu barik
herraren akatsa.

4
Boterea izan zen
saien aitzakia,
konkistatzeko erraz
lurralde txikia,
defendatu zelako
hango jendakia,
mendekatzen ari da
gaizto handikia.

5
Espainian eskumak
nahi du mendekua,
bakeari ez dio
eskaintzen eskua,
gerran dabil aiseki
kriminal zakua,
bortizki jabetu zen
habiaz kukua.

6
Mendekuaren ordez
landu konponketa,
poliziak ostendu
utzi jazarketa,
sasiak ebakita
bihar hurbilketa,
geuretzat beharrezko
den elkarrizketa.

7
Mendekua bultzatu
gogoak mintzeko,
askatasunen nahia
gogor itotzeko...,
borrokan jarraituko
dugu bizitzeko,
demokrazia hona
mardul ekartzeko.

8
Haizeak ekarri du
goxo xaramela,
euskaldunen garaia
dio datorrela,
euskararen lurrean
biziko garela,
ahantziko dugula
espeok kartzela.

*2011ko uztailaren 24an*

*188*

**Borrokatu bizitzaren alde**

**– Bertsuak jartzen naiz hasi –**

1

Minbizi bere izena
hilgarri omen abizena,
gauzarik malerusena,
egon ez balitz bezala jardun
jarrerarik eskasena,
onartuko dut naizena,
larru, hezur, ur eta sena,
hori da hautu zuzena.

2

Gaur argitu zait auzia
gorputzaren ahulezia,
min handiaren hazia,
garden esan dit sendagileak,
"hortxe duzu minbizia",
bihurtuko da hesia,
osasunaren luizia,
heriotzaren gezia.

3
Minbiziak nau lotuko
bere sarean estutuko,
geroa dit mugatuko,
arindu izan banu estresa
ez ninduke kaltetuko,
egia dut jarraituko,
denbora aprobetxatuko,
ikaspena eskertuko.

4
Ohetik jaiki orduko
erabakia dut hartuko,
esperantza bultzatuko,
minbiziaren aurkari baino
maiteak ditut poztuko,
alaiki naiz dutxatuko,
bizizale bilakatuko,
izadian uztartuko.

5
Ehunak zart inbaditu
zelula anormalen itu,
gogorki naute jipoitu,
azkar garatu da tumorea
gorputza tak zait eritu,
babes edo zirrikitu,
maitasunean dut aurkitu,
umorea dit bizitu.

6
Eroriko zait ilea
hasiko da goragalea,
naiz kimio hartzailea,
barnean dabil bere indarra
tximista laguntzailea,
gaur nire suspertzailea,
minbiziaren haustailea,
zelulen zuzentzailea.

7
Marihuanaren sugarra
onurarentzat deiadarra,
lokartu dit har zakarra,
ilusioa dabil gogoan
aurpegian irrifarra,
morfina beste adarra,
ahitzen du minen zuztarra,
ekaitzaren ostadarra.

8
Agurtu nahi dut ibarra

azkenez ikusi alorra,
gozatu usain sarkorra,
lagun nazazu, eraman, arren!
Zain dauzkat goiko tontorra,
eta aurreko altxorra,
gure Kantauri hilezkorra,
nire errautsen atorra.

*2011ko uztailaren 31n*

*189*

**Mendata Sakoneta**

1
Antzina lez dotore
uhinen aparra,
Sakonetak ekidin
zuen ezbeharra,
kalan jaso nahi zuten
zentral nuklearra,
baztertu zen betiko
asmo net kaskarra,
kontra zegoelako
euskal herritarra.

2
Itsasoa etsita
mendiak malkotan,
Basajaun gorpu zetzan
goizean Mendatan,
Bilbon zuten bahitu
eta utzi bertan,
hilketa oroitzen du
zelaiak urtetan,
geroztik datza goxo
euskal bihotzetan.

3
Bata bestetik hurbil
biak Debakoak,
Mendata, Sakoneta
udako txokoak,
maitaleentzat zinez
paregabekoak,
orduko bizipenak
ditut gogokoak,
zuekin batzen nintzen
garai hartakoak.

4
Itzuliko naiz noizbait
aske haranera,
Kantauri itsasoko
zuen bazterrera,
olatuen xuxurla
lasai entzutera,
belardian etzanda
amets egitera,
zuekin atsegina
bor-bor sentitzera.

5
Kaioek dagitzate
garrasi nagiak,
itsaslabar grisetan
muino orlegiak,
beheko hondartzetan
hondar beilegiak,
harkaitzen inguruan
naro itsaskiak,
babes ditzala jator
gure jendakiak.

6
Ekik hedatu ditu
gogoz errainuak,
zuen lurretan barna
dantzuzkit soinuak,
natura joriaren
kantuen doinuak,
irudikatu ditut
biharko leinuak,
kalaz kala zintzoki
zaintzen domeinuak.

*2011ko abuztuaren 7an*

*190*
**Presoak topeka**

1
Preso batek beste bati
bihotza dio hustu,
huskeria batengatik
bizitza zart zapuztu,
hilotz datzanari zaio
etorkizuna haustu,
aurkariari ordea
esperantza erraustu.

2
Espe batzuk dira bortitz
espearen etsaiak,
tarteka dakuskit ero
topeka ahariak,
hola metatzen dituzte
kartzela eskariak,
ahantzita zain daudela
etxean familiak.

3
*Tigre* deritzote hemen
borroken tokiari,
patioetan dagoen
komun inguruari,
elkar jotzen dute bertan
men eginez herrari,
arrak direla esanez
ozenki munduari.

4
Isolamenduan dute

liskartiek amaitzen,
zigor-gela zikinetan
dituzte tak zanpatzen,
oldarkortasuna zaie
orduan amatatzen,
hasteko zozo zauriak
banan-banan zenbatzen.

5
Presoa muturka dabil
egoa hauspotzeko,
eta oharturik gabe
porlana gotortzeko,
kartzelak baliatzen du
guda gu miatzeko,
eremuan diziplina
gogorki ezartzeko.

6
Drogen mende bizi dena
izaten da galtzaile,
zorra hazi bezain azkar
jipoien jasotzaile,
hobeto izango balitz
kulturaren hartzaile,
eta ez heroinaren
hauts gaitzen erretzaile.

7
Ez du merezi alferrik
joka eri bukatu,
kartzelan eskubideen
alde fin borrokatu,
jendartean uztartzeko
burua elikatu,
garai pozgarrien deia
gogoan harilkatu.

8
Apaldu gizonkeria
liskarrak uxatzeko,
aprobetxatu denbora
kartzela laburtzeko,
atera drogen zulotik
bizitza laztantzeko,
etxekoen maitasuna
osorik jasotzeko.

*2011ko abuztuaren 14an*

*191*

**1110000111**

**– Ikusten duzu goizean –**

1
Zenbaki bat zarenean
kartzelaren barrenean,
soa duzu porlanean,
murru grisean ezerezean
diziplinaren menean,
zabiltza hits aienean,
lur jota etsipenean,
lekurik narrasenean.

2
Ez bat baizik eta hamar
digitu edo atzamar,
bilaka zaitezen zamar,
zu erabiltzen ari direnez
bizi zara sorgor samar,
esan kartzelari marmar,
“nire grazia da Aimar,
eta baserria Zumar”.

3
Kartzela oro da putza
burmuinarentzat bisutsa,
sute txar baten errautsa,
pot zaudenean belztura latza
galernak dakarren hautsa,
zabaldu iraultzen kutxa,
zuzendu trebe barautsa,
pitzatu zenbaki hutsa.

4
Zenbaki bat da kartzela

horixe ziren Mandela,
eta bere zigor-gela,
hamar digitu ditu zeureak
gogoratzeko zarela,
zikoinen zolan igela,
zurtz galduta urmaela,
kateen mende mengela.

5
Zenbakia da kodea
zu zapaltzeko moldea,
deituren izenordea,
espe bihurtu zinen urtea
gizentzeko artaldea,
Mandelak zuen ordea,
militanteen fedea,
Hegoafrikan xedea.

6
Behatu xalo zerua
sendatu zure burua,
baztertuz estakurua,
kendu gogotik zenbaki hotza
eta bere ingurua,
aldatu gaur asturua,
ukitzeko helburua,
askatasunen zorua.

7
Izan zinena oroitu
ziegan amestuz berritu,
hola kartzela gainditu,
zenbakiari ertzak higatuz
mamu gaiztoa garaitu,
kideen kantak aditu,
euren babesa sentitu,
esperantzak konpartitu.

8
Bisaian dabil irria

maiteminaren zirria,
osatzeko gaitz larria,
zuk ere duzu sostengu on bat
deitzen da Euskal Herria,
larrua eta harria,
geroaren oinarria,
arimaren pizgarria.

*2011ko abuztuaren 21ean*

*192*
## Zerua munduan

1
Aitxa Santu omen den
zahar setatsua,
gazte kristauentzat da
artzain ahaltsua,
Madrilen batu dira
bilkura dontsua,
berresteko otoiztuz
fede gihartsua.

2
Benediktok klar dio
Josu zale dela,
berea da ordea
eredu motela,
txiroentzat darabil
berbaldi epela,
bankarientzat txintxin
dirutza itzela.

3
Apaiz atzerakoia
gor Vatikanoan,
eskumatarren alde
sermoi barrokoan,
aurrerakoia dabil
lanean auzoan,
jendeari laguntzen
beharren ildoan.

4
Eliza pobrea du
xede abadeak,
urre barik daitezen
egon aldareak,
uxatzeko Mundutik
behingoz gudateak,
bidegabekeriak
eta goseteak.

5
Bakerik ez du lortu
Elizak mendeetan,
txar ibili delako
guda krudeletan,
Josuk “maita zaitezte”,
zioen plazetan,
egia zabaltzeko
xalo herrietan.

6
Jainkoaren omenez
hola edo hala,
kristau herriak armak
ekoitz ez ditzala,
eguzkia denontzat
doan den bezala,
gizakiak onura
konparti dezala.

7
Elkartasuna behar
dugu gizenago,
berekoien sabela
aldiz argalago,
gurutze gutxiago
maitasun gehiago,
Mundua izan dadin
hola hobeago.

8
Gatazken infernuan
bizi beharrean,
ezagutu nahi nuke
Zerua Lurrean,
haurrak ase Hegoan
eta Iparrean,
alaiki jolasean
izarren larrean.

*2011ko abuztuaren 28an*

*193*

**Jardun euskal herriaren alde**

1
Soldata on baten truke
hemendik zoaz hara,
axolarik gabe duzu
aldatu alkandora,
itsasoan galtzen den lez
ontziaren uhara,
erraz desagertu zaizu
utopien zirrara.

2
Ideologiak dira
asmoak gorpuzteko,
txarrak eta onak daude
jendartean hazteko,
gure herriak behar du
biziraun izateko,
"bil gaitezen", dioena
bihar aske pizteko.

3
Putz bultzatu dugulako
euren Estatuena,
zoru hau da Espainia
eta Frantziarena,
euskalduna izan dadin
berak gura duena,
herri honen geroa da
ehundu behar dena.

4
Orain arte politikan
ez zara inplikatu,
gaur entzun duzu eskaintza
eta ezin ukatu,
alderdi horri sekulaz
ez diozu bozkatu,
Euskal Herriaren kontra
delako borrokatu.

5
Zure hautuak du gugan
eragin lurrikara,
leihoan zeneukalako
zirt presoen izara,
euskaldunak arinegi
txar inguratzen gara,
herraz itotzen gaituzten
jauntxoren gortetara.

6
Udalean ari zara
aurpegi gogorrekin,
erabakitzeko hitza
ukatzen dutenekin,
zabiltza mendiak jaten
aberats berriekin,
euskarari lurra zital
kentzen dabiltzanekin.

7
“Nire lana da”, diozu
jarrera zuritzeko,
ispiluaren aurrean
lotsaz ez gorritzeko,
zuretzat aukera bat da
egoa aupatzeko,
eta neurri berean
bizitza hobetzeko.

8
Diru zaleekin baino
zatoz jator gurekin,
jendarte solidario bat
jaso nahi dugunekin,
alkandora zintzo jantzi
lanean hasi ekin,
etorkizunaren alde
Euskal Herriarekin.

*2011ko irailaren 4an*

*194*

## Utikan genero-bortxa

**– Bertsuak jartzen naiz hasi –**

1
Hau bai mintzagai larria
genero-bortxa hilgarria,
ez gaitzala gaitz narria,
edonon dantzut albiste txarra
"bart andre bat jazarria",
ozen dabil aldarria,
"kaletik at ar mingarria,
utikan nazkagarria".

2
Aizto zorrotz bat hartuta
abiatu da oilartuta,
sen matxistak gidatuta,
emazte ohia du sor sastatu
hor datza odolustuta,
koldar jomuga lortuta,
aurkitu dute urkatuta,
umeak zurtz izututa.

3

Sartu da gelan karranka
senarra hasi zait laztanka,
irmo esan diot “hanka!”,
sexua behar zuen mozkorrak
agurtu nau garratz zaunka,
burua dabil itaunka,
erantzuna dator kulunka,
halako xextrak ehunka.

4

Ni nintzen bere bihotza
etxe honetako bildotsa,
orain soilik naiz gorotza,
irainez bete du sukaldea
jeloskor dator ar motza,
zakar moztu dit ahotsa,
sentitu dut zart esku hotza,
baitan oinaze zorrotza.

5
Gaur ezin zaitut barkatu
harremana duzu puskatu,
maltzur zenuen jokatu,
atzo irria zenidan ostu
aurpegia kolpekatu,
gura nuke oihukatu,
zure bortxa madarikatu,
arkeria zatikatu.

6
Ankerki zaitu jipoitu
begiak zaizkigu gorritu,
ezin zara hola ohitu,
gori-gori zen atzo etorri
larrua zizun zauritu,
goizean gara okitu,
ar bortitza dugu hesitu,
salatu, tinko txikitu.

7
Matxista zaren gizona
zara denon ezinegona,
beldurren putzu sakona,
alda ezazu behingoz jarrera
indargetu zure sona,
ekarri txit zoriona,
preziatu izadiko dona,
indartu aldarte ona.

8
Hautsita mendetasuna

hustuta matxismo iluna,
iritsi zaigu eguna,
poz esateko egunsentian
zu gure mutil-laguna,
ontzeko berdintasuna,
zatoz gizon berri kutuna,
gozatzera maitasuna.

*2011ko irailaren 11n*

*195*

**Gure Gotzone**

1
Brau da berriz aldatu
belardi zorua,
eguzkiak jantzi du
dotore zerua,
pozarren dator txortxor
txorien korua,
zurekin loretsu zait
txoratzen burua.

2
Urte-pila Gotzone
zurekin bizitzen,
une txar eta onak
samur konpartitzen,
hementxe zaude bihotz
ametsak eztitzen,
zigorraldi nekeza
nirekin gainditzen.

3
Harremana hasi zen
epaiketa hartan,
airean irrifarra
eta hainbat laztan,
gutunak genituen
trukatu sarritan,
zirrara ernaldu zen
kartsu bularretan.

4
Urruntze politika
ziguten ezarri,
izarrei jarraiki
bidea lokarri,
kartzeletan zen zure
kemena txintxarri,
maitasuna zitzaigun
hazi zoragarri.

5
Ezkontzeko aukera
genuen mamitu,
saihesteko hainbeste
arau txilibitu,
urrats horrek gintuen
erabat hunkitu,
eraztunak ez dira
inoiz erdibitu.

6
Gero etorriko zen
etxeko altxorra,
haurra bihurtu zaigu
mutiko koskorra,
oro zipriztintzen du
kartzela elkorra,
etorkizuna zara
Oinatz maitekorra.

7
Gaurkoak izango du
bihar jarraipena,
geroan dago dirdai
gure garaipena,
Euskal Herrian dabil
aldarrikapena,
adimenari esker
denon askapena.

8
Xalo biziko gara
Zarauzko lurretan,
Elorrion noizbehinka
aise sustraietan,
eskutik oratuta
arrats gorrietan,
zoriona sentituz
punpaka zainetan.

*2011ko irailaren 18an*

*196*

## Vuelta eta Tour burujabeak izan nahi ditugu

1

Frantzia eta Espainiaren
triska nahi dut isolatu,
euskaltasuna galtzeko duten
asmo petrala salatu,
euren xedea gure lurretan
gogoak asimilatu,
berrehun urte dabiltza hola
txarki gaituzte zulatu,
hizkuntza eta kultura ia
dizkigute txirtxilatu.

2

Kirolak zikin darabiltzate
sartzeko etxean sitsa,
telebistako esatariak
estaltzeko gure hitza,
gaur erabili nahi dute hemen
hola txirrindularitza,
hor dabil ero sosak xahutzen
EAEko Jaurlaritza
Vueltarekin net senti dezagun
Espainiako irritsa.

3
Kirola ondo dator herrien
harremanak sendotzeko,
hainbat ohitura eta kolore
zintzoki ezagutzeko,
elkartasuna jator lantzeko
trebakuntzak trukatzeko,
Madrilek nahi du hori ordea
Estatua indartzeko,
aspaldi bortxaz altxatu zuen
batasuna gotortzeko.



4
Espainiako Vuelta omen den
lasterketa dela eta,
ESAITek egin du luzaroan
behar beste prestaketa,
Espainiak du aldiz baldarki
dantzan jarri bizikleta,
eragozteko asmoz helmugan
herri baten agerketa,
denon kemenak du irabazi
erraz samar neurketa.

5
Euskal Herrian bihotzez dugu
txirrindularitza gurtzen,
elkarte asko dabil urtetan
lasterketak antolatzen,
zaleek dute gogoz edozein
txirrindulari txalotzen,
ez dugu baina gura Vueltarik
ez garena inposatzen,
espainiarrak garela ozen
duelako goraipatzen.

6
Vuelta eta Tour zatozte, arren,
poz gaudenean euskoak,
zuengandik at ditugunean
eratu gure txokoak,
burujabeak izan nahi dugu
aske indartu erroak,
martxan ipini kirol arloan
bertako selekzioak,
Munduko beste herrien gisa
gauzatu ilusioak.

*2011ko irailaren 25ean*

*197*
**Ezarri kutunen plakak berriro**

1
Plaka bi zeuden hor ezarrita
hutsuneak nau tristatu,
mendekuaren menpe gabiltza
hori gura dut aitatu,
“ezin duzue”, esan digute,
“zuen kutunak maitatu”,
eure xedea da senideen
sentimendua zartatu.



2
Salaketa bat izan zen plakak
erauzteko aitzakia,
eskuindar tzarrak trebe darabil
epaileen epaikia,
udaletxeak bete zuen sor
Madrilgo erabakia,
zuen lagunok sentitzen dugu
bihotzetan ebakia.

3
Galtzaile eta irabazleen
bakea nahi dute jaso,
gatazka ongi bideratzeko
asmo hori da arazo,
tarte batean ariko dira
herra hedatuz akaso,
baina herriak egingo die
konponketarekin paso.

4
Bi mailatako biktimak daude
zoritxarrez herrietan,
berdin pairatzen dute ordea
kaltea su guztietan,
udalak ditu omentzen batzuk
utziz hauek ilunpetan,
ez dezatela denborarik gal
antzuak diren gauzetan.

5
Joan direnentzat begirunea
behar genuke eskatu,
izan zirena zintzo kontatu
oroimena elikatu,
ezin ditugu sorgor ahaztu
zatar izana ukatu,
“injustizien biktimak dira”
nahi nuke aldarrikatu.

6
Frankisten eta erreformaren

ondorio da gatazka,
Frantzia eta Espainiaren
bortizkerien karraska,
testuinguru hori izan da
oro har biktimen aska,
ezagutza da behar dutena
hitz eztien abaraska.

7
Gure arimak ezin ditugu
lurrundu ezerezean,
seme-alabak amildu ziren
gazte samar oinazean,
amesten dautza guztion alde
Ama-Lurren babesean,
ihintzak eder jantziko ditu
askatasunen goizean.

8
Plakak ez dira zuekin dirdai
egongo garren argian,
Udaltzaingoak kendu zituen
opor egunen garaian,
gure Irailak 27
Eibarko omenaldian,
zuei beha hunkitu gara
lorategiko hegian.

*2011ko urriaren 2an*

*198*

**Itzul zaitez kide**

1
Epaiketan eskatu
duzu barkamena,
lurpean nahi zenuke
utzi oroimena,
esan larri “neurea
da soilik hobena”,
eta ez gerra zital
piztu zutenena,
espetxean diguzu
mindu sentimena.

2
Urrun zaude berekoi
gu zokoratuta,
Estatuen eskaintza
merke onartuta,
jauntxoekin zabiltza
oro tronpatuta,
euren alde lanean
sena pitzatuta,
negargarri biziko
zara makurtuta.

3
Izan zinenaz zaude
orain lotsatuta,
bortitzen zirriekin
erraz limurtuta,
Estatu arrazoiak
hala behartuta,
zure militantzia
narras ukatuta,
telebistan agertu
zara damututa.

4
Zure jarrera konpai
izan da lizuna,
zalantzan jarri duzu
gure gaitasuna,
itzul zaitez lagata
bidexka aizuna,
laztandu krabelina
baztertu asuna,
elkar dezagun jator
gaindi behazuna.

5
Eskuratzeko zuzen
euskoen harana,
etorkizunak nahi du
denon auzolana,
eta ez banako hits
batzuen afana,
aizu kide, ez zaitez
hurbil horiengana,
ez osatu baldarki
galtzaileen klana.

6
Joan dadila hondora
horrenbeste porlan,
egun handia dugu
sumatzen kaiolan,
gure zain poz zaudete
kantuan arbolan,
txoriak lez nahi dugu
zuekin egin lan,
kabia jaso hegan
aberriko salan.

2011ko urriaren 9an

*199*

## Euskal irria aurrera

**– Uso xuria errazu –**

1
Bihotzetan zaude musu
zazpiak bat baitan duzu,
Euskal Irria zara zu,
gau argietan hamaika kantu
eskaini dizute usu,
zure larruan gozoro bizi
hori bai dela zinez luxu (BIS).



2
Irria gure ikurra
ontzeko denon muturra,
keinu erabat ziurra,
erakartzeko jator herria,
zu, ni, edota zurra,
atsegina nahi dugu hedatu
boz bizi dadin Ama-Lurra (BIS).

3
Dakusazu ostadarra
bukatuko da liskarra,
bihar jai eta aparra,
garai berria dator galanki
piztu zaizu irrifarra,
gure txokoak agurtuko du
zirraraz presoen gabarra (BIS).

4
Murillo zakar mahaian
soa du mailu txikian,
ebazpen gaitza bisaian,
epaiketan duin auzipetuak
irrifarra aurpegian,
“demokrazia euskaldunentzat”
esan dute modu garbian (BIS).

5
Arnaldo, Sonia, Miren,
Arkaitz, Rafa... berriz ziren,
bertan oporren ondoren,
zigorra ziegan jasoko zuten,
lasaiki zeuden bederen,
konponketa on bideratuta
barrezka zituzten ediren (BIS).

6
Etxean triste bai zera!
Barrearekin aurrera,
atera zaitez kalera,
auzoan dugu zeregin franko
goazen kantari batera,
muzinka baino hobe pozarren
jendartea irabaztera (BIS).

7
Esnatu da eguzkia
aurrean dut marrazkia,
zorionaren aurkia,
zoragarriro mapa barrezka
hola dabil jendakia,
mezu baikor bat nahi dut aipatu
"NBEn prest daukat aulkia" (BIS).

8
Olibondoen adarrak
isil daitezen negarrak,
itzaltzeko bortxen garrak,
poz jardun dute gure zintzoek
iraultzen bide zaharrak,
Euskal Herriak ikusi ditu
ñir-ñir joan zirenen izarrak (BIS).

*2011ko urriaren 16an*

*200*
**Hamaika urte**

1
Gauaz etorri zara
hamaikagarrena,
urriak hamazazpi
doi urteurrena,
tamalez data hartan
zain neukan txerrena,
pairatu eta gero
kartzela hurrena.

2
Luze egongo zara
nirekin hamaika,
gogoan kokatuta
zatarki kirika,
aurreko urteak lez
ergelki zirika,
"kartzelan zaude preso"
sarri errepika.

3
Zu baino lehenago
hamaika bizipen,
milaka bozkario
hainbeste etsipen,
bertan ezagutu dut
irmo Eroapen,
eta ondoan gizen
gure Itxaropen.

4
Hamaika, mugagabe
da hemen oraina,
hola digu kartzelak
aurkezten iraina,
izan dadila zure
urtea liraina,
arnas dezagun laster
etxeko usaina.

5
Zenbaki astuna dut
motxilan sartuko,
ez du gehiegi zamak
soina estutuko,
zuen maitasunak dit
irria piztuko,
urtetako tristura
baitatik hustuko.

6
Amesgaiztoak jaurtiz
ahazturen zangan,
hamaika izango da
orain dena ziegan,
irudimena daukat
desioen organ,
berehala pozarren
joateko zuengan.

7
Hamaikagarrenean
dator aldaketa,
zuekin bizitzeko
jaio ginen eta,
konponketen bidean
zubi hurbilketa,
hutsik geratuko da
sakabanaketa.

8
Hamaika udaberri
zurekin geroan,
Euskal Herrian aske
hitzaren aroan,
gaurko ajeak urrun
laztanen giroan,
izadian maitea
zure abaroan.

*2011ko urriaren 23an*

*201*

**Uztartu zaharra eta gaztea**

**- Habanera -**

1

Gazte harroak zeken du
baztertu jende zaharra,
berarentzat adindua
askoz jota da abarra,
garai modernoa dio
dela onura bakarra,
alferrik duela berak
antzinakoen beharra,
axolagabe duenak
eteten hari meharra,
jartzeko nagusiei
mespretxu beltzaren marra,
nortasuna galduko du
bere herriko iparra,
ustelduko zaio aitxa
eta amaren zuztarra.

2

Gaur ez zaudete gurekin
heldu zen goibel arratsa,
joan zineten esparrutik
sakon utzita lorratza,
zuekin eman genuen
umetan lehen urratsa,
ordutik dakigu zein den
maitasunaren ardatza,
hilberritako unea
bilakatu zen arantza,
gabezia bihotzean
mingarri eta garratza,
zorionez baitan piztu
zenigutelako hatsa,
gurekin bizi da polit
zuen irrifar apatza.

3

Zaharren belaunaldia
ia zaigu desagertu,
euren mintzaira joria
herrietan da atertu,
istorio eder haien
zubiak dira lehertu,
bizipen xumeak ditu
denborak zatar ugertu,
oroimena ongi landuz
izan ditzakegu gertu,
konturatu garelako
dena ez da txar okertu,
beren aholkuak zaizkit
gogoan garden agertu,
euskara dela guztion
ondarea dut ulertu.

4

Zuekin nahi dut betiko
bizitza poz konpartitu,
zuen eredu jatorra
jendartean inbertitu,
orduko zirrara naro
nire barnean sentitu,
baieztatu ez dugula
katebegia zatitu,
nirekin zaudetelako
adorea zait zutitu,
ametsen aterpetik naiz
zelaietara partitu,
landareak hazi dira
ihintzak ditu beztitu,
sentimena didazue
lurrinarekin eztitu.

*2011ko urriaren 30ean*

*202*

**Amaiurren bildu gara**

1
Baztan, Amaiurren zaina,
bihotza Nafarroa,
arbasoek izan zuten
galeraren orroa,
bortizki nagusitu zen
inperio harroa,
oroitarrian hazi da
esperantzen erroa.



2
Amaiurko gazteluan
gotortu zen nafarra,
defendatzeko sutsuki
erresuma zaharra,
zubia eraiki dugu
jaso haien giharra,
auzolanean pizteko
itzalitako garra.

3
Amaiurko arimentzat
maiteki oroimena,
inoiz ahantz ez dezagun
gertatu zen krimena,
hemen gaude aipatzeko
bero gure omena,
burujabe izan dela
herritarren nahimena.

4
Amaiur, zu lez gabiltza
hainbat lagun batuta,
atzoko eta oraingo
xedeak uztartuta,
izan zinelako gaude
gerritik oratuta,
gura dugulako bizi
zurekin askatuta.

5
Bildu ginelako zintzo
sortu zara Amaiur,
Euskal Herriak zurekin
biziraungo du ziur,
zazpiak bat egingarri
diezaguzun net bihur,
gure atsegina duzu
sentituko beti hur.

6
Amaiur urrats sendo bat
geroa idazteko,
hamarnaka eskubide
behingoz irabazteko,
elkarrekin ari gara
lurraldea janzteko,
jasan dugun gerrateren
istorioa ixteko.

7
Amaiurrek garbi nahi du
esan bere mezua,
ondasunak partekatu
dela konpromisoa,
euskara berriz altxorra,
Ama-Lurren musua,
erabakitzeko hitza
bakearen pausua.

8
Amaiurretik ari da
deika gogoetara,
muinoaren aztarnatik
txoko guztietara,
txepetxak ederki dio
txortxor lau haizetara,
"aurreskuen garaia da
zatozte plazetara".

*2011ko azaroaren 6an*

*203*

**Aieten leihoak zabaldu ditugu**

1
Kofi Annanen taldeak
sasia du moztuko,
irekitako bidea
diegu eskertuko,
Aietek injustiziak
dizkigu baztertuko,
eskubideen argiak
begiak edertuko.

2
Aiete izan zen Franco
faxistaren egoitza,
barnean dena zegoen
ilunki eta hitsa,
jauregi zoragarrian
nagusitu da bitsa,
zuri-beltza izan zena
gaur ortzadar anitza.

3
Aieteko jauregian
bildu zaigu Mundua,
aurkezteko klar gatazka
konpontzeko modua,
adituek txukun dute
gauzatu agindua,
geure txanda hasiko da
herriaren ordua.

4
Bost ondorio ditugu
batzarretik atera,
gatazka bideratzeko
behar den hurrenkera,
demokrazia zertzeko
bortxak bertan behera,
amnistia bero gero
zirraren hasiera.

5
Aieten ez da Francoren
oinordekorik sartu,
berbaren alde ez dira
parte-hartzen ausartu,
gatazka bat dagoenik
ez dute nahi hitzartu,
ezta ere nazio bat
garenik ontzat hartu.

6
Bakerako jator dugu
behar besteko nahimen,
Kontxaren aldera beha
makina bat oroimen,
goian dauden izarrentzat
ohore eta omen,
euren gorazarrez hitz bat
dantzugu maitez: kemen.

7
Udaberrian darraigu
Kantauri itsasoan,
bizipoza dabil aise
Euskal Herri osoan,
Aieten adostasunez
eman dugun pausoan,
diogu denok garela
garaileak auzoan.

8
Urguldik Igeldoraino
badia dago bare,
Santa Klara eguzkitsu
maskorraren landare,
Aieten leihoak daude
zabalik parez-pare,
bakearen etxea da
itxaropenen zare.

*2011ko azaroaren 13an*

*204*

## Erakundearen erabakia

**– Habanera –**

1

Mende bi bortxaren menpe
saminki oihukatzeko,
bakean ez gaituztela
inoiz utzi salatzeko,
aterpe bat nahi dugula
behingoz aske bizitzeko,
gure alde jardun duten
zintzoei eskertzeko,
bost hamarkada borrokan
gatazka hau konpontzeko,
lehendabizi Francoren
zapalkuntza gainditzeko,
gero naro izateko
hitza erabakitzeko,
herri bati dagozkion
eskubideak zertzeko.

2

Ni jaio nintzen urtean
sortu zen Erakundea,
garai hura irauliko
zuen antolakundea,
lagun haiek lortu zuten
erkideen hazkundea,
egindako ekintzekin
herri honen pizkundea,
ikurrinak jarriz zuten
ondu gutarren oldea,
apaindu eliz-dorreak
halaber mendialdea,
Francok gehitu zuelako
errepresio urdea,
armak hartzeko beharraz
mintzo zen gazte taldea.

3

Armekin dira bihotzak
leku askotan zartatu,
malkoak eta tristurak
han eta hemen metatu,
bortizkeriak hamaika
errugabe du ziztatu,
Euskal Herriak ordea
ez zuen hori prestatu,
Parisek eta Madrilek
oldarra zuten hautatu,
euren handinahi ustela
gaizto hala ureztatu,
eroso dute urtetan
egoera profitatu,
txoko txikia krudelki
behin eta berriz sastatu.

4
“Armak behin betiko laga”
zentzuzko agerraldia,
herriaren alde jator
egindako mintzaldia,
entzun duzu albistea
gogoratzeko aldia,
joan zirenei diegu
eskainiko loraldia,
Amnistia ehuntzeko
egin dute deialdia,
auzolan honek behar du
blai guztion izerdia,
berben zelaia ari da
atontzen euskal ardia,
gure mendien lerrotik
eder dator zohardia.

*2011ko azaroaren 20an*

*205*

**Toulouseko tartena**

1

Toulouseko hirian
batzar orokorra,
Barcina presidente
dama gotorra,
AHT delako
guztiz suntsikorra,
eta Pirinioa
jentilen alorra,
agertu da horra
Mugitu txekorra,
kitatzeko zorra
tartekin jatorra,
zuritu dio plasta
mutur gogorra.

2

Barcinak dio dela
bortxa txantxarena,
isilduz berak zital
darabilena,
Euskal Jai zuen kolpez
hondoratu dena,
Castillo plazarena
hura hondamena,
euskara, hau pena!
nahi luke herrena,
eta ikurrena
jarrera zekena,
horrela iritsi zen
tarten orena.

3
Hiru tarta zuretzat
Yolanda Barcina,
merezi duzulako
asun sumina,
aritzen zarelako
oro erretxina,
aurkariaren kontra
eraginez mina,
agintzen gordina
zara erregina,
lehen udaltzaina
orain foruzaina,
egurra bana dezan
nahi duen haina.

4
Tartak izan daitezen
bakarrik jateko,
demokrazia garden
landu hasteko,
ondoren jardun apal
kexak entzuteko,
prest egon herriari
hitza emateko,
zentzuz ereiteko,
sosak aurrezteko,
porlana jaisteko,
Ama-Lur pozteko,
handinahia gogotik
behingoz mozteko.

*2011ko azaroaren 27an*

*206*

**Saria eman diozun arren**

1

Blanca Urgellek zintzilik dauka
irrifarra begietan,
oso atsegin izaten daki
prentsaurreko aldietan,
Sarriren kontra ilundu zaio
argi hori ninietan,
epaia txartzat jo eta gero
Euskadi sariketetan,

Euskal Herriko literatura
minez dago arantzetan.

2

Urgell gaurkoan Espainiako
esentzia irentsita,
zatar ari da Sarriri buruz
muzin samar eserita,
“gaizkile bat da”, esan du lakar
saririk gabe utzita,
epaimahaiak bestalde dio
haserreari eutsita,
“Josebak gogoa jantzi digu
saiakera idatzita”.

3
Sailburu horrek iraindu zaitu
txit demokrata delako,
eta saria kendu nahi zizun
bortitz omen zarelako,
amore eman behar izan du
net merezi duzulako,
zuk darabilzu hitza dotore
kulturaren onerako,
berak darabil makila oker
euskararen kalterako.

4
Hemen moroak lez gaudelako
behe-lainoen artean,
ikusezinak bihurtu gara
diglosiaren ostean,
euskal hizkuntza lar arrotza da
elebakarren atean,
ez dugu gura egon etxean
isilik zoko batean,
horrela bizi da amazigha
Rif lurraldeko partean.

5
Aspaldi jasan genuen arren
inperioen konkista,
aberri honen maitaleari
deritzote terrorista,
Joseba sarri izan da dir-dir
kontzientziaren tximista,
ikasi dugu elkartasuna
ez dela huts kontsumista,
askatasuna behar dugula
konpartitzeko txirrista.



6
Oskarbi behar dugu geroa
okinak beste garia,
lainorik gabe bila dezagun
nortasunaren haria,
ikus dezaten Munduan garden
euskaldunen emaria,
Blanca Urgelli erakusteko
hori da hain nabaria,
irakurleak garela uros
gure Sarriren saria.

*2011ko abenduaren 4an*

*207*

## Txindurriak bezala elkarrekin

1
Elkarrekin dabiltza
sendo txindurriak,
hori agintzen die
euren aiurriak,
gu auzolanik gabe
ohi gara urriak,
har ditzagun gurean
jator neurriak,
agor ez dakizkigun
ohiko iturriak.

2
Txindurriak bezala
gutarrak lanean,
biharko hazkurriak
biltzen oihanean,
negua izan dadin
leun haranean,
ez egoteko dar-dar
goibel aienean,
nahi dugulako bizi
elkartasunean.

3
Euskal Errepublika
dugu eratuko,
ongiroa herrian
naro hedatuko,
erreginarik ez da
hemen lodituko,
ezta gudarosterik
alfer sustatuko,
langileak xaloki
gara elkartuko.

4
Txindurririk ez dago
erreken ibian,
nekezago gerorik
herraren kabian,
ametsak ehunduta
inurritegian,
helburuak zehaztuz
batuta zubian,
aberri hau hasi da
kartsuki abian.

5
Goazen denok batera
nahiak metatuta,
txindurrien antzera
on lerrokatuta,
euskara gura dugu
sano berpiztuta,
giza eskubidea
taxuz bermatuta,
berdintasuna behingoz
lerden garatuta.



6
Pozik altxatu gara
txorien unean,
lar igarota gero
itsu ilunean,
indarra sumatu dut
txalupen barnean,
“aurrera txindurriak!”
entzun dudanean,
ostadarra ekarri
dugu arraunean.

*2011ko abenduaren 11n*

*208*

**Iraganetik etorkizunera zurekin**

1

Iraganetik nator panpoxa
oraina irabazteko,
zure ondoan biharko gauak
zirrika iragaiteko,
txolarreak lez beti prest nago
gogotsu hegan hasteko,
txorrotxioak zeuri eskainiz
maite zaitut esateko.

2

Ilusio bat saltzera nator
irrifar baten trukean,
urte dezente igaro duzu
atsegin horren eskean,
amets bat baino egia dena
ez amiltzeko nekean,
Euskal Herrian bilduko gara
eskubideen bakean.

3
Desio bat nahi dut iragarri
kantu hau baliatuta,
barra handiak hautsiko dira
amnistia indartuta,
laster zurekin izan nahi nuke
zama gaiztoa hustuta,
baso hezeak usain ditzagun
larruak besarkatuta.

4
Bertsoa dizut xuxurlatuko

etor dadin ontasuna,
ez zait gogotik inoiz lurrundu
aspaldiko maitasuna,
goiko zelaian jaun diren arren
sasia eta asuna,
mardulki zaigu gorantz haziko
bion arrosa kutuna.

5
Gatazkak txarki urrundu gaitu
sentimena zimeltzeko,
ganoraz ari gara ordea
konponketa ekartzeko,
iritsiko da egun handia
etxaldean bizitzeko,
ohe gurian goxo etzanda
marrubiak dastatzeko.

6
Injustiziak galduko dira
askatasunen garaian,
zoriona txit da garatuko
sukaldearen sabaian,
alferrik dabil adur makurra
gu izorratzeko nahian,
garden dakuskit mendiko urak
esperantzaren ibaian.

7
Etorkizuna hurbil daukagu
hitzaren laguntzarekin,
erabakiko dugu geroa
herri honen bozkarekin,
lehen bezala jardungo dugu
fin ehuntzen hariekin,
bihotz zintzoak leun janzteko
behar diren laztanekin.

8
Euskara lirain ibiliko da
jendarteko ezpainetan,
oztopo barik on babestuta
zazpi herrialdeetan.
"Eskerrik asko", esango dizut
jator egunsentietan,
zure ahotsa izan delako
eguzkia kartzeletan.

2011ko abenduaren 18an

*209*

**Gabonak zuekin ospatzen ditut**

1

Gau hotzean sentikor
bizitzen Gabonak,
zuentzat "Hator-hator"
eta zorionak,
bor-bor datoz orduko
ospakizun onak
jasotako zirriak
tonak eta tonak.

2

Urtetan nabil hola
zuekin kantuan,
horri esker zut diraut
eremu mortuan,
hor zaudete politak
hormako ortuan,
aurrean nago aratz
ziegatxo estuan.

3

Gaur dira hiru urte
zinetela batu,
arratsero zaituztet
zintzo alabatu,
asteak etengabe
ditut fin bilbatu,
zuekin kartzelatik
naiz maiz ezabatu.

4

Zuekin elkartzen naiz
apal iluntzean,
zirrara sentitzeko
sakon bihotzean,
laztan bat dut zuentzat
aldi bakoitzean,
hamaika amets eder
gero ohatzean.

5
Patioan pozarren
hamaiketakoa,
herrimina ondu da
goratuz txokoa,
zuekin ziegan dagit
Gabon Gauekoa,
arima dut gozatzen
une gogokoa.

6
Ziegan hits egon baino
zatar marmarrean,
hobe zuekin alai
Gabon Zaharrean,
ia dena joan zaigu
aurten aparrean,
atseginez zaudete
taupaden larrean.

7
Gabonak direlako
jori oroimena,
barnean deiadarka
dabil sentimena,
argazkiei beha
prestu gogamena,
zuekin egotea
zinezko nahimena.

8
Aitxa eta amatxo
ezti elkarrekin,
halaber nire baitan
dauden maiteekin,
izan zinetelako
ongia nirekin,
igaroko dut goxo
geroa zuekin.

*2011ko abenduaren 25a*

*210*

**Lagun oroimenean zabiltza**

1
Zahartu zara Lagun
joan zaizu sasoia,
lerden oroitzen zaitut
etxeko zikloia,
ibilaldian zinen
zinez lagunkoia,
nire alaitasuna
txiki erraldoia,
zu berriz laztandu da
gogoan trumoia.

2
Lagun egon zaitezke
zeure azkenetan,
Lurrek jasoko zaitu
leun besoetan,
iluntzero agertzen
zara ametsetan,
dena gogoz usaintzen
lorategietan,
ilargi betearen
gau izartsuetan.

3
Lagun zu zinen nire
kideko leiala,
ekinean grinatsu
halaber apala,
ferekatu nahi nuke
bizkarreko xala,
ikusi trostan gorputz
zuri-beltz argala,
eztitzeko barnean
dudan arrakala.

4
Lagun oro har zinen
erabat isila,
zaunka ozenik gutxi
keinu polit pila,
izadia zen zure
aginte makila,
katuak usainduta
zu lotzea zaila,
hor zindoazen txoro
eme baten bila.

5
Lagun txakur bat baino
osoki gutarra,
kanpotik zinenetik
heldu eibartarra,
Urkoko aldapetan
zinen brau indarra,
Arrate inguruan
zoritsu suharra,
auzoan zure sona
dirdirka zilarra.



6
Bikote bat mendian
txakurtxo batekin,
aisia gozatzeko
uste onarekin,
hitzordua jarrita
dute Erlorekin,
gero etzango dira
goxo Ekirekin,
zoragarri genbiltzan
Lagun elkarrekin.

*2012ko urtarrilaren 1ean*

*211*
## Espetxetik Bilbora

1
Egin dezagun bidea
espetxetik Bilbora,
ekimenak diezaguke
askatasuna lora,
irudimenak gaitzake
eraman erraz gora,
atsegina irensteko
bero zuen ondora.

2
Elkar ikusiko dugu
Bilboko karriketan,
goxo babestuko gara
gutarren bihotzetan,
Zain dago ama kantua
dilin-dalan ziegetan,
zapi zuriak ditugu
jarriko lepoetan.

3

Bilbon nahiak hauspotzeko
gara gaur iritsiko,
apustu hau kide dugu
aise irabaziko,
udaberrian goiz dira
lili denak jantziko,
une polit hori du gar
herri honek biziko.

4

Taupadekin bat eginda
doaz gure urratsak,
punpaka alai dabiltza
itxaropen aratzak,
gatazkaren eztenkadak
izan dira zorrotzak,
konponketa dakarkigu
Elkarketa maratzak.

5
Argiterien gainetik
gurekin bat izarrak,
gauza bera dio dir-dir
albotik Artizarrak,
behean egon nahi luke
iretargi zaharrak,
gozatzeko azalean
zirrararen txingarrak.

6
Itzela kinkeen sua
bisaiak hunkitzeko,
kaltetutako arimen
samina leuntzeko,
Etxeratek daramatza
kartzelak salatzeko,
senideen egoera
geroan hobetzeko.

7
Uhin bat dugu osatu
kartzela gainditzeko,
Euskal Herriko gogoak
oro zipriztintzeko,
aurrerantz doa marea
udalera heltzeko,
amnistiaren kresala
Munduan hedatzeko.

8
Bilboko ilusioa
sakon dugu sentitu,
zigorra zaigu zuekin
kartzeletan eztitu,
sagastian dira mardul
kontzientziak hozitu,
sagarraren zukua da
upelean hartzitu.

*2012ko urtarrilaren 8an*

*212*
**Ero espetxean**

1
Itxaropenik gabe
preso eta ero,
jaio behin izateko
jendartean zero,
urtetan daude zulo
hauetan bezero,
txit argi dakiela
adimena gero.

2
Burmuina irakiten
kartzela hotzean,
mamuekin borrokan
ziega tzar hitsean,
drogek dituzte laga
trokaren ertzean,
epai bidegabeek
ezerez hutsean.

3
Egunero dabiltza
zoramen honetan,
gurekin nahasita
patio grisetan,
Lurrean baino soa
dute zeruetan,
gorputzak abailduta
dautza bazterretan.

4
Psikiatriko bat da
gaur egun kartzela,
gaixoak dira hemen
kopuru itzela,
karranka doa euren
bizitza txepela,
pilulen eraginez
oraina tunela.

5
Gaixo psikiko franko
dago kartzeletan,
psikopatak ordea
daude kasernetan,
hor ari dira ero
guda koldarretan,
txiroen kontra maltzur
mila liskarretan.

6
Ospitalean daude
zoro gutxiago,
kartzelan giltzapetzen
dituzte gehiago,
estatuarentzat da
askoz merkeago,
gaixo gizajoentzat
aldiz krudelago.

7
Zoroak espetxean
ez dira osatzen,
porlanak gogor die
osasuna txartzen,
gaitz ditu diziplina
itsuak zigortzen,
bizimoldea zaie
horrela iluntzen.

8
Aukera bat nahi dute
sena zuzentzeko,
kalearen giroan
berriro sartzeko,
etxekoen zirriak
bero sentitzeko,
ekiaren izpiak
aske gozatzeko.

*2012ko urtarrilaren 15ean*

*213*

## Mezu baten harira

**– Aizak i, mutil mainontzi –**

1
Monarkak harrapariak
kulturen segalariak,
herri txikien zapaltzaileak,
mugen altxariak.
Jendarteko bizkarroiak,
harribitxien erroiak,
patroi doilorren kide fidelak
txanponen morroiak.

2
Erregea zahartuta
keriekin zatartuta,
ahul agertu da telebistan
hitzak prestatuta.
Bisaia du gorrituta,
soa berriz tristatuta,
aspaldi dabil etxekoekin
oro lotsatuta.

3
Erregea da zur ari
bihurtuta pentsalari,
ideiak biltzen irakurtzeko
bere herriari.
Izan nahi du aitzindari,
iruzurren ehiztari,
suhia baina dabil emanda
ustel diruari.

4
Hasi da jo eta sua
Gabon Gaueko mezua,
monarkiaren danbor matraka
jaiaren izua.
Entzun dezala kexua,
emateko klar pausua,
“Euskal Herriak konpondu nahi du
presoen kasua”.

5
“Eman arma hiltzaileak”
esan du armen zaleak,
militar horrek ahaztu ditu
konkisten ajeak.
Jaso ditzala bakeak
Monarka horren aleak,
eta ez bere gudarosteen
mehatxu grabeak.

6
Gurtzen ditu poliziak
bankarien maleziak,
etikan duen arren oinarri
bere justiziak.
Monarkaren gutiziak
hazten ditu gabeziak,
horren leinua mendetan dabil
puzten demasiak.

7
Errege baino liztorra,
bere eztena gaitz, borra,
gure lurrean lar mingarria
izan da zigorra,
Euskal hiztunen alorra
ia utzi du agorra,
itzul dezala jabetasuna
txoko maitekorra.

8
Esan uxatuz ikara

“Monarkia pikutara”,
bizi gaitezen basoan dauden
urtxintxen erara.
Errege barik zirrara
euskotar izango gara,
errepublika elkartzaile bat
sustraitik puntara.

*2012ko urtarrilaren 22an*

*214*
**Hamaikatik, hamabiren urtera**

1
Krakak garbitu ditugu
Hamabi agurtzeko,
Hamaikaren balentriak
garden gogoratzeko,
gauerdian jarri dugu
hitzordua batzeko,
urteroko topaketa
pozarren ospatzeko.

2
Urte zaharrak du estu
Hamabi besarkatu,
bidetik segi dezala
apal dio eskatu,
kanpaikadekin zaizkigu
zirrarak biderkatu,
Urteberrik nahi dizkigu
lokarriak askatu.

3
Urtatsek ongarritu du
euskaldunen baratza,
adimenak hozituta
laster dator urratsa,
kutsadura barik aratz
nahi dugu eguratsa,
presoek arnas dezaten
sakon Bilboko hatsa.

4
Batuko dugun uzta da

iaz ereindakoa,
lurralde honetan piztu
den udaberrikoa,
indar metaketak bete
du itsulapikoa,
itxaropenez gainezka
puztu zaigu kolkoa.

5
Oskarbi dago sabaia
urrunduta ekaitza,
erabaki gura dugu
erabilita hitza,
giro honekin hasi da
Hamabiren bizitza,
ekar diezagula jator
behar dugun emaitza.

6
Geroa nahi dugulako
zoragarri berdea,
konponduko dugu zuzen
iskanbila lerdea,
naturalki dabil aske
basoan basurdea,
halaber itsasgainean
bizi den izurdea.

7
Gerezien sasoia da
lurrin onen denbora,
aleak zuhaitzetatik
ditzakegu ahora,
ez gaitezen baina merke
adarretan lar txora,
amnistiaren lemari
diezaiogun kar ora.

8
Urteak dihoazkigu
pausa barik penetan,
aspalditik daudelako
maiteak kartzeletan,
irrifarra sustraitu da
presoen bisaietan,
argia hasi denean
Mariren mendietan.

*2012ko urtarrilaren 29an*

*215*

**Euskal preso politikoak**

1

Marlaska eta bere kideak
dantzuzkigu zirikatzen,
sugegorriak lez ari dira
edena maltzur ziztatzen,
horiek baina oker dabiltza
gure larruak hozkatzen,
irmo darraigu zintzo batuta
etorkizuna garatzen.

2

“Ez dago preso politikorik”,
esan du petral jujeak,
burua dio gogor astindu
Urte-Berriko ajeak,
egia dabil egurtu nahian
gezurren asmatzaileak,
Euskal Herria minduta daukan
gatazkaren babesleak.

3
“Argazkirik ez”, esan du zakar
Auzitegi nazionalak,
gorrotoaren erabakiak
izaten dira tamalak,
presoen alde jendez mukuru
daude karrika zabalak,
bisai duinetan daramatzate
haien irrifar apalak.

4
Epaileak du esan harroki

eragiteko sumina,
amnistiaren xedea dela
guztiz bideraezina,
gure presoek merezi dute
bihotzen ahalegina,
nahiak gehituta lortuko dugu
dirudiena ezina.

5
Ziegan dagoen lagun jatorra
ez da ustel aberastu,
ezta ere txar irabazpide
ilunen zolan nahastu,
bere gogoa dauka txokoan,
ez hori inoiz ahaztu,
zuzen konpondu nahi du liskarra
denon bizitza erraztu.

6
Politikoak dira espeak
hala zen euren borroka,
garai berria nahi dute zertu
askatu hitzari soka,
beleari bost zaio axola
gustura dabil mokoka,
ken diezagula euskal bidetik
lege gaiztoen arroka.

7
Urtarrilaren zazpia dago
presoen oroimenean,
zirrara eta ufa ugari
porlanaren barrenean,
ilusioa indartu zaigu
nabaritu dugunean,
kartzeletako giro alaia
Eki altxatu denean.

8
Gurekin behar ditugulako

euskal presoak etxera,
gau beltz batean galdu zituzten
sustrai sakonen aldera,
kemenak jaso du esperantza
kabian dugu ostera,
udaberrian gerta dadila
enararen itzulera.

*2012ko otsailaren 5ean*

*216*

## Maitasuna atseginez

**– Uso xuria errazu –**

1
Maitasuna, goxoena,
haur batek behar duena,
sentimendurik onena,
gure barnean hazten denean
zirrararik sakonena,
zuretzat eta niretzat laztan
bizitzan garrantzitsuena.

2
Negarrez zabiltzanean
ilunean ezinean,
bakarrik etsipenean,
argia duzu dudarik gabe
topatzen maitasunean,
zoragarriak dira egunak
konpartitzen dituzunean.

3
Maitatu brau aldatzeko,
gorrotoa baztertzeko,
handinahia urruntzeko,
maitez jardunda gure Ama-Lur
zerbait gehiago zaintzeko,
jarrera sano aratz horrekin
Mundu hau pixka bat ontzeko.

4
Gaua zaizu eguzkitsu,
bart oro zara hunkitu

irrikak zaitu ukitu
irrifar batek dizu buruan
sentsua ia gaizkitu,
nini berdeek esan dizute
“maitasuna duzu aurkitu”.

5
Zure xedea maitatu,
on duzulako hautatu
ez zara berriz tristatu,
gogo alaiak arin hartu du
udaberrian ostatu,
lilia gorri dago zelaian,
arduratsu duzu artatu.
6
Maitasunaren lurrean
bere usaina hurrean
zure taupaden aurrean,
hasperen eta txeren artean
zoriona gailurrean,
“itzuliko naiz”, esan diozu
xalotasunez agurrean.

7
Merezi du maitatzea
plazera txit sentitzea
elkarrekin dastatzea,
biok batera adostu dugu
kabia eraikitzea,
txantxangorriak bezain dotore
etorkizuna ehuntzea.

8
Maitasuna kartzeletan
ernatzen da ohatzetan,

beharrezko ametsetan,
espea dabil oso gustura
etzanda oroimenetan,
maite kutunak poz dakarkio
mitxoleta bat ezpainetan.

*2012 otsailaren 12an*

217
**Ama-Lurrekin hizketan**

1
Maite ditudalako
bazter oparoak,
jariatzen ditut maiz
zirraraz malkoak,
gogoan bizi dira
basoko pagoak,
itsasoak ukitzen
dituen txokoak,
maiatzeko liliak
txorien txioak.

2
Ama-Lur emankorra
zara nire taxu,
zu gabe zoriona
dabilkit lar baxu,
itzuliko ez banintz
gogora nazazu,
irakurri bertsoak
egidazu kasu,
maitatzen zaitudala
ezagut ezazu.

3
Urtaro guztietan
egun argietan,
aise nenbilen eder,
zure mendietan,
arranoak bezala
tontorren haitzetan,
soa jarrita neukan
beheko landetan,
horixe bera dagit
ziegan ametsetan.

4
Iturri, errekatxo
eta erreketan,
freskatzen nintzen sarri
sasoi beroetan,
etzanda nengoela
poz erriberetan,
ekia murgiltzen zen
ur txit gardenetan,
arrainak estaltzeko
urrez ibietan.

5
Naturan nekuskien
lerden izakiak,
oreinak, saiak edo
txindurri txikiak,
oreka du berekoi
hausten gizakiak,
zure baitan eginez
petral ebakiak,
diruak dizkigu zart
gaizkitu lokiak.


6
Zin dagizut gorputza
dudala zainduko,
horri esker geroan
garela bilduko,
ez dut nire buru hau
kartzelan galduko,
zureganako mira
ez zait ilunduko,
oi Lur! Biluzik dugu
elkar laztanduko.

*2012ko otsailaren 19an*

*218*
## **Kartzelan nire oasia zara**

1
Etzanda nago luze
oheko altzoan,
burua dut eroso
jarrita burkoan,
irudimena dabil
hizketan gogoan,
idatz diezazkizudan
bertsoak txokoan.

2
Bizitza mugatuta
kartzela txarrean,
une hitsetan nabil
ito beharrean,
arnasa on hartzeko
ziega txatxarrean,
aterpetzen naiz zure
irri ederrean.

3
Akorduan zabiltza
ametsen ontzian,
iretargia bezain
polita ortzian,
zurekin ez naiz inoiz
amildu etsian,
taupaden poza zara
eremu bitxian.

4
Maite nuen osoro
zure izaera,
nirekiko gozoro
zeneukan jarrera,
iparra zarelako
zaindari onbera,
sentitzen zaitut hurbil
bihotz alegera.

5
Alai doa negua
zeru garbiekin,
herriak dakarzkigun
albiste onekin,
udaberria dator
lore mardulekin,
egon nahi nuke goxo
zelaian zurekin.

6
Ipar-haizeak dakar
etxeko usaina,
elkar igarotako
gauminen lurrina,
hego-haizearekin
geroa oraina,
zuregana narama
leunki liraina.

7
Zu zara egunero
goiz-argi morea,
arrastiko oskorri
itzel dotorea,
aurora borealen
zerrenda berdea,
ostadar galantaren
uztaien aldea.

8
Irudi hauek ezti
dizkizut nahasi,
bertso hauen bitartez
samur helarazi,
sentimendua hola
dizut adierazi,
niretzat zarelako
kartzelan oasi.

*2012ko otsailaren 26an*

*219*

## Etxea, guztion eskubidea

**– Bertsuak jartzen naiz hasi –**

1
Etxea eskubidea,
urrun samar duzu ordea
zaildu dizute bidea,
espekulatuz du bankariak
karutzen diru lerdea,
printzatu zaio kordea
sentimendu onen aldea,
galga dezagun musdea.

2
Bankuak dira irmoak
erabat hipopotamoak
zaintzen euren solomoak,
jende xehea nahasten dute
zertzeko egitasmoak,
hartzeko kilogramoak
eskainiz urrezko gramoak
faltsu jantzita asmoak.

3
Kukuak bezain krudelak
dabiltza bankari ustelak
egozten sendi tropelak,
etxea ei da gure habia
soldatak dira motelak,
bere kostuak itzelak,
zorretan mailegu goibelak
kale gorrian ospelak.

4
Gauean amesgaiztoa
oilarrarekin brast sustoa
bortan mailegu pitoa,
txar zaizulako uzta hondatu
errekan dago artoa,
kendu dizute autoa,
baserria eta lastoa,
utzi bakarrik astoa.

5
Bankuen zarta ostera
ezin ordainduta kalera
poliziekin batera,
lukurreruen menpe zorretan
zoaz pozetik grisera,
handia zure galera
hipotekarekin leizera
gabezian bizitzera.

6
Etxe ugari hustuta
aspaldian kolorgetuta
jende barik tristatuta,
salgai dioten txartelak bistan
giltzak daude ugertuta,
udalak alokatuta
izan genitzake piztuta
beharrak txit asetuta.

7
Hona hemen gure hitzak,
nahi ditugu etxebizitzak
hostoak beste haritzak,
gaindi dezagun elkar oraina
ikusteko gero printzak,
kaltetuen begi hitsak
alai ditzala Jaurlaritzak,
babes diezaiela ditxak.

8
Bikaina etxe ostea

gozatzeko jaien tartea
edanez zurekin tea,
bukatu ziren orduko xextrak
kito banku hantustea,
hautsi genuen katea
irits zekigun ostartea,
topa dezagun maitea.

*2012ko martxoaren 4an*

*220*

**Begoñari esker onez**

1

Bego zugana nator
txintxo eskertzeko,
gurasoei buruz
gogoz mintzatzeko,
zoria izan zuten
zu ezagutzeko,
zure bihotz onbera
ezti gozatzeko.

2

Pozik elkartu gara
hura oroitzeko,
ongi egindakoa
xalo aipatzeko,
gogoa neukan Bego
zu ohoratzeko,
nire sentimendua
jator aitortzeko.

3
Urtetako zainketa
izan zen beroa,
gurasoentzat zinez
guztiz oparoa,
eskaini zenien gar
zure abaroa,
gozatu zoragarri
zahartze aroa.

4
Zure jarduna zindo

zen konpromisoa,
eurentzat zeneukan prest
arreta osoa,
langintza horrek dauka
tamal arazoa,
lar sufritzea hiltzen
denean gaixoa.

5
Eurekin lehenesten
zenuen kantua,
bazterrean utzita
penaren lantua,
ilusioa piztu
zen zure hautua,
gurasoen samina
arindu kontua.

6
Sarri sentitzen nuen
zure ontasuna,
niretzat izan zinen
maiteki laguna,
gurasoak hil ziren
joan zen oihartzuna,
hurbil zaude ordea
Begoña kutuna.

7
Gurasoen etxean
izan nintzenean,
zure babesa nuen
igarri soinean,
laztan bat eman nizun
joateko unean,
sentikorrenak bihar
aske naizenean.

8
Luzeki zaitut ziegan
gozoro agurtzen,
hola zaude amaren
sama ferekatzen,
bereziki argazki
hori dut behatzen,
bizipen eder hura
zirraraz haztatzen.

*2012ko martxoaren 11n*

*221*

**Amerikan lapurtu zuten urrea**

1
Antzinatik da urrea
zitalkerien marra,
oilanda jartzen du ero
eta bortitz oilarra,
Amerikaz jabetzeko
aitzakia kaskarra,
Munduari sarri dio
eragiten negarra.

2
Yankiek hartu zituzten
txanponak itsaspean,
Nuestra Señora Mercedes
fragataren barnean,
Espainiak galdu zuen
itsaso zabalean,
Angloen kontrako talka
Algarveko partean.

3
Oddyssey enpresak zeuzkan
jasotako txanponak,
Floridan gordeta, Carlos
laugarrenaren denak,
urpekariek trebeki
bete zituzten lanak,
Madrilek ordea dio
direla berarenak.

4
Espainiaren aldeko
izan da ebazpena,
jujeak aukeratu du
biderik okerrena,
urrea izatekotan
amerikanoena,
konkistekin gabezian
dauden indioena.

5
Txanpon horiek zituzten
Indietan ekoiztu,
bertakoak hurrupatuz
injustiziak piztu,
haien aurpegiak ziren
urrearekin histu,
han gertatu zitzaiena
ezin zuten sinistu.

6
Urrea lapurtu zuen
anker inperioak,
boterea bermatzeko
nazkante arraioak,
izerditan urtu ziren
meneko gizajoak,
aberats bizi zitezen
monarkia gaiztoak.

7
Txanpon dirdaiak sartuta
kutxa dotoreetan,
erakutsi nahi dituzte
gurtu museoetan,
kitxuak, aimarak, maiak...
darraite txaboletan,
betiko patroien menpe
kendutako lurretan.

8
Kondorea hegaldari

Andeseko zeruan,
menditarra beha dago
sentikor inguruan,
urrea baino artoa
hobesten du zoruan,
herrien elkartasuna
aleen kopuruan.

*2012ko martxoaren 17an*

*222*
## Kideak garelako

1
Kontzientziak garbiki dit
esaldia diktatu,
berehala ohar nadin
hitz apalez aitatu,
“sakon behar zenituzke
kide denak maitatu,
eskua bero luzatuz
bizipoza sustatu”.

2
Zu zinen nire mitoa
ustezko eredua,
elkar ezagutu dugu
erori zait Mundua,
izaera zakarrak dit
mindu sentimendua,
aldatu egin da goibel
nire pentsamendua.

3
Kide jator jardun, arren,
gertuko lagunekin,
ez izan jarrera txarrik
erkide fidelekin,
sarritan beharko duzu
aritu beraiekin,
ondu nahi duzuelako
herria ekintzekin.

4
Begirunez har ezazu
zure ingurukoa,
askatasunaren alde
ari den kidekoa,
musu-truk dabil zintzoki
nortasun onekoa,
bere bihotz onberak du
taupada herrikoa.

5
Ideiak eta praktikak
erabili batuta,
edonon izan itzazu
gozoro uztartuta,
iparrorratzak duen lez
iparra markatuta,
eduki ezazu beti
atsegina piztuta.

6
Gorrotoaren azpian
ez dago iraultzarik,
ezingo duzu horrela
zertu utopiarik,
jenio zitala utzi
urruti ostendurik,
izan zaitez iraultzaile
xextrak indargeturik.

7
Euskal zelaia nahi nuke
pozarren elikatu,
gure alde bizitzeko
behazuna ukatu,
gu gutarrak garelako
ozen aldarrikatu,
ezinikusia baino
hobe dela barkatu.

8
Goiz-argian hitz polit bat
akabo haserrea,
aurpegietan hasi da
zoragarri barrea,
atzean geratu zaigu
eguraldi arrea,
eguzkiak gozatu du
harremanen larrea.

*2012ko martxoaren 25ean*

*223*

**Ainarak herrira itzuliko dira**

1

Hegoak esan digu
“nirekin herrira,
itzuliko zarete
ainarak kabira”,
espeak xalo gara
batu iritzira,
entzun dugun xuxurla
onaren harira,
ziegetan harantz gaude
alaiki begira.

2

Herrira, konpontzeko
egoera basa,
ahantz dezagun behingoz
kartzela eskasa,
iheslariek goza
dezaten arnasa,
eta deportatuek
tristura demasa,
izan dadin gutarren
bizitza erraza.

3
Gogoz batzartu gara
Herrira sortzeko,
gure maite laztanak
hegan ekartzeko,
gatazkaren aldapa
aise gainditzeko,
etxekoei zama
jator arintzeko,
biharko amnistia
batera zertzeko.



4
“Herrira!” esanez da
arduraz atera,
jendarteko hamaika
bihoztun kalera,
xede bakarra denez
osoki onbera,
nonahi egin diete
arretaz harrera,
urrun daudenak etor
daitezen etxera.

5
“Herrira!”, dio amak
zapia hartuta,
beste kidekoekin
plazan elkartuta,
helburu horri esker
dago gaztetuta,
eskuen zirriekin
bero babestuta,
kantuan dagi goxo
giroak poztuta.

6
Sukaldean desirak
gabiltza egosten,
aulki hutsaren drama
gura dugu eten,
Herrira dabil zindo
hazia ereiten,
ikusiko ditugu
irrifarrak hazten,
sorlekura zoritsu
ainarak iristen.

*2012ko apirilaren 1ean*

*224*

## Anaien (arreben, ahizpen, neben) elkartasuna

**– Ikusten duzu goizean –**

1

Anaien elkartasuna
kartzelan da osasuna,
ziegan dabil oihartzuna,
pozarren diot, “Eskerrik asko”
oro dira ontasuna,
uxatzeko histasuna
dakarte alaitasuna,
behar dudan maitasuna.

2

Urteak dira metatzen
kartzelan latz kiribiltzen,
ahaztura dute zertzen,
eurak ordea nirekin daude
nekeak maitez baztertzen,
hilero naute laztantzen,
zoriona oparitzen,
xaloki ditut agurtzen.

3
Anaiak eta kideak,
elkartu gaitu oldeak,
urtetan errepideak,
ez dugulako urruntzerik nahi
batu ditugu bideak,
gure atzoko aldeak,
irauli ditu kordeak,
hurbilduz bihotz gordeak.

4
Gurasoen akordua
anaien sentimendua,
bete dute agindua,
babesten naute irrien truke
ontzeko bizimodua,
etzi dugu hitzordua,
jasoko dut ukendua,
arin joango zait gandua.

5
Zenbat gauza esateko,
oroimena ereiteko,
gerokoa marrazteko,
gogoa beti dago irrikaz
anaiekin egoteko,
berri onak entzuteko,
fin erroei eusteko,
gurasoak goresteko.

6
Bero anaien giroan
desio bat dut eroan,
gerta dadila geroan,
gaurko arnasa nahi nuke jator
itzuli txit luzaroan,
goxo euren abaroan,
nago horren esperoan,
konponketaren aroan.

7
Juezari diot esana
alferrik dela afana,
hausteko gure izana,
etorkizuna dirdai dakusat
hola dabil harremana,
zain dut Debako harana,
bihar kartzelen porlana,
anaiontzat iragana.

8
Kartzelan dugu pindarra
euskal arimen indarra,
laster dator goizabarra,
Iñigo eta Paul zoragarri
dakarkidazue garra,
moztu duzue laharra,
haz dadin aske belarra,
esperantzaren zuztarra.

*2012ko apirilaren 8an*

*225*

**Frankisten eta monarken bandera**

1

Espainiako bandera
gorri eta horia,
frankistek zioten sutsu
“merezi du loria”,
geuretzat bere itzala
izan da galzoria,
katez bete digulako
herriko historia.



2

Zutoihalak hinkatuta
monarken izenean,
Espainia zart zitzaigun
sartu etxe barnean,
bandera horrek bakea
ito zuen minean,
Munduan utzi zituen
kulturak osinean.

3
Oihalak ez dio uzten
herri honi bizitzen,
etengabe ari zaio
nortasuna xurgatzen,
betidanik ibili da
euskaldunak banatzen,
bere batasun tristea
militarki ezartzen.

4
Eibarren bandera hori
Untzagan goiz bilduta,
sozialistek kendu zuten
herriak lagunduta,
orain jarri behar dute
Madrilek aginduta,
errepublikar asko da
sentitu irainduta.

5
Azken mendean, hogeita
hamaikan zen gertatu,
jorrailaren hamahiruan
askapena sustatu,
Eibarren errepublika
bozek zuten aupatu,
Francok gerrarekin zuen
gero zital zanpatu.

6
Eibartar gehienak zeuden

errepublikarekin,
Kalamuan jator zuten
babestu fusilekin,
Eibar hautsi zutenean,
hegazkinen bonbekin,
frankistak agertu ziren
*piperpoto*arekin.

7
Gernika ikur horrekin
bortitz zuten kraskatu,
euskara debekatuta
gaiztoki ostikatu,
Espainiak beharko du
jazarpena bukatu,
geroa hauta dezagun
hitza behingoz askatu.

8
Banderarena Eibarrek
erabaki dezala,
zinegotziak dituen
aukeratzen bezala,
demokrazia omen da
herritarren ahala,
euskoak bere onurak
oro goza ditzala.

*2012ko apirilaren 15a*

*226*
**Julian eta Maria**

1
Hirurogeita hamabost urte,
Durango, Eibar, Gernika...,
goitik zetorren faxisten herra,
heriotza garrasika,
euskal sustraiak nahi gintuzketen
hola erauzi apika,
odolez busti zen lurraldea,
karranka zeruan mika,

bihotzek esan zuten minduta
"ez dadila errepika!".

2
Martik hogeita hamaika zuen,
Durango bonbardatuta,
Andra Mariko arkupe hartan
zegoela babestuta,
ezagutu ez nuen aitxitxa
hil ziguten zanpatuta,
urte gutxira hil zen amama
egoerak tristatuta,
senarra galdu zuenez gero
zebilen lar gaixotuta.

3
Faxista eta nazi ankerrek
frankistei laguntzeko,
bonbak tonaka jaurti zituzten
eraikuntzak birrintzeko,
ahalik eta euskaldun gehien
horrelaxe lurpetzeko,
Durangon zeuden gorri guztiak
koldarki ezabatzeko,
beranduago hasiko zuten
gerrarako frogatzeko.

4
Aitxitxak eta amamak zuten
batera jaso hotela,
taxiak eta gainerakoak
jarri zituzten horrela,
Eibarrek gogo jasan baitzuen
bonben eragin itzela,
Francoren gerrak euren hostoa
bihurtu zuen orbela,
apirilean eroriko zen
aitxitxa hobian zela.

5

Bilbon, Londresen, Dresden, Berlinen
bonbardaketak jarraian,
atzo Vietnamen orain edonon,
izua bonben arraian,
kapitalak du ekonomia
hazi gerren lubakian,
aitxitxak eta amamak dira
hiltzen era basatian,
bilobek bizi dezatela txit
bakea egunsentian.



6

Aitxitxa eta amama pozez
zaituztet ziegan agurtzen,
zuentzat goxo dagit kantuan
zaretena goraipatzen,
gaur hemen nabil zuen omenez
iragan hura zabaltzen,
ez ahazteko gertatu zena
oroimena elikatzen,
bertso honekin zaituztedala
sakonki maite aitortzen.

*2012ko apirilaren 22an*

*227*

## Biraoak baztertzeko ahaleginetan

**– Iparragirre abila dela –**

1

Belaunean tak, kolpe txatxar bat,
leherketa burmuinean,
odola hasi zait irakiten
bor-bor zainen barrenean,
besoak altxatuta,
erabat oldartuta,
biraoak mingainean,
hoztu nahi eta garra gorago,
panpin bat naiz ezinean.

2

Ahoak zikin du jariatzen
lerdea halakoetan,
eztarria da lehor geratzen
alferrikako zaunketan,
bisaia muturtuta,
osoro gorrituta,
une zoro kaskarretan,
jenio bizi hori nahi nuke
ito irri algaretan.

3
Estresak nauka inguratuta
bere sare ilunean,
gogoa sarri sartzen zait ergel
irainaren lur-gunean,
asunak ukituta,
sasitzan ziztatuta,
erarik mingarrienean,
baretasuna eskuratzen dut
senaren argiunean.

4

Iraintzen eta madarikatzen
nabil berrogei urtetan,
ele maitea hitz zatarrekin
mordoilotzen bazterretan,
gurasoen ohitura,
euren berben freskura,
galtzen dut biraoetan,
aratz nahi nuke nonahi mintzatu
ibili poz sustraietan.

5
Matxistak eta homofoboak
dira irain maltzurrenak,
kristauen kontra esandakoak
berriz amorratuenak,
isekak agortuta,
haserrea hustuta,
estutzen nau etsipenak,
damu horrekin ez bizitzeko
utikan birao denak.

6
Bukatu dira irain lizunak
eta iseka garratzak,
aldarte onak ditu onduko
nire berbaren baratzak,
gauez iretargitik,
egunez eguzkitik,
jasota gozoro printzak,
mintzo belatzak jantzi ditzala
nortasunaren belartzak.

*2012ko apirilaren 29an*

*228*

**Kartzelatik Iraiari**

1
“Iraia!” diot maitez
gaueko argian,
jarrita dudanean
soa ilargian,
irria marrazten zait
polit aurpegian,
agertzen zarenean
ametsen hegian.

2
Zu jaio, eta poza
sartu zen etxean,
taupadak hasi ziren
pil-pil bihotzean,
sakonki hunkitzen naiz
lili espetxean,
Domeka zoragarri
hura oroitzean.

3
Ilusioa puztu
zitzaidan zurekin,
atsegina hazi zen
ezti laztanekin,
txit txoratzen ninduzun
zure jolasekin,
egoten ginenean
biok elkarrekin.

4
Neskato bat zinela
atxilo ninduten,
gatazkak zakar ditu
hortzak erakusten,
kartzelan darrait zure
osaba izaten,
harremana gabiltza
gogotsu fin josten.

5
Zoriona bidaltzen
duzu gutunetan,
adorez landutako
orri dirdaietan,
irudikatzen zaitut
luma ezpainetan,
ibil nadin zurekin
eguzki-printzetan.

6
Irrikaz daude adi
basoan oreinak,
entzuteko errekan
kantuan laminak,
hola erakartzen nau
zure ahots minak,
doinu ederrak dizkit
uxatzen saminak.

7
Iloba baino zara
dotore Iraia,
Eibarrerantz naraman
hego alderraia,
gogoa ontzen didan
ortzadar alaia,
ziegan hegan galanki
dabilen elaia.

8
Bertsoa gozoro dit
ekarri burmuinak,
zirraraz dezan gero
dantzatu mingainak,
osabak goxo dio
altxatuz bekainak,
Iraiaren dohainak
direla bikainak.

*2012ko maiatzaren 6an*

*229*

**Ireneren izpi berdea**

**– Solferinoko itsua –**

1
Itxaropena une grisetan
amiltzen da malkoetan,
kartzela gaitza iruditzen zait
gaitzago halakoetan,
gaitzago halakoetan.

2
Ekia ziegan eta ni ezkor
oroitzapen kaskarrekin,
gandua dabil sentimenduan
pentsamendu eskasekin,
pentsamendu eskasekin.

3
Behe-lainoan naiz barneratu
ikusmena zait lausotu,
argirik gabe arrats luzean
ilunak nau lar gaixotu,
ilunak nau lar gaixotu.

4
Soinu ederrik ez da entzuten
lanbro zurixka beltzean,
zirri beroak urrun dituzu
ingurune laiotzean,
ingurune laiotzean.

5
Arima goibel, gorputza makal
atsekabearen zolan,
izpi berde bat sartu da dir-dir
nire bihotzaren salan,
nire bihotzaren salan.

6
Elkartasuna da izpiaren
jatorrizko sorgunea,
Irene dabil xalo igortzen
isildu dit aienea,
isildu dit aienea.

7
Fin eta erne, lagun xumeak
nekeak dizkit eztitzen,
horri esker hits zeuden begiak
ari zaizkit alaitzen,
ari zaizkit alaitzen.

8
Sarri etortzen zait abegitsu
irria oparitzeko,
ahots politak kantuan dagoz
nire mina gozatzeko,

nire mina gozatzeko.

9
Bere kemena pozez dakarkit
Eibarko kide hurkoak,
ederki darrai zulorik gabe
gure taupaden kroskoak,
gure taupaden kroskoak.

10
Goizaldean zait gozoro piztu
ilusioa kaskoan,
elkar ikusi dugu zoritsu
gure ametsen txokoan,
gure ametsen txokoan.

*2012ko maiatzaren 13an*

*230*

**Gorrotoaren kaioak**

1

Gorrotoak agortzen du
hitzaren iturria,
adimena berarekin
bihurtzen da urria,
eskuindarren askan dauka
ugari hazkurria,
Espainian aspaldi zen
hedatu izurria.



2

Purrustaka ari dira
faxista espainolak,
gure kontra etengabe
gezurretan petralak,
euren ideia bortitzak
direlako makalak,
darabiltzate baldarki
gorrotoaren kalak.

3
Ezkabia egin zaie
kaskamotz mengelean,
hazteria sartu enbor
adarren azalean,
gorrotoa sumin dabil
faxisten tropelean,
gotortu da ero euren
jarrera krudelean.

4
Inposaketa kaioen
oinarrizko arroka,
arrazoirik ez dutenez
dihardute orroka,
ehun dezagun batera
irriaren borroka,
joan bitez liskartiak
itsasora korroka.

5
Kaioen oihu zantarrak
bakea mesprezatzen,
euskaldunok gura dugun
geroa oztopatzen,
atsegina ari gara
lurraldean zabaltzen,
gure kantuak alai du
mehatxua uxatzen.

6
Kaio erretxinen nahia

esperantza kizkurtu,
gorrotoaren bitartez
jendartea makurtu,
prentsan eta telebistan
zatar dira muturtu,
konponketa berbak die
aurpegia zimurtu.

7
Gorrotoaren arantzan
eskuindarra eroso,
askatasuna ordea
hola dabil nekoso,
sastrakan minduta baino
hobe zelaian goxo,
udaberriko giroan
onura dugu oso.

8
Kaio bi zabortegian
zaborra lardaskatzen,
euren hobiak dabiltza
burugabe sakontzen,
herra lurperatu dugu
has gaitezke ospatzen,
txalapartarekin aro
berria iragartzen.

*2012 maiatzaren 20an*

*231*

**Kapitala behar zaitugu apala**

1
Zitala zara zu kapitala
burtsaren eraikinetan,
txar duzunean espekulatzen
aberatsen mesedetan,
zurekin hazi da gabezia
Mundu oparo honetan,
gosea kolpez hinkatu duzu
behartsuen burmuinetan.



2
Zurekin armak ekoizten ditu
Estatu handiusteak,
lurraren truke har diezaizkion
jauntxo txiro arloteak,
hatsik gabe du uzten bakea
gerrate bihozgabeak,
elkartasunak minez dakuski
erortzen bere habeak.

3
Jende dezente kaltetu duzu
handinahia asetzeko,
prestu zabiltza eskuindarrei
boterea eskaintzeko,
trafikanteak hur behar zaitu
diru beltza zuritzeko,
drogen etekin miserablea
zure baitan uztartzeko.

4
Iraganeko loria dizu
zipriztindu iruzurrak,
berekoi senak lotsagabeki
galdu ditu zure lurrak,
txerri zekenak urdaian dauzka
artadiaren ezkurrak,
patrikan lohi gure txanponak
bankari handi lapurrak.

5
Askatasuna estutzen duzu
maileguak lar puztuta,
lukurreruen saltsan zabiltza
harrapari bihurtuta,
langile finak negarra dagi
zure oinak zanpatuta,
ongi geundeke joango bazina
itzultzeko zintzotuta.

6
Urtetan zara erakargarri
bankuen meloi atala,
goikoentzat da zure mamia
behekoentzat azala,
zatoz gurekin duin eta xalo
lagata orain petrala,
luxurik gabe has zaitez apal
denon alde kapitala.

7
Dohatsu gura zaitu herriak
jendartea hobetzeko,
doilorren toki horretatik at
zoriontsu bizitzeko,
hasi gurekin jator lanean
ondasunak banatzeko,
auzolanaren tresna ederra
batera martxan jartzeko.

8
Iraultza sakon sartuko dugu
kapitalaren soinean
ibil ez dadin umea urri
emaile den larrainean,
erleak ditu loreak ontzen
goxo pausatzen denean,
lorautsa die naro zabaltzen
naturaren izenean.

*2012ko maiatzaren 27an*

*232*

**Sega dezagun armiarma-sarea**

1

Armiarmak dabiltza
txintxo izadian,
senak ditu gidatzen
txit bizialdian,
Estatuenak aldiz
lehian gizadian,
boterearen bila
guden alderdian,
izan nahi dutelako
jabeak ludian.

2

Armiarmak prest dauka
sarea gainean,
bizi gaitezen preso
uzkur aienean,
hozkaka diezaguke
min egin soinean,
trebeki bildu bere
harien barnean,
burmuina ur dakigun
beraren muinean.

3

Armiarma urtetan
dabil gu jazartzen,
kanpoko baloreak
ditu inposatzen,
euskarari dizkio
birikak estutzen,
kultura utzi nahi du
sarean usteltzen,
gure askatasuna
pozoian beratzen.

4

Armiarma dakusat
sare nahasian,
zurrupatuz herriak
bortitz ehizian,
guruina jariatzen
du ziztu bizian,
sartzeko herritarrak
harien hesian,
gal dezaten arima
txanponen sasian.

5
Parisek zein Madrilek
zuten aginduta,
amarauna ziguten
laga ehunduta,
Euskal Herria dago
hola ostenduta,
egoera honekin
gaude higuinduta,
eurengandik libreki
geundeke onduta.

6
Armiarmak maiz digu
gogoa mugatu,
euskaldun kontzientzia
maltzurki xurgatu,
elkartu garelako
diogu frogatu,
ezin duela gure
indarra galgatu,
ahal dizkiogula
sareak segatu.

*2012ko ekainaren 3an*

*233*

## Las Vegas ezarri nahi dute Europan

**– Habanera –**

1
Ekonomiaren flash bat
dakarkizuet gaurkoan,
harrituta geratu naiz
kartzelan entzundakoan,
Las Vegasko industria
nahi dutelako txokoan,
Madril eta Bartzelona

gogor dabiltza jokoan,
sinesmen osoa dute
zoriaren jaungoikoan,
pagotxa horretan naro
dena urre delakoan,
kasinoen eredua
tentel ezartzerakoan,
keriak aginduko du
garailearen kolkoan.

2

“Las Vegas laster Europan!”,
berri erabat ziurra,
hortxe dira elkartuko
Trufa eta Iruzurra,
kontsumismo jauna denez
diru jokoen ikurra,
herritarrek dute bertan
soilik jasoko egurra,
krisi gaitza gainditzeko
etorriko da lapurra,
saltzaileak horrelaxe
estali die gezurra,
porlanaren jabeari
alaitu zaio muturra,
etekinekin xanpainaz
gozatuko du zintzurra.

3

Nevadan dago Las Vegas
urmael baten kaltetan,
*gangster* batek jaso zuen
basamortuko hautsetan,
filmetan maiz dakusagu
telebista batzuetan,
jokoaren hiria da
bidaia liburuxketan,
dotorezia nagusi
hango karrika lauetan,
nonahi eraikita dauden
monumentu galantetan,
argiteriak net zaitu
txunditzen gau beroetan,
bolatxoak adarra jo
erruleta petraletan.

4
Euskal Herrian ez dut nahi
halako aisialdirik,
jende asko dabil gero
txanpon barik goibeldurik,
diru beltzak ez du inon
inguru hobeagorik,
drogak, prostituzioa
daude gotor uztarturik,
Las Vegasekin ez dago
utopia gauzatzerik,
hola beti egongo da
klase diferentziarik,
toki horretan gutxitan
entzungo duzu irririk,
jokotik urrun ordea
badugu esperantzarik.

*2012ko ekainaren 10ean*

*234*

**Zu eta bioleta**

1

Porlanak bihurtzen du
maitasuna lurrun,
zigorren eremuan
sumatzen dut urrun,
tristura bider ziega
ohi da berdin txurrun,
etxarteak dirudi
nabar eta zurrun,
oroimenak dakarkit
poza burrun-burrun.

2

Maiatzak eskaini dit
bikain ohorea,
ikusteko aurtengo
lehen landarea,
ametsetan polit da
agertu morea,
zeuri gustatzen zaizun
lore kolorea,
zoragarri zait laztan
hazi adorea.

3

Bioleta deitzen da
bihotzaren ditxa,
edertuko lioke
edonori hitza,
sakon usaintzeko dut
sentitu irritsa,
biriketan sartzeko
naturaren mitxa,
hobe dakidan hola
kartzelan bizitza.

4

Lorearen lurrina
ezin dut dastatu,
ezta ere leunki
zurtoina haztatu,
gatazkak didalako
hori ezeztatu,
bioletak pinpirin,
arduraz artatu,
gura nituzke miraz
bihar ikustatu.

5
Udaberriak dakar
mardul bioleta,
joan dakion goseki
hegan mitxeleta,
erakartzeko goxo
erleen arreta,
elkar egin dezaten
nahi beste olgeta,
zelaia egon dadin
liliez beteta.

6
Behera egingo du
arin uhaldiak,
ia ito gaituen
jazarpen handiak,
laster datozelako
kantuen aldiak,
bioletaz mukuru
nahi ditut mendiak,
zurekin gozatzeko
euskal belardiak.

*2012ko ekainaren 17an*

*235*

**Bostwana: erorketarena**

1

Juan Carlos erregeak
hautsi du mokorra,
ehiztarien bizitza
ei da gogorra,
Afrikan ziharduan
piztien alorra,
elefanteen kontra
Danba! Danba! Gorra,
orain du zigorra
lotsaren koskorra,
neurriko lorra
irainen atorra,
oilarrari erori
zaio gandorra.

2

Tronpadunen atzetik
zanpatuz oihanak,
gutiziatzen ditu
ebakortz denak,
errege izateko
sortu omen zenak,
dirua xahutzen du
alper alaenak,
entzun barik penak
piztien auhenak,
Ama-Lurrarenak
eta pobrerenak,
lurpe ditzala behingoz
afan herrenak.

3
Lehoi arrak esan du
“izorra dadila”,
itzul ez dadin berriz
gizon zurbila,
errege horrek dauka
demasa masaila,
harro samar zebilen
hiltzen pizti pila,
ez denez abila
jaisten mailaz-maila
ezkilara zaila
jausi da bipila,
on legoke joan balitz
masusten bila.

4
Krisia dela eta
hitzaldi bikaina,
loroak lez dantzatzen
daki mingaina,
eredutzat ordea
txarra da izaina,
luxua hobesten du
ahal duen haina,
atzo jaun arina
kraskatu zen baina,
orekak jakina
bota zion soina,
Botswanan baitu zarta!
hartu ordaina.

*2012ko ekainaren 19an*

*236*

## Maiatzean igaro ditugu gorriak

1
“Halako Ertzaintzarik ez!”,
dio klar aldarriak,
utz ditzatela basean
traste tzar hilgarriak,
konponketak behar ditu
ale lagungarriak,
izan daitezela behingoz
bihotz altxagarriak.

2
Gomazko pilotak ero
dituzte erabiltzen,
gerritik gora destatuz
kaskezurrak apurtzen,
bihotz-beltz hauek larruak
ari dira zauritzen,
errepresioak ditu
esperantzak zanpatzen.

3
Araban eta Bizkaian
ondorio garratzak,
zori net txarrak ordea
ditu kulpen arantzak,
zentsu onak zuzen ditzan
euskaldunen urratsak,
garbi dezala Arkaute
aro honen erratzak.

4
“Polizia zertarako?”,
galdetu du herriak,
aditu dituenean
albiste mingarriak,
kalean aspaldi ziren
ugaritu zorriak,
hola beharko ditugu
igaro maiz gorriak.

5
Gazteria izaten du
jomuga porradunak,
gazteak ei dira ere
beltzetako gehienak,
mozorrotuta dabiltza
automata ilunak,
lasaiago botatzeko
horrelaxe irainak.

6
Herria babestu baino
dihardute jipoitzen,
borrak edota pilotak
lar gaiztoki astintzen,
Ertzainak diogu baina
gaituzte gorrotatzen,
gupidagabe dabiltza
izen hori zikintzen.

7
Ertzainak boterearen
alde dira lerratzen,
horko jauntxoren afanak
dituzte defendatzen,
aberatsa dute zaintzen
langilea kolpatzen,
hilero dituen arren
zintzo zergak ordaintzen.

8
Alda dezala jarrera
izurri elgorriak,
bazter ditzala betiko
eraso laborriak,
betoz egun oskarbiak
arrats txit oskorriak,
idatz ditzagun bakean
orainaren orriak.

*2012ko uztailaren 1ean*

*237*

**1512: 500 urte**

**– Solferinoko itsua –**

1
Bostehun urte kateaturik
injustizien murruan,
Arrano Beltza indarge dago
bi Estatuen barruan,
bi Estatuen barruan.

2
Gezurra eta bortxa zirenez
“Errege Katolikoak”,
euren armadak harro zituen
kanporatu bertakoak,
kanporatu bertakoak.



3
Inperialistak bihurtu ziren
Nafarroako jabeak,
Albret etxeak lurrak utzita
galdu zituen habeak,
galdu zituen habeak.

4
Albako duke gerrazalea
sartu zen gure soinean
euskal argia berpiztuko da
belztu zuen Iruñean,
belztu zuen Iruñean.

5
Konkistarekin nafar herria
geratu zen zatituta,
geroztik usu dagigu amets
bizi garela batuta,
bizi garela batuta.

6
Erresumaren galera dabil
oroitzan ozenki deika,
beraren ordez jasoko dugu
gutarren errepublika,
gutarren errepublika.

7
Nafarroaren etorkizuna
izan dadin ortzadarra,
berde marraztu dugu ortzian
antzinakoen izarra,
antzinakoen izarra.

8
Loreak bildu gogoak ondu
urteurrena jorratu,
lurrinarekin gozatu plazak
arbaso haiek ondratu,
arbaso haiek ondratu.

9
Herri xumea kantari dabil
ahantz ez dadin triskantza,
gure omena nafar haientzat
askatasunaren dantza,
askatasunaren dantza.

10
Aro berrian kateak dira
ugertuko Nafarroan,
euskara lerden haziko zaigu
Ama-Lurraren erroan,
Ama-Lurraren erroan.

*2012ko uztailaren 8an*

*238*

**Atseginak narama zuregan**

1
Bizitza sartuko zait
laster arratsean,
aztarna bat utzi dut
urrats bakoitzean,
nigana zatoz malko
gazi ohatzean,
iraganeko garai
onak oroitzean,
arrosaren arantzak
minkor bihotzean.

2
Agortzen zaidanean
bizipoza ziegan,
leihotik aldentzen zait
esperantza hegan,
etsipena hasten da
berehala segan,
adorea urrituz
kartzelaren mugan,
atseginak ordea
narama zuregan.

3
Orri bikoa ei da
ekintzen aiztoa
zintzo samar izan naiz
halaber gaiztoa,
kartzelan ganoraz dut
ipini txertoa,
garbitzeko jarrera
zatarren sotoa,
ez nuke nahi ebaki
xarmaren hostoa.

4
Zenbat une zoritsu
hainbeste eresi,
zelaia zen onura
porlana da hesi,
denbora doan arren
kartzelan ihesi,
ez du arranguretan
galtzerik merezi,
zure irri polita
ametsen gerezi.

5
Xaloki bizi ginen
etxetxo txikian,
konpartitzen asmoak
gure besaulkian,
erori nintzenean
minez lubakian,
ezbai barik ninduzun
jaso aterkian,
zure argia dabil
nire bekokian.

6
Maitasunean dugu
espeok altxorra,
eskaintzen digu oro
pozaren alorra,
izan nahi nuke kartsu
maitale baikorra,
ezabatu burutik
amesgaitz ezkorra,
naroki ordaintzeko
zeuri gaurko zorra.

*2012ko uztailaren 15ean*

*239*

**Egiari zor diogulako**

1

Zutik jarri da gizona
bihotza zabaltzeko,
arrebaren testigantza
zirraraz azaltzeko,
"Egiari zor", esan du
zauriak sendatzeko,
Estatuek sutu zuten
gatazka gainditzeko.

2

Egia nahi dugu esan
eta zintzo idatzi,
kontakizuna garatu
lurraldean itsatsi,
eskuinak aldiz gura du
historia erantsi,
iragana lardaskatuz
oroimena ebatsi.

3

Francok barreiatu zuen
Gernikako gezurra,
Espainian da oraindik
arauzko iruzurra,
*Egiari Zor* dugu min
fundazio zuhurra,
lotsagarri utziko du
egiaren lapurra.

4

Egiarekin josten da
biktimaren izana,
pizten torturatuaren
arima erasana,
mehatxatuak lasai du
ibiliko sakana,
txokoan onduko zaigu
belztu zen harremana.

5
Terrorista berbak digu
handitzen oinazea,
biktima batzuen kontra
hauspotzen den haizea,
maltzur baztertzen gaituzte
hartuta guraizea,
jarrai dezagun pairatzen
gatazka net luzea.

6
Herrian biktimak daude
alderdi guztietan,
gatazkak eragin ditu
etxekoen kaltetan,
*Egiari Zor*rek nahi du
aitortza orbainetan,
demokrazia ezarri
herra erre muinetan.

7
Egiak garbi dezala
biktimaren izena,
eta lar sufritu duten
etxeko sendiena,
argiak ekarriko du
gogoen gozamena,
gatazkarekin joan ziren
maiteen atsedena.

8
Ñir-ñir ikusi ditugu
gauerdian izarrak,
azaletatik kenduta
irainaren laharrak,
urrun utzi eta gero
gatazkaren labarrak,
denon egiak zituen
itzali minen garrak.

*2012ko uztailaren 22an*

*240*
**Ilargia kartzelan**

1
Bero dagi ohean
gaurik motzenean,
aurten sargori dator
uda porlanean,
ilargia dotore
ametsen unean,
zirrara eragin dit
taupaden gunean.

2
Iretargi zuria
izaren barnean,
bere distira daukat
dirdirka soinean,
bizipoza hazi zait
naro garunean,
askatasuna dantzut
deika gauminean.

3
Udan galanta dugu
ilargi betea,
edertzen du osoro
gaueko tartea,
berarekin urrun dut
sentitzen katea,
gogoan zaudelako
irritsu maitea.

4
Ilbehera dakusat
polit iluntzean,
mihise txit morea
duela atzean,
Artizarra du gertu
izarren pentzean,
gure arimak dira
pozten behatzean.

5
Ilargia ortzian
ostentzen denean,
begiak ixten zaizkit
hits belztasunean,
argia bilatzen dut
ziega ilaunean,
zurekin oroitzetan
batzen naizenean.

6
Ilgorarekin sarri
dardara ugari,
kirioak ei dira
jartzen lar dantzari,
loa dio laburtzen
kezkatzen denari,
kartzelan maitearen
zain dagoenari.

7
Goizean esnatu naiz
ilargirik gabe,
orain eguzkia da
larruaren jabe,
etorriko zait gero
ia oharkabe,
bizi nahi nuke bihotz
zurekin lokabe.

8
Ilargi borobila
otsoen lur mina,
musa agortezina,
maitaleen grina,
emakume haurdunen
goiko emagina,
gatibuen desiren
izpi atsegina.

*2012ko uztailaren 29an*

*241*
**Isturizko txirula**

1
Isturitzko harpean
arimen egoitzan,
txirularen aire bat
giroaren saltsan,
suaren inguruan
klana bizi dantzan
joan zirenak dituzte
maiteki oroitzan,
gauekoak gozoro
kanpoko belartzan.

2
Txirularen soina da
zurgin borobila,
bere barnean dauka
tutu txit bipila,
Isturitzkoa ei da
hurrengoen zila,
mendetan izan ohi du
jotzaile on pila,
entzundakoan goaz
arbasoen bila.

3
Txirularen zuloak
liluraren gelak,
eskaintzen dizkigute
bikain xaramelak,
lamiak hasten dira
astintzen orbelak,
artzainak sorginduta
goratzen txapelak,
erromerian grinaz
gaude blai umelak.

4
Txoriak dagi txio
soinua txirulak,
berarekin jauzika
dantzari mardulak,
berpizten ditu arin
umore ahulak,
eztitzen doinuekin
haurraren eztulak,
zaharrak “ufa” dio,
"akabo pilulak.

5
Txirula eta txistu
alboka, dultzaina,
zerua dakusagu
zuekin urdina,
euskal kulturan dugu
zuen eragina,
geurean irabazi
duzue oraina,
zuek zarete alai
kalejiren muina.

6
Pentsamendu txatxarrak
burutik uxatu,
Isturitzen lez sena
musikan pausatu,
txirularen notekin
bertso bat osatu,
hitz xumeak horrela
kantari gozatu,
zure maitearekin
ametsak gauzatu.

*2012ko abuztuaren 5ean*

*242*

**Maitasunak atsekabea du gainditzen**

1
Zure atsekabeak
oro nau kezkatzen,
ezinegon larriak
loa dit kaltetzen,
on geundeke batera
penak konpartitzen,
urte latz hauetako
malkoak xukatzen.

2
Oztopo bihurtu da
errekan legarra,
gogoan zaizu minki
sustraitu laharra,
eskaini nahi nizuke
irrien otarra,
atseden har dezazun
pozarren bularra.

3
Zu hola zaudelako
nabil lar baldarra,
ilunago dakusat
kartzela takarra,
jarri behar diogu
etsiari marra,
piztu arrats honetan
itzali den garra.

4
Estresaren zuloan
gara maiz erortzen,
bakardadeak gaitu
orduan izutzen,
burua zaizunean
goibelki amiltzen,
hobe bakarrik baino
elkarri laguntzen.

5
Espetxean diogu
“ez etsi ez utzi,
maiteari arreta
tinko erakutsi”.
Makalaldian, arren,
goiari brau eutsi,
harremana babestu,
ez delako gutxi.

6
Bart amets bat izan dut
osoro baikorra,
hautsiko zaigu laster
kartzela gotorra,
negarren zingira da
geratu lehorra,
gozoro datorkigu
garai emankorra.

7
Maitasunak du grisa
ortzadar aldatzen,
esperantzak geroa
garden iragartzen,
maiatzean zaizkigu
bihotzak loratzen,
begiak zoragarri
dirdaiki argitzen.

8
Amaituta ekaitza
zerua oskarbi,
belztura urrunduta
sentimena garbi,
lehen ginen hamaika
orain poz gara bi,
bizitza da zurekin
niretzat marrubi.

*2012ko abuztuaren 12an*

*243*

**Txistuka independentziarantz**

1
Printze espainiarra
bart dute lehertu,
protokolorik gabe
zarataz baztertu,
palkuan gortuta da
erabat pipertu,
sona diotelako
Madrilen ugertu,
harmailetan zut dira
herri bi agertu.

2
Athletic eta Barça
ezin da ukatu,
erregearen kopa
dutela jokatu,
zaleek dute baina
egia kokatu,
“ez gara espainolak!”
kartsu oihukatu,
nahi dituztela euren
herriak askatu.

3
Ereserkia txarto
dantzu ahaldunak,
printzeak urrun ditu
monarken lagunak,
txistuka katalanak
eta euskaldunak,
puska diezazkieketen
kate tzar astunak,
partiduan gola du
sartu batasunak.

4
Athleticek txapela
ez du irabazi,
txantxaz esango nuke
galtzen dela hasi,
Barça talde handian
Mesi beti maxi,
zelaian trebe digu
zer den adierazi,
printzeak muzin baitu
gauean ikasi.

5
Calderongo emaitzak
ez du garrantzirik,
aberrien geroa
badago gerturik,
garaikurra dakusat
eder atondurik,
alde batean dauka
Senyera loturik,
Ikurriña bestean
txukun uztarturik.

6
Munduko txapelketa
azken atalean,
gu eta Katalunia
bikain finalean,
osoki zertu dugu
nahia kirolean,
herri askeen Lur min
honen magalean,
himnoekin zirraraz
gaude isilunean.

*2012ko abuztuaren 19an*

*244*

**Ereserki bat askatasunerako**

1
Ereserki bat gura dut
sufritzen dutenentzat,
gozagarri datorkigun
egun handiarentzat,
zurrumurru atsegin bat
gutarren arimentzat,
euskara maitatzen duten,
bihoztun jatorrentzat.



2
Ez dut nahi ereserkirik
arraza goratzeko,
aberri honen gizonen
balentriak gurtzeko,
musika izan dadila
Ama-Lur alaitzeko,
sentimenduz, arbasoen
altxorra ondratzeko.

3
Aizu, konposa ezazu
lur hau bezain anitza,
zure notek aise bazter
dezatela sasitza,
erestia izango da
gure ordezkaritza,
lauburu, txirula, jota,
irrintzi... eta hitza.

4
Ereserkia sano jo
jendea suspertzeko,
euskal kultura zintzoki
nonahi konpartitzeko,
bihar elkartuko gara
pozarren aditzeko,
herri askeen Mundua
kantari opatzeko.

5

Musikariak dakuskit
udaleko oholtzan,
kantariak atzean prest,
herria enparantzan,
bizi egin garelako
urtetan esperantzan,
himnoak loratuko du
ele mina belartzan.

6



Pirinioetan goxo
euskara zen sustraitu,
Kantauriko arbasoen
mingainetan hozitu,
ereserkiak dizkigu
gogoak txit hunkitu,
aske izateko nahiak
bihotz hilak bizitu.

7
Goiz-argian gozoro dut
entzun ereserkia,
soinuen nahasketa da
erabat egokia,
bereziki gustatu zait
bertsoen edukia,
asaben izana dute
dotore atxikia.

8
Ereserki bikain zara
euskaldunen hauspoa,
negarra isiltzen duen
uhinen arrapoa,
egunero duzu ontzen
mahatsaren orpoa,
leunki txukun orrazten
mendiaren lepoa.

*2012ko abuztuaren 26an*

*245*
**Barne ministro demontre baten putzak**

1
Kukuak lez nahi dizkigu
jarri bere arrautzak,
ekarri Espainiatik
herraren boz kamutsak,
ez diezagula izorra
kabia zital hutsak,
Madrilen errun ditzala
demontre horrek putzak.



2
Bozketen legea nahi du
bere alde prestatu,
bozka dezan ez duenak
lur hau inoiz maitatu,
Ministroak zuelako
hori atzo aitatu,
Espainian ero dute
eskuindarrek sustatu.

3
Kuku faltsuak gura du
iruzurra eratu,
exiliatuen ipuina
geurean bideratu,
maltzurki nahi luke hola
olatua geratu,
gatazkaren konponketa
berekoi atzeratu.

4
Basagoiti harro dabil
Madrilekin lanean,
bere bozak haz daitezen
bozketen egunean,
joan ei zirenak leudeke
zentsuaren barnean,
hira soilik dago baina
gezur horren gunean.

5
On Basagoitik dagitza
ahalegin guztiak,
bertan nagusi daitezen
antzinako piztiak,
Euskal Herrian ditugu
begiak lar bustiak,
ikusi nahi genituzke
bare argisentiak.

6
Bozka horiekin datoz
txapeloker ohi denak,
halaber funtzionario
kolono alaenak,
Francorekin zizkiguten
urratu ia senak,
orain gura dizkigute
ito itxaropenak.

7
Gudek maiz gaituztelako
hilketekin txikitu,
babesa beharrez dugu
erbestean aurkitu,
guk ditugu ordea txar
egotzita gaizkitu,
mendetan gaituztenean
zigortuta akitu.

8
Adar jotzearen kontra
gu izateko zina,
saihesteko kemen osoz
eskuindarren osina,
buka dadin erbesteko
kide minen ezina,
herrimina ez dakien
bihur ase ezina.

*2012ko irailaren 9an*

*246*

**Piztiak eta eperra**

1
Talioaren legea
zen Francoren morala,
herrak darabil delako
anker haren ezpala,
“ordain bereko ordaina”
lelo krudel petrala,
joan dadila pikutara
espiritu zitala.



2
Piztia orroka dabil
gatazken oihanean,
odola gaiztotu zaio
hirarekin soinean,
etsipena sartu nahi du
euskoen garunean,
mendekua barreiatuz
konponketen unean.

3
Etsaia larrutu nahi du
muturreko eskuinak,
gezurra eta zigorra
bere betiko tresnak,
lotsarik gabe dizkigu
ezkutatzen krimenak,
lur hau armekin hausteko
egindako faenak.

4
Gaixo bat laga nahi dute
hil arte itzalean,
senti dezan gorrotoa
saminki azalean,
bakea zailtzen dutenek
era net ustelean,
"biktimak gara", diote
militarren elean.

5
Biktima horiek dute
mingainean pozoia,
Francok gotor zerabilen
berbaldi faltsu lohia,
zikin hedatzen dabiltza
mezu guztiz sukoia,
zimel dadin gure plazan
gerezien sasoia.

6
Eperraren hegaldia
nahi dute tirokatu,
euren justizia baldar
irainez harrikatu,
arrazoirik ez dutenek
nahi gaituzte nekatu,
zorionez jator dugu
geroa harilkatu.

7
Utz dezatela kalean
sufritzen ari dena,
zoragarri bere nahia
azaltzen dabilena,
Josuk zintzoki gura du
herrian ulermena,
irrigurak susta dezan
desiren gauzapena.

8
Zabal ditzagun leihoak
elkar on ulertzeko,
eskubideak geurean
behingoz zutik jartzeko,
gorrotoa lurpetzeko,
onuran bizitzeko,
Eperrari adorea
etxean saritzeko.

*2012ko irailaren 9an*

*247*
**Atzoko meloiak**

1
Angurria helduta
halaber meloia,
iritsi da berriro
udako sasoia,
deserriko zoruan
pozak jo du goia,
itxaropenez dago
mukuru atoia,
baietz urrun geratu
kartzelen kantoia!

2
Meloi gozoak eta
angurri urtsuak,
dastatuko ditugu
fruitu mamitsuak,
laket ditut kartzelan
momentu ontsuak,
zertzen dituztelako
harreman kartsuak,
gure ohiturak dira
kaleko bertsuak.

3
Freska dezagun udan
ongi eztarria,
askatasun ezaren
sargori larria,
kidetasunak dakar
naro hazkurria,
gozagarri meloia
edo angurria,
berdin dakigun sano
hemen egarria.

4
Meloiaren atalak
artezki moztuta,
mahai borobilean
daude kokatuta,
kirola, eskulanak
bikain burututa,
urdailak hasi dira
deika gosetuta,
gaurko eguna dugu
txukun eratuta.

5
Frutarekin gorputza
goxo asetuta,
mahaia laga dugu
diz-diz garbituta,
bizipozaren maila
dabil goratuta,
herri maitagarria
bezain suspertuta,
gatazka dugulako
ia gaindituta.

6
Gogoan ditut Urko
eztabaiden gaiak,
elkartzen ginenean
jateko meloiak,
izaten genituen
sarritan ezbaiak,
asmatzeko zehazki
geroko garaiak,
zurekin dakuskidan
goizabar arraiak.

*2012ko irailaren 16an*

*248*

**Eperrak lez aske**

**– Solferinoko itsua –**

1
Kide gaixoek erabat dute
kartzelen zolan sufritzen,
esku guriak jator eskainiz
xalo ditugu laztantzen,
xalo ditugu laztantzen.



2
Bortizkeriak ertz ugari du
boterearen sasitzan,
kartzelakoa salatu nahi dut
gure Josuren laguntzan,
gure Josuren laguntzan.

3
Frankista gaitzak zikin dabiltza
lubakien lupetzean,
txorien kantak isildu dira
bakearen zuhaitzean,
bakearen zuhaitzean.

4
Madrilen dago eskuindar asko
gorrotoaren oinpean,
Josu hil arte utzi nahi dute
mendekuaren harpean,
mendekuaren harpean.

5
Josu kaltetuz fiskaltzak nahi du
aienatu esperantza,
bere onura soilik delako
injustizien triskantza,
injustizien triskantza.

6
Eperra dabil hegan kartzelan
hedatu da gose greba,
etxe maitean bere zain daude
anaia eta arreba,
anaia eta arreba.

7
Ospitalean ehunka bihotz
besoz beso elkartuta,
herrian bizi dadin gozoro
eperrak lez askatuta,
eperrak lez askatuta.

8
San Basagoitik harroxko dio
“gu gara hobeagoak”,
esaldi hori ezeztatzen du
Euskal Herriko gogoak,
Euskal Herriko gogoak.

9
Josuk apalki garbi esan du
“on dakusat aldaketa,
aurrera doa zuzen bolie
gatazkaren konponketa,
gatazkaren konponketa”.

10
Josuren hitzak eta begiak
min kartzela guztietan,
gau eta egun zirrara dabil
jori gure arimetan,
jori gure arimetan.

11
Josurentzat gaur geroa baino
orainak du garrantzia,
denok batera bete dezagun
osoro bere antsia,
osoro bere antsia.

12
Zu Josu zara eredu on bat
zu Uribetxebarria,
zurekin dator eder goizean
askatasun aldarria,
askatasun aldarria.

13
Josuk Udalaitz poz agurtu du
halaber Deba ibaia,
laket dantzuzki haurrak kantari
biharko herri alaia,
biharko herri alaia.

*2012ko irailaren 23an*

*249*
**Asaben bidea jarraitu**

1
Kontsumismoak nauka
oro limurtuta,
ohitura ergelekin
estu oratuta,
osin horretan nago
oker trabatuta,
irten nahi eta ezin
begiak histuta.

2
Txartela erretzen dut
merkatalgunetan,
txanpon hondarrak utziz
gure azoketan,
sorgor nabil galduta
horko adarretan,
aritu beharrean
sano sustraietan.

3
Berekoi bihurtu naiz
nintzena itota,
kalte horrek ia dit
ekarri porrota,
urtetan hobetsi dut
kanpoko errota,
asaben ondarea
lagata lur jota.

4
Ele mina zitzaidan
iruditzen motza,
erabiltzeko nuen
mingainean lotsa,
zentzatu gura nuke
sentimendu hotza,
anizkun izan dadin
Lurraren ahotsa.

5
Nortasuna zidan zart
Madrilek eraitsi,
Pariseko oilarrak
zentzu ona itxi,
hemengoa naizela
nahi dut erakutsi,
hortaz beharko diot
geureari eutsi.

6
Asaben niak bart dit
kemena iltzatu,
gauerdian baikor da
ohean mintzatu,
“aizu”, entzun dut leun,
“geurea altxatu,
bizitza maitekiro
zintzo probetxatu”.

7
Gogoan egoki dit
bidea prestatu,
“merezi duelako
xumea artatu,
plazetan auzolana
kartsuki sustatu,
herritarren artean
onura ziztatu.”

8
“Ukabila zabaldu
eskua luzatu,
kontsumismo hutsala
burutik haizatu,
atsegina hedatuz
burmuina laxatu,
zure ingurukoen
taupadak gozatu”.

*2012ko irailaren 30ean*

*250*

**Txango bat Eibar ingurutik**

1
Izarrak miretsita
ziegako leihotik,
txangoa hasiko dut
ohe barrenetik,
hormak igoko ditut
ametsen txokotik,
aldentzeko korrika
kartzela gorritik,
zurekin ibiltzeko
Eibar ingurutik.

2
Izadian zirraraz
gara barneratzen,
alderdi lasaietan
luzaro gordetzen,
horrela ditut gauak
laket igarotzen,
bizipen hoberenak
garden gogoratzen,
maite zaitudala dut
pozarren sentitzen.

3
Irudi bat sarritan
dakusat oroitzan,
ez zegoen lainorik
Mariren egoitzan,
zu eta biok geunden
goxo Egoarbitzan,
ikusmira ondratuz
etzanda belartzan,
gure sentimendua
hasi zen gorantzan.

4
Uztailean Elgetan
azoka jaietan,
lehen domekan dago
plaza zeruetan,
jende ugari dabil
beha postuetan,
gu hola geunden bertan
zorion bitsetan,
atsegina eskainiz
elkarri hitzetan.

5
Gereziak hartuta
ginen abiatu,
Elgeta eta Eibar
genituen batu,
oratuta genuen
bidea urratu,
ale multzo bakoitza
ezti partekatu,
harremana poliki
mardul zen loratu.



6
Esnatzen naizenean
amets ederrekin,
zure barrea dabil
amultsu nirekin,
bizi dadila sano
euskara gurekin,
Euskal Herri zaharra
Ama-Lurrarekin,
harilkatzeko aske
geroa zurekin.

*2012ko urriaren 7an*

*251*
**Sirenotsa: amesgaizto bat**

1
"Txo, behin bakarrik bizi zaitezke
Lur gazi-gozo honetan",
ozenki esan dit sirenotsak
zazpi eta laurdenetan,
horretaz bizkor ohartzen zara
urrutiko kartzeletan,
zerurik baino ez duzunean
ikusten patioetan,
gerorik ote duzun izango
zaudenean zalantzetan.

2
Kalean alai nenbilenean
urdin nekusan bizitza,
begiak dir-dir zeuden zurekin
sumatu barik ekaitza,
kartzelan aldiz lar mugatuta
bizipoza da murritza,
pentsatzen duzu hautsi zaizula
ilusioaren haitza,
ihartu eta garretan erre
esperantzaren haritza.

3
Kartzelan doa antxintxiketan
tai gabe zure denbora,
biraka zaude Lurra bezala
baina jakin barik nora,
ariman dudan neke handia
ezin dezaket kanpora,
toki honetan nabilelako
huts behera eta gora,
orain zigortzen nauen saminak
ez nazala gaitz hondora.



4
Amesgaiztoa deuseztatu zait
garai berrien haizean,
kideekin nahi dut xalo jardun
egon barik oinazean,
atsekabea baikortasunez
uzteko ezerezean,
gozatu gura nuke oraina
nahiz eta bizi leizean,
Euskal Herrira duin itzultzeko
amnistiaren goizean.

5
Txolarreak hur daude ziegatik
argia kantuz agurtzen,
kartzelan erne dira bizitzen
teilatupean gordetzen,
beren txioek sakonki naute
egunsentian hunkitzen,
zure ondoan nagoela dut
pozarren irudikatzen,
une horrek dit gogoa ontzen
askatasuna hurbiltzen.

6
Mundu nabar bat da presoena
porlanaren ezlekuan,
ziega estuak kaiolak dira
barre gutxiko zirkuan,
onura dago harresitik at
norberaren sorlekuan,
zurekin laztan elkartuko naiz
zorionaren lakuan,
biok gozoro gau izartsuan
lizar zaharren bankuan.

*2012ko urriaren 14an*

*252*

## *Non* eta *No* marroak saltzen

1
Paris eta Madrilgo
barne ministroak,
izaten dira beti
gurekin harroak,
afanetan dabiltza
saltzeko marroak,
konpondu beharrean
xextraren erroak.

2
Bortxa diote dela
soilik herriena,
eta ez estatuek
usu dagitena,
galde diezaietela
zer den gerrarena,
Lurra goibeltzen duen
gabeziarena.

3
Espainolak esan du
hitza brast hartuta,
“armak zelai batean
laga metatuta!”
Euskal Herrian gaude
erabat zurtuta,
hori zuzen delako
zertzen adostuta.

4
Sua gura duenak
dabil gezurretan,
zalantza ereintzeko
gure lurraldetan,
gaizto dio “euskoek
darraite armetan”,
gatazka luza dadin
hamaika urtetan.

5
Mingaina net pozoitsu
darabil bortitzak,
oldartu nahian dabil
liskarraren sitsak,
liliak baino ditu
hobesten sasitzak,
paira ditzagun luze
kartzela likitsak.

6
Utz gaitzala bakean
Ministro ziztrinak,
isil ditzala behingoz
berbaldi txirrinak,
esperantzak dakartza
oraingo lurrinak,
askaera ez dezan
izorra gorrinak.

7
Non edota No dio
kaskezur estuak,
burua diezaiola
zentza oinaztuak,
desager daitezela
jauntxo armatuak,
Munduan maltzur ari
diren estatuak.

8
Bizi dugun morrontza
gura dut desegin,
armarik gabe irmo
herria jaregin,
senetan utopien
beharra eragin,
elkartasuna martxan
jarri eta egin.

*2012ko urriaren 21ean*

*253*

**Ezenarro babes itzazu Gernika eta Aiete**

1

Etika eskatzen dabil
Aintzane Ezenarro,
"zuk Ezker Abertzalea
ez duzu", dio arro,
kritika askatzailean
uste du dela txarro,
ospeari dionean
eusten net olagarro.



2

Berarena da grazia
etikaren argia,
gu berriz gara hobena
ez-moralen tegia,
gure inguruan dena
dago ilunegia,
bera eguzkia denez
jiraka du egia.

3
Politikan da urrea,
gu gara beltz ikatza,
gure kontra zorrozki du
erabiltzen arkatza,
bere morala ei denez
ekinean aratza,
sarritan haserre dio
geurea dela patsa.

4
Mendekuak gidatzen du
zatar bere jarduna,
kaltetzen dihardu nahita
hautu net zentzuduna,
bidean lagundu ordez
indartuz batasuna,
lanean dabil txar dadin
gure etorkizuna.

5
Hedabideetan dabil
abantailaz jokatzen,
abaguneak dakizki
taxuz aprobetxatzen,
bere mezuak dituzte
Espainian txalotzen,
geureak auzitegian
berehala salatzen.

6
Ezenarro badakigu
bortxa dela krudela,
sentitu dugu bihotza
nahigabetzen duela,
gaitzetsiz ez duzu ixten
zaurien min itzela,
konponketak aldiz zubi
bihurtzen du tunela.

7
Aizu, guk zaindu nahi dugu
biktimen oroimena,
ahaztu barik gatazkan
lazki gertatu dena,
babes ezazu Gernikan
egin zen hitzarmena,
Aieten adostu ziren
bost puntuen lorpena.

8
Omena izan dadila
klar joan zirenentzat,
gatazkaren eraginez
sufritu dutenentzat,
zelai berri bat atontzen
ari gara haurrentzat,
ihintzak zipriztin dezan
zoriona denontzat.

*2012ko urriaren 28an*

*254*

**Olinpiadak: desirak eta kritikak**

**– Solferinoko itsua –**

1
Olinpian lez, Londres prest dago
jokoen sua pizteko,
Euskal Herriak ez du baimenik
Olinpiadan izateko,
Olinpiadan izateko.

2
Atleten nahia dominak dira
brontze, zilar eta urre,
zintzo egingo genioke guk
lehiaketa horri aurre,
lehiaketa horri aurre.

3
Estatuenak dira tamalez
oraindino Olinpiadak,
herri txikiok nahi genituzke
sentitu horko taupadak,
sentitu horko taupadak.

4
Euskal atletak lasai samar du
janzten ator aldrebesa,
hola jardunda bilakatzen da
espainola zein frantsesa,
espainola zein frantsesa.

5
Atletak eta banderak dirdai
zelaian agertu dira,
Mundua dute poz gonbidatu
Londreseko jai alaira,
Londreseko jai alaira.

6
Dotore hasi dira jokoak
angelandarren hirian,
gerrak gordinki darrai ordea
zoratu duten Sirian,
zoratu duten Sirian.

7
Kirolzaleak dena dakusa
oparo Olinpiadetan,
goseaz daude baina umeak
behartsuen besoetan,
behartsuen besoetan.

8
Jokoetako indarra nahi dut
liskarrak net baketzeko,
atleten grina eta kemena
gabeziak gainditzeko,
gabeziak gainditzeko.

9
Elkartasuna izan dadila
Olinpiadaren fruitua,
utz diezaiola izateari
diru beltzaren itua,
diru beltzaren itua.

10
Jokoak toki paregabeak
mila ele aditzeko,
kirolak beste behar direla
babestu klar eskatzeko,
babestu klar eskatzeko.

11
"Jokoak bizi eta gozatu
Mundu hau txit maitatzeko",
atleta batek ozen esan du
sen doilorrak limurtzeko,
sen doilorrak limurtzeko.

12
Jokoetako bost eraztunak
nahi ditugu herrientzat,
denok lan elkar egin dezagun
adorez utopientzat,
adorez utopientzat.

*2012ko azaroaren 4an*

*255*

**Askatasunaren Ibilaldian**

**– Juana Bixenta Olabe –**

1
Ederra izan zen udaldia,
askatasunaren ibilaldia,
aurten hogeita hamabost urte,
zenbat eurite eta elurte,
errepidean!
Aberri honek darrai bidean,
asmo zuzenak ditu oldean.

2
Lodosa hasi zen brau esnatzen,
Amurrio gogoz hankak luzatzen,
Gernikak esan zuen aurrera,
Zarautzek goazen txit alegera,
Iruñeara,
zeramatzaten pozik bertara,
ikurrin minak herritik hara.

3
Irrintzi eta kantu goriak,
abiatu ziren ibiltariak,
Ebro aldetik haranetara,
itsasaldetik mendietara,
herriak batzen,
diktaduraren izotza urtzen,
hartu-emanak xaloki zertzen.

4
Zutabe denak bat urratsetan,

esperantzak pizten enparantzetan,
Euskal Herria fin ehuntzeko,
ilusioak on garatzeko,
xedearekin,
ez bizitzeko torturarekin,
Estatu gaitzen kate latzekin.

5

Amnistia zen ozen eskatu,
euskara zuten klar aldarrikatu,
burujabetza euskal lurrentzat,
eta onura langileentzat,
adostasuna,
lurperatzeko aro iluna,
Francoren lorratz sakon lizuna.

6

Arazurin zen martxa bukatu,
Iruñean sartu zuten ukatu,
lau zutabeak ziren elkartu,
bihotz taupadak laño uztartu,
etorkizuna,
Monzonen berben mezu senduna,
“batasuna da behar duguna”.

7
Ibilaldian gaur orduan lez,
geraturik gabe darraigu oinez,
zazpi lurralde amets berbera,
hautatu dugu jardun batera,
zipriztintzeko,
gure soroan senak ontzeko,
konponketaren uzta lortzeko.

8
Askapen bide honek du naro,
indar metaketa sendo abaro,
Arbolan dago mardul nahimena,
Gernikan egin zen hitzarmena,
beharrezkoa,
gerta ez dadin Txibertakoa,
izan gaitezen, alajainkoa!

*2012ko azaroaren 11n*

*256*

**Marik lagun gaitzala**

1
"Katerik gabe bizi
nahiak garatzeko,
euskara mingainetan
laño laztantzeko,
auzolana suspertu
arimak ontzeko,
Ama-Lurra natural
aratz gordetzeko,
haur alaien hezkuntza
sano burutzeko".

2
Anboton goiztirian
Mariren izpiak,
xede zoragarrien
islada txipiak,
haitzetatik igortzen
ditu terapiak,
Arbola ez dezan jan
faxisten pipiak,
euts diezaion irmoki
goiari azpiak.

3
Anbotoko Damak klar
digu iragartzen,
ari direla garai
ilunak argitzen,
konponketa doala
sakonki sustraitzen,
halaber askapena
ortzmugan ernatzen,
sasitza hasi dela
bidea bihurtzen.

4
Zeruan idatzi du
"independentzia",
ikus dezagun garbi
bere garrantzia,
Damak grinaz darabil
beraren antsia,
gogoetan ezarriz
euskal kontzientzia,
Munduak adi dezan
gure irrintzia.

5
Mariren babesean
poliki eraiki,
aberri hau zuzenki
lubakitik jaiki,
gazta bat hartu eta
artezki ebaki,
zatiak banatzea
zentzuz erabaki,
herri honek onura
konpartitzen daki.



6
Burujabetza lortu
herrien beharra,
osasuntsu haz dadin
zelaian belarra,
Marik beteko digu
asmoen pegarra,
eskubideak dezan
busti lur iharra,
entzun dezagun aske
goizean oilarra.

*2012ko azaroaren 18an*

*257*

**Euskara goseaz dago**

1
Euskararen genozidak
dakuskigu txalotzen,
gobernuen hautuekin
txapliguak botatzen,
Paris eta Madril daude
turutak ozen jotzen,
aspaldi hasi zutena
dakusate gauzatzen.

2
Gaztelaniak ase du
zezen jatun lodia,
halaber frantsesak bere
oilar harro handia,
euskarak dauka ordea
itxita belardia,
balaka dago goseaz
bazka barik ardia.

3
Iruñeak partzial du
sosen poltsa banatzen,
ero dabil barra-barra
porlanean xahutzen,
euskara berriz dihardu
gorrotoan itotzen,
Nafarroari zauria
ari zaio zornatzen.

4
Baionan hitz polit asko
baina mamirik gabe,
euskara legetik kanpo
ez da ezeren jabe,
apurrekin makalduta,
dabil uzkur herabe,
goiari sendo eusteko
behar du mila habe.

5
Gasteizek diru sariak
aurten ditu gutxitu,
krisia dela eta du
euskara bihurritu,
tren txarrari aldi dio
abiada bizitu,
hola gure nortasuna
ezin zaigu hozitu.

6
Euskara ongarri barik
ia zaigu zimeldu,
euskal kultura biluzik
erabat da moteldu,
hau dena ezagututa
ezin gara epeldu,
zintzo behar genioke
euskalgintzari heldu.

7
Ele zaharra txokoan
bizi ez dadin urri,
pozarren mintzatu, entzun
edota irakurri,
beretzat izan dadila
gure nahia iturri,
ur gardenak lurraldea
kantari dezan kurri.

8
Kalamuan esan sano
“maite zaitut euskara”,
bihotzean gozo duzu
sentituko zirrara,
garbitu dirdai horrela
belztu zaizun ganbara
osasuna itzul dadin
hizkuntzaren baitara.

*2012ko azaroaren 25ean*

*258*
**Xorroxin elkar ikusiko dugu**

1
Lamia dirdai dator
ametsen mugatik,
Xorroxin laket zaio
koskortu zenetik,
uretan dabil kantuz
etorri denetik,
esnatu naizenean
esan dit gertutik,
bihar itzuliko naiz
Iñarbil aldetik.

2
Erratzun da Xorroxin
aratz ur-jauzia,
baitatik kentzen zidan
belzturen hesia,
turrustak inguruan
du dotorezia,
liluragarria den
natura bizia,
Baztango haranaren
xarma berezia.

3
Gorostapalok bikain
zaindu du altxorra,
goza dezagun oro
txoko maitekorra,
aizu ez utzi bertan
etxeko zaborra,
Xorroxinekin izan
mesedez jatorra,
bilaka ez dakigun
mardula galkorra.

4
Gerizpean dago zain
Xorroxin gordeta,
irabazteko soinuz
bihotzen arreta,
arrokatik nioen
uros gogoeta,
"Ama-Lur hau bai dela
nahi dudan olgeta,
arimak behar zuen
zorion pusketa!".

5
Xorroxin blai nengoen
zure barrenean,
txipristinak dastatzen
gozoro soinean,
aparrez janzten zinen
zerrenden gunean,
errekatxoa goitik
amiltzen zenean,
gaztainondoak zeuden
so leku minean.



6
Jentilek izendatu
zintuzten Xorroxin.
Baztanzubi erreka
gardenaren osin,
grinaz nago larrua
diezadazun losin,
urrun nagoelako
gura eta ezin,
agertuko naizela
dagit errime zin.

*2012ko abenduaren 2an*

*259*
**Didierren oparia**

1
Argazki bat hartu dut
zeuri eskaintzeko,
zur baten azalean
bikain islatzeko,
preso bati esango
diot margotzeko,
atzoko atsegina
naro gozatzeko.

2
Pintura bat zuretzat
alai behatzeko,
tristura mingarria
goxo gainditzeko,
antzinako bizitza
garden oroitzeko,
geroa zain dugula
sakon sentitzeko.

3
Pintzela oholera
etengabe doa,
Didierren eskuak du
margotu hondoa,
kemenez aritu da
bere lan ildoa,
lanabesik onena
ideien saldoa.

4
Artista honek bizkor
darabil pintzela,
maiz dio “maisu on bat
izan da kartzela”,
miraz esaten diot
oso trebe dela,
tailerra bihurtu du
txukun arte-gela.

5
Maisutasunez dabil
langintza egiten,
pintura ezberdinak
paletan nahasten,
arduratsu ari da
ohola marrazten,
koloreekin digu
plazera ematen.

6
Pinturak ari dira
eder forma hartzen,
arbasoen magia
dakusat osatzen,
orain aldiro zaitut
pozarren agurtzen,
Didieri jator diot
txaloka eskertzen.

7
Agertzen garelako
polit oholean,
onurak laztandu nau
gorri masailean,
nire aurrean zaude
dir-dir itzalean,
hor nonbait lortutako
ekai apalean.

8
Zoritsu bidali dut
maite, miraria,
musu-truk egindako
artelan loria,
zirraraz gurutzatu
duzu ataria,
dastatzeko liluraz
gure oparia.

*2012ko abenduaren 9an*

*260*
**Kontxako estropadetan**

1
Maitea penaz dizut
gutunean esan,
Donostian urtetan
ez garela izan,
minkor gintuenetik
gatazkak erasan,
adorez dut zigorra
espetxean jasan,
zurekin ibiltzeko
oroimenen plazan.

2
Estropadak nituen
ikusi zurekin,
Urgullen eserita
jende askorekin,
badia girotu zen
denon txaloekin,
arraunlari mardulen
boga bikainekin,
bizinahia zebilen
grinatsu gurekin.

3
Eguzkiak zizkigun
laztandu larruak,
zirrararen kilimak
gozatu barruak,
kolorez jantzi ziren
Urguleko murruak,
itsasoak zituen
isildu marruak,
jaiak zizkiolako
leundu kirruak.

4
Zaleak bildu ziren
pozarren portuan,
bihotzak eskaintzeko
aldapa estuan,
banderak kar astinduz
ozenki kantuan,
arraunlariek duten
merezi moduan,
halako harrerarik
ez dago Munduan.

5
Jarduna bukatuta
itsasbazterrean,
gogotsu sartu ginen
Alde Zaharrean,
txarangak genituen
topatu aurrean,
zoragarriro geunden
hiri ederrean,
sagardoa edaten
tabernen larrean.



6
Arraunak irailean
igande bi ditu,
euren ospea ez da
sekulaz urritu,
Kontxako estropadak
joan eta hunkitu,
herri sano batekin
jator konpartitu,
zurekin nahi nituzke
berriro sentitu.

*2012ko abenduaren* 16an

*261*

## Hordago kartzelari

1
Kartzelan mus jokoa
dago sustraituta,
abian jartzen dugu
lau kide batuta,
partidak etxartean
bikain jokatuta,
herrimina geratzen
zaigu gozatuta.

2
Gure artean leial
dagigu musean,
atsegina hedatuz
jori oinazean,
uda onean edo
negu eskasean,
jokoan ari gara
eta jolasean.

3
Musean dirdai dira
begiak argitzen,
saltsa goxo hau dugu
kartzelan eskertzen,
hor dago amnistia
sano dut aipatzen,
hamarrekoak ari
garenean biltzen.

4
Muslari hoberenak
dira berritsuak,
sekula ez direnak
izaten sutsuak,
pozten gaituzte beren
irriño dontsuak,
ontzen dituztelako
gogo goibeltsuak.

5
Mus entzun eta duzu
begi bat kliskatu,
hogei harri dituzu
handira jokatu,
kideak duen arren
kopeta xukatu,
aurkariak dituzu
maisuki pikatu.

6
Musean enbidoka
pozarren euskoa,
bere nortasuna da
trinko herrikoa,
ezti hunkitzen zaio
mahaian kolkoa,
euskarak duelako
zuzentzen jokoa.

7
Hordago entzun dugu
alboko mahaian,
jokoa zertu dute
gaur ziztu bizian,
zorionez geroa
ez dago zorian,
baizik eta hazten den
hasi goiztirian.

8
Musean egin dugu
jator apustua,
harri barik uzteko
kartzela mortua,
hogeita hamaika da
eskutik hautua,
zuekin loratzeko
asaben ortua.

*2012ko abenduaren 23an*

*262*

**Gaztetxo zorigabe bat kartzelan**

1
Zorigabe Uharte
Zoriontsuetan,
etxe ugari dago
hango auzoetan,
gurasoen tristura
itzel arratsetan,
gazteak daudelako
eskas kartzeletan,
droga sartu zelako
euren karriketan.

2
Gerorik ez duenak
zahartxo dit deitzen,
gaztetxoak hala nau
goizero agurtzen,
adimen urriak du
tamal hondoratzen,
bizitza doakio
kartzelan higatzen,
sasoirik hoberena
poliki zimeltzen.

3
Urduri hartu zuen
lehen arnasketa,
haurtzaroan olgeta
izan zen hausketa,
gero zaintza-zentroan,
egurra, hezketa,
handik at drogen menpe
zenbait lapurreta,
kartzelan jota dabil
burua erreta.

4
Sutsu ari delako
hutsen alabantzan,
etxartean utzi du
ospea zalantzan,
beharrak asetzeko
dihardu arrantzan,
kideak gatozkio
oraingoz laguntzan,
zerak diezaiola jar
sena hobekuntzan.

5
Munduan bakarrik du
ezagutu satsa,
ariman dauka horren
arrasto mikatza,
aldarte lokak dio
ziztatzen orratza,
leher dakion sumin
izaera latza,
senti dezala naro
onuraren hatsa.



6
Ekidin ez zuenez
xextren zirimola,
urrun geratu zaio
Las Palmasko zola,
herrira itzultzeko
darabil kirola,
berdin on datorkion
jakintzen eskola,
goza dezala laster
etxekoen ola.

*2012ko abenduaren 30ean*

*263*
**Eibar etengabe gogoan**

1
Bare itzuliko naiz
zirrien urtean,
gorrotoa lagata
murruen ostean,
apal bizi nahi nuke
hara iristean,
Olarreaga eta
Azitain artean,
Arratek zaintzen duen
lurralde maitean.

2
Eibar gogoratzean
grinaz iluntzean,
herrimina puzten zait
aise bihotzean,
trabatu nintzenetik
tamal espetxean,
irudi bat dakusat
desiren pentzean,
Arraten nagoela
goiza urratzean.

3
Bapo hazi nintzenez
Eibarko arroan,
bere falta samin dut
taupaden soroan,
mendiak zein bailarak
dabiltza gogoan,
giltzatzen nautenean
ziega ñimiñoan,
gozatu nahi nituzke
xaloki geroan.

4
Askatasuna dator
nitaz maiz galdetzen,
Eibar zait berehala
aurrean agertzen,
azti bat lez hasten naiz
orduan portatzen,
han libre naizenean
zer egin asmatzen,
halako oldozketek
naute kilikatzen.

5
Maltzatik sartuko naiz
neure sorlekuan,
soa urtsu finkatuz
hango inguruan,
oinez egin nahi nuke
gaztetan moduan,
iturritik xorta bat
edan Urkusuan,
Untzagan izateko
sano hitzorduan.



6
Berriz igaroko naiz
Bidebarrietatik,
gurasoek maitatu
ninduten etxetik,
Untzagan elkartzeko
Kalbetoi aldetik,
topa egingo dugu
amnistiagatik,
sakonki hunkituta
joan zirenengatik.

*2013ko urtarrilaren 6an*

*264*
## Hamabi urte igaro direla eta

1
Hamabi urte hainbeste aje
hormatzar hauen barnean,
sasoi loriak geratu ziren
dilindan iraganean,
kurrilo aldrak urrian dira
igaro hega betean,
hantxe ikusi nahi genituzke
gure sorterri maitean.

2
Kartzelan dago gabezi asko,
arima beste mintzeko,
tarte luze bat izan dut bertan
horretaz konturatzeko,
preso ugari eskean dabil
eta gu prest emateko,
zuei esker zerbait dagigu
lur hau pixka bat pozteko.

3
Halabeharrez zahartuko naiz
tristuraren eremuan,
zimurrak nonahi agertu dira
aurpegiaren larruan,
ile urriak aspaldi ziren
zuritu neure buruan,
bihotz gazteak darrai ordea
punpaka bere lekuan.

4

Kartzela zahar gorri honek du
zeru lauki bat gainean,
goizero muzin begiratzen dut
iratzartzen naizenean,
azken bolada honetan baina
barre dagit etxartean,
egun handia zain dugulako
konponketaren ostean.

5
Hamabi urte baino gehiago
egongo naiz itzalpean,
gatazka sutan behar dutenen
guda-zaleen menpean,
ilusio bat goxo bizi dut
ohean nagoenean,
kantuan aske ari garela
euskaldunen larrainean.

6
Hamabi ordu behar dituzu
honetaraino heltzeko,
eta berrogei minutu soilik
gurekin laño biltzeko,
maiz izan dugu hemen aukera
elkarrekin mintzatzeko,
zu zara leial elkartasuna
kate astunak urtzeko.

7
Orain arte lez lagun nazala
zuen taupaden kemenak,
Ama-Lurrekin goza ditzadan
zorioneko egunak,
sentitu gura ditut mendiak
sakon arnastu haranak,
entzun errekak txoriak eta
itsasoaren uhinak.

8

Beste urte bat joan zaigu arren
Aiete da esperantza,
hautu on horrek tinko dezala
jaso denon alabantza,
nire desirak daude laztana
sendo lotuta harantza,
Euskal Herrian hasi delako
askatasunaren dantza.

*2013ko urtarrilaren 13an*

*265*

**Izan zaitez amuarrain**

1

Nire izena euskaraz
Amuarrain da baiki,
Bidasoan bizi nintzen
Elizondon lasaiki,
geure ibai aratzean
igerian galaiki,
"euskalduna naiz", nioen
egunero alaiki.

2

Erriberan hasi nintzen
Mundua ezagutzen,
ahaltsuak egin ziren
hizkuntza bi aditzen,
boterea zirelako
ninduten erakartzen,
ohartzeke joan zitzaidan
nortasuna kraskatzen.

3
Behin batean jauntxo batzuk
hasi ziren arrantzan,
arrainak erne geunden kosk
egiteko zalantzan,
haiek gu limurtu nahian
gozo samar zebiltzan,
etorkizuna txartzeko
arriskuan genbiltzan.

4
Beitari kosk egin nion
lilurak nahastuta,
amuak mindu ninduen
sustraiak baztertuta,
otar baten egin nuen
bidaia sorgortuta,
Madrilen edo Parisen
aurkitzen naiz histuta.

5
Ibai honetan zorigaitz
erdaraz naiz esnatzen,
ele joria tamalez
ia ez dut oroitzen,
zozo jardun nuelako
bihotza zait uzkurtzen,
egun hartako hautua
maiz dut madarikatzen.

6
Manzanares edota Seine
mingarri dut sufritzen,
sentimenak Bidasoa
grinaz du desiratzen,
oinez joango nintzateke
baina ez naiz moldatzen,
baztandar batek nazala
jaso dut erregutzen.

7
Oi! Nafarroako Baztan
behar zaitut harana,
uneoro gogoa da
abiatzen zugana,
ezkatatik ordaindu dut
okerreko afana,
ontzat hartu nuelako
hantusteen esana.

8
Txinguditik Baztanera
Elizondo aldera,
zoriontsu itzuli naiz
sorlekura ostera,
xume heldu naizelako
berriz bere urera,
zoragarria izan da
Bidasoaren txera.

*2013ko urtarrilaren 20an*

*266*
**Berriro "kaixo" esan nahi nizuke**

1
Herkide, neure soa nahi nuke
bare, zeurean pausatu,
ariman dugun zauri sakona
zintzoki hola gozatu,
herra zitala behar genuke
gure artetik uxatu,
hainbeste laido madarikatu
gizatasunez bezatu.

2
Injustiziak ezarri zuen
bion artean sakana,
zure egiak eta neureak
urrun zuten elkarlana,
ezin zelako bozen bitartez
altxatu euskoen kana,
gatazkarekin hondoratu zen
antzinako harremana.

3
Aurrez-aurre maiz suertatu ginen
pankarta ezberdinekin,
nabaria zen han tentsioa
begirada beltz haiekin,
hur egon arren urruti geunden
harrera gogor harekin,
hantxe zegoen talde bakoitza
haserre bestearekin.

4
Auzo maitean nahita dagigu
guk ezikusiarena,
espaloia da lekuko hotz bat
gure gorrotoarena,
jada ordaindu dugulako lar
garesti gatazkarena,
"kaixo" esan nahi nizuke adei
aldatzeko gaur garena.

5
Zenbat triskantza eta dolu
demokrazia zertzeko,
Estatuek zart kendu zutena
berriro eskuratzeko,
malkorik gabe nahi dugulako
aritu nahiak lortzeko,
etsaiak baino izan gaitezen
kideak lur hau ontzeko.

6
Erakundea sartu zenetik
Aieteko bideetan,
zure taldeak ez du asmorik
agertzeko karriketan,
guk amnistia nahi dugulako,
txoko hau jarri pozetan,
bihotz-bihotzez zutik darraigu
presoen alde plazetan.

7
Esperantzaren haize leunaz
zentza dezagun burmuina,
lubaki barik bizi gaitezen
on gaindituta samina,
gure hitzaren erabakiak
isil dezala iraina,
amai dakigun urtetan dugun
sentitzen egonezina.

8
Euskal Herriak sendatuko du
sano ezinikusia,
guztiak gara eta garaile
konponduta luizia,
keinu baikorrez eraldatuta
mutur muzin itsusia,
ereingo dugu egun handiko
loraldiaren hazia.

*2013ko urtarrilaren 26an*

*267*
**Urtarrilak 12: Herriraren aterkia**

1
Zoragarria zara
zu elkartasuna,
erauntsia kemenez
gainditu duzuna,
sarri dakarkiguzu
zure ontasuna,
espetxean diguzu
hustu behazuna.

2
Bilbon denboralea,
euria soinetan,
aterki bat ikur bat
denon gogoetan,
herri maitea dabil
tinko karriketan,
samurki espe gauden
euskal bihotzetan.

3
Aterkien gainetik
beltzuri zerua,
azpian dir-dir sua
kinkeen pausua,
klar entzun da eurian
desiren oihua,
amnistiaren alde
arimen kantua.

4
Aterkiekin dute
osatu multzoa
animoa behera
baino, gora doa,
euria zarra-zarra
uzta oparoa,
udaberrian dugu
jasoko anoa.

5
Zeuen aterkiekin
gaude babestuta,
ilusioa dugu
gori suspertuta,
orain aurkitzen gara
ziegetan poztuta,
gaurko irudiekin
zirraraz puztuta.

6
Euri jasa izan da
zinez eromena,
kolosala ordea
zuen ahalmena,
bikain aldarrikatu
duzue nahimena,
aterkiak hartuta
gure askamena.

7
Herkide ez onartu
arren, mendekurik,
ezin da euskaldunik
egon gatiburik,
euri barik ez dago
iturrian urik,
ezta krudelkeriaz
taxuzko bakerik.

8
Faxistari gaur zaio
muturra okertu,
Bilbokoa, Madrildik
ezin du ulertu,
ekaitzak ez duenez
asmoa ugertu,
Herrirari zaizkio
begiak edertu.

*2013ko otsailaren 3an*

*268*
**Wert: irain bat**

1
Francok irmo aginduta
diktaduraren zolan,
espainiartu gintuzten
ipuinekin eskolan,
nahitaez sartu ninduten
lilura horren salan,
euskal sena galdu nuen
gezurren arrakalan.

2
Francok defendatu zuen
ama gaixoa zorrotz,
Espainia zen geurea,
Euskadi berriz arrotz,
euskara ezinbestean
geratu zitzaidan motz,
nire bihotza horrela
zegoen huts eta hotz.

3
Gaztelera indartu zen
euskara ukatuta,
han ez nekien zer nintzen
nengoen nahastuta,
euskal kultura zegoen
zirtzil zokoratuta,
nortasuna neukan zikin
faxistek kutsatuta.

4
Godoen zerrenda nuen
buruz azkar ikasi,
konkista odoltsuekin
Gaztela zela hazi,
Austriak eta Borboiak
antzinan ziren gazi,
Espainiatik at dena
omen zen eskas sasi.

5

Halako batean nintzen
lozorrotik esnatu,
herri zanpatuan nuen
egoera usnatu,
faxisten ideia gaitzak
nituen aienatu,
“jator bizi zaitez”, zidan
zentzu onak manatu.

6

Wertek gura du berriro
giro hura kokatu,
Espainiaren loriaz
umeak kitzikatu,
liburuekin nahi luke
euskara porrokatu,
euskaldunen historia
zitalki lardaskatu.

7

Wertek monarken bizitzak
nahi ditu irakatsi,
haurren burmuinetan haien
balentriak itsatsi,
hemengo curriculuma
nahi luke zart eraitsi,
Espainia letra larriz
eskoletan idatzi.

8

Demokrazia urruti
dago Espainiatik,
itsasotik hel dadila
edo mendietatik,
ken diezaizkiola Werti
giltzak eskuetatik,
askapena etor dadin
euskal eskoletatik.

*2013ko otsailaren 10ean*

*269*

**Arratoi aseezinen kontra**

1
Arratoiaren bizitza
izaten da zikina,
estoldak lagatzen dio
ilajea likina,
aldiro zorrozten dabil
ebakortzak ziztrina,
lukurreriaren bidez
zabaltzeko samina.

2
Arratoi samaldak daude
bankuen zokoetan,
dirua irensten dute
herritarren kaltetan,
karraskariak dabiltza
trebeki hodietan,
etekinak biltzen bere
kastaren mesedetan.

3
Kasernetan gizen daude
arratoi krudelenak,
bankuen zaleak dira
militar alaenak,
euren gastuak direnez
erruz potoloenak,
gure beharrak dituzte
uzten txatxar herrenak.

4

Arratoi beldurgarriak
azkar dira ugaltzen,
herri txiroak dituzte
gabezian argaltzen,
onura ekarri baino
lurra diete hartzen,
horrela da horrenbeste
ume gosez ihartzen.

5
Izurrite hau nahi dugu
ezabatu lurretik,
elkartasuna ezarri
arratoien gainetik,
sustrai txarrak ken ditzagun
euskaldun baratzetik,
esperantza jaiki dadin
mendien gailurretik.

6
Arratoien helburua
euren apetak zertu,
nahiz eta ongizatea
hola tamal okertu,
pizti txar hauekin gara
jendartean aspertu,
bankuan tranpak ditugu
txokoan utzi gertu.

7
Zulotik ari gatzaie
isilean kirika,
gaztak hozkatu dituzte
hor dautza intzirika,
arratoiak erorita
hasi gara zirrika,
etorkizun oparo bat
dugulako irrika.

8

Xumeak izan daitezen
bankari erraldoiak,
ekonomiatik bota
ditzagun arratoiak,
Mundua ontzeko behar
ditugu herrikoiak,
ur gardenak garbi ditzan
iruzurtien lohiak.

*2013ko otsailaren 17an*

*270*
**Euskal preso baten desirak**

1
Ongi-etorri dugu
entzungo geroan,
arimak daudelako
horren esperoan,
urruti gaudelako
espe luzaroan,
sentipena daukagu
hantxe abaroan,
maitasunak gaitzala
herrira eroan.

2
Ama-Lur gura dugu
estu besarkatu,
desira hori noizbait
gozoro galkatu,
bortxak zigun tamalez
plazera ukatu,
hormatzarren barruan
bihotza kraskatu,
naturan nahi genuke
poza elikatu.

3
Diglosia nahi dugu
kartzelan giltzatu,
askapen egunean
atean iltzatu,
kideok nahi genuke
euskaraz pentsatu,
edonon barra-barra
xaloki mintzatu,
urtetan izandako
tristura ontsatu.

4
Joan zirenak ditugu
maitez ondratuko,
gutarrak direlako
jator oroituko,
atera bezain azkar
gara hunkituko,
espetxeak ez ditu
senak izoztuko,
gure zelaian dira
mardul loratuko.

5
Arau zuzenak behar
dira legedian,
gatazka gera dadin
ezdeus txaradian,
espetxeak utzita
hitzaren aldian,
biziko gara laket
zuen lagundian,
Haritzak zaintzen duen
asaben ludian.



6
Aturri eta Ebro
alai agurtuta,
enparantzetan gaude
zirraraz batuta,
gazte sentimentalen
txerak sentituta,
herritarren lurrina
sakon arnastuta,
kartzelako samina
dugu sendatuta.

*2013ko otsailaren 24an*

*271*
**Teknologia berriak kartzelan**

1
Gutenberg galaxiatik,
klik, web unibertsora,
liburuaren garaitik
Interneterakora,
lekutan geratuko da
bolalumen denbora,
saguak ez diezagula
idazketa hondora.

2
Kartzelan geratu gara
ezjakin kamustuta,
teknologia berriak
dauzkagu mugatuta,
ikasketetako daude
halatsu onartuta,
Internet, Twitter... ordea
zorrotz debekatuta.

3

Internet eduki nahi dut
jakintza hobetzeko,
konputagailu bat piztu
ametsak askatzeko,
gailu hauek behar ditut
bidean ez galtzeko,
bihar zuen lagundian
eroso ibiltzeko.

4

Kartzelako eremuan
bizitzen zarenean,
barne araudiak zaitu
uzten iraganean,
jendarteko saretik at
luzaro zaudenean,
oraina maiteak dakar
bisitaren unean.

5
Konputagailuak dira
ziegan nire kaierrak,
posta elektronikoak
zuen gutun ederrak,
Facebook urrun, gatza dakar
postal polit piperrak,
argazkiekin dakuskit
hurbil euskal bazterrak.

6
Internet darraigu arren
ezin isiotu barik,
ziegan badugu gogoa
gozatzeko betarik,
idazten gustura nabil
zuekin sorgindurik,
irakurtzen berriz hegan
lilurak lagundurik.

7
Zuekin ohitu nahi nuke
tresna berrietara,
zentzu pixka batekin naiz
jarriko horretara,
nabigatzen joan gaitezke
ur gardenetara,
euskarak behar dituen
kai seguruetara.

8
Pairatzen ari naizenez
kartzelako porlana,
hodei horiek baino zait
atsegin harremana,
Internetek emango dit
noizbait bere laztana,
hala ere nahiago dut
zuen fereka bana.

*2013ko martxoaren 3an*

*272*
**Azitaingo Felix Bergara**

1
Felix gaur izan nahi nuke
uso edo enara,
mezulari esateko
“gurekin bizi zara”,
nire akorduan zaude
izarren argitara,
zirraraz eroan nuen
zure txera ziegara.

2
Zure etxea izan da
Azitaingo eliza,
*Herria 2000* berriz
utopien geriza,
hierarkiak bihurtu du
Vatikano lar grisa,
zuk jardun duzu ordea
kristau onberen gisa.

3
Berrogeita hamar urte
Jesusen batzarrean,
abade eta lagun min
herritarren aurrean,
artzain on bat izan zara
eibartarren larrean,
jendartea hobetzeko
beharren alorrean.

4
Helburu bi zenituen
gogoan iltzatuta,
bakea eta herria
zuzenki askatuta,
gogotsu aritu zinen
euskarari lotuta,
injustiziak salatuz
elizan elkartuta.

5
“Presoak askatasuna
bakarrik ei du galtzen”,
esaldi hori zenuen
bileretan aipatzen,
sufritzen zutenen alde
maitez zinen lerratzen,
kartzelan eskubideak
direlako urratzen.

6
Zure multikopista zen
frankismoan aldarri,
aulkiak ziren hamaika
ekintzen osagarri,
Ama Birjina zurekin
apalki miresgarri,
abuztuko jaian plazan
irriñoen pizgarri.

7
Azitaingo lemazaina
joan zara isilean,
gaur ez zaude *Arrateko*
denon *Kulturalean*,
umezurtz laga gaituzu,
ilunki otsailean,
elurrak erakutsi du
nahigabea kalean.

8
Felix jaso esker ona
duzulako merezi,
izan dadila bertso hau
arimetan eresi,
Mari Carmenen laguntzaz
izan zarenez hazi,
gure bihotzak dituzu
ereinda irabazi.

*2013ko martxoaren 10ean*

*273*
**Udazkena kartzelan zaudenean**

1
Udazkena kartzelan
hotz sartzen denean,
dardaraz hasten zara
ziega barrenean,
ez duzu hori uste
aske zaudenean,
berogailua gelan
hur dagoenean,
urtaro horren xarma
maite duzunean.

2
Udazkenak dakarkit
total erredura,
espe nagoenetik
ilunki tristura,
gauak luze jartzen du
bere estaldura,
laburtuz eguzkiak
dakarren onura,
alboratuz gogotik
desiren lilura.

3
Udazkenean daukat
zurbil aurpegia,
eguraldi grisak nau
mintzen alegia,
kartzelan eskertzen dut
sakonki argia,
goizalde oskarbiak
dakarren ongia,
uda edertzen duen
lehen ilargia.

4
Udazkenean zaigu
babesten natura,
koba baten gorde da
hartzaren ardura,
hemen dugu ordea
biluzik herstura,
euria, haizetea...
hamaika malura,
ai! hala doa belzten
gure bizigura.

5
“Udazkena laket zait”
nioen mendian,
basoa urrez oro
janzten zen aldian,
kartzelan naiz tamalez
bizi aspaldian,
izadi barik murru
gorrien erdian,
esperantza jarrita
euskal loraldian.



6
Maitatu gura nuke
berriz udazkena,
erauzi zorrotz zaidan
iltzatu eztena,
orbeletan etzanda
on dezaket sena,
zigorrak izorratu
didan sentimena,
Irati zurekin dut
ahaztuko pena.

*2013ko martxoaren 17an*

*274*

**Kartzelari xake-mate emango diogu**

1
Errepublika zaigu
hurbildu jokora,
erregeak taulatik
bidali kanpora,
zirto hau ekarri dut
xakeko arlora,
monarkak sartu ditut
kutxan hankaz-gora.

2
Xake-jokoa dago
pil-pil etxartean,
zoriontsu gabiltza
gu xake-matean,
kirolaren aurretik
edota ostean,
kideak ari gara
laukien artean.

3
Burutik zaizun arren
ateratzen kea,
gerra baino jokoak
pizten du bakea,
taulan errotu dugu
eremu askea,
kideen sentimendu
ederren trukea.

7
Mahaian jarri gara
grina berarekin,
denbora gozatzeko
xede onarekin,
zu hasi zuriekin
eta ni beltzekin,
kartzelak ahaztuko
ditugu piezekin.

8
Erregina laga dut
erregea zaintzen,
peoiekin dihardut
taktika prestatzen,
zaldiak trostan dauzkat
zuzen erasotzen,
alfilak zein dorreak
atzetik bultzatzen.

7
Gatazkari diogu
eman xake baikor,
konponketa zuzenki
ehuntzeko bizkor,
erabaki hau denez
guretzat emankor,
kartzelak hautsez dira
bihurtuko galkor.

6
Eskuak luzatzea
keinu adierazle,
amaitu da partida
biok irabazle,
xake-jokoa ez da
irrien ebasle,
baizik eta kideen
pozaren arazle.

8
Partida bat jokatu
zeuri eskaintzeko,
erregea bentzutu
zu loriatzeko,
xake-jokoan daukat
beta pentsatzeko,
elkartuko garela
maitez sentitzeko.

*2013ko martxoaren 24an*

*275*

**Goiztirian zurekin birsortu nahi nuke**

1

Filosofia sano edanda
hasiko da goiztiria,
burmuinak xurga dezala naro
etikaren emaria,
laztan zurekin berpiztu nahi dut
nire moral eroria,
gu osatuta osatuko da
gure Ama-Lur eria.

2

Gizaki on bat izan nahi nuke
atsegina sustatzeko,
nire arima gogoz astindu
zeuri aratz eskaintzeko,
Eibarren noizbait batuko gara
eskuz esku maitatzeko,
gure bizitzak eta irriak
gozoro konpartitzeko.

3

Nire baitatik beharko nuke
ekin onura zertzeko,
etxean uso izan zintzoki
Mundua zerbait ontzeko,
egunero gai izango banintz
gure sua girotzeko,
hasteko eran prestu nengoke
jendartea hobetzeko.

4



Apaltasunez jardun nahi nuke
hemen neure kideekin,
ibili barik haserretuta
ohiko kontu txatxarrekin,
begirunea landu gura dut
adi egon urratsekin,
mesprezatzaile ez izateko
aurpegiko keinuekin.

5
Nire odola batzuetan dut
herrarekin kutsatuta,
bihotza hola minki dudanez
geratzen zait tristatuta,
nahiago nuke lortuko banu
bizi xume alaituta,
xextrak hitzaren bidez isildu
enpatia isiotuta.

6
Ez dut nahi berriz inor kaltetu
nire grinak asetzeko,
nahitaez izan txar arrazoia
nia ergel hanpatzeko,
hurkoa zatar baztertu baino
ospea emendatzeko,
nahiago nuke plazera eman
berarekin gozatzeko.

7
Nire gogotik uxatu nahi dut
lar berekoi den jarrera,
nortasunak ez dezan sor egin
doilortuta okerrera,
elkartasunak esan dit laño
“hoa nirekin aurrera”,
auzolanari “hator” esanez
egingo diot harrera.

8
Ziegan idazten ari natzaizu
xede hauek aitortzeko,
zure nahiari kasu eginez
orban beltzak garbitzeko,
zahar samarra izan naiteke
supituki aldatzeko,
zurekin zirri badut ordea
astirik poz birsortzeko.

*2013ko martxoaren 31ean*

*276*

**Hiru desira eta sentimendu bat negu gorrian**

Neguko ilunabarrean
ipar haizearen menpean
hotz dagi presoaren ziegan,
berdin txiroaren txabolan,
eta zarpailaren zokoan,
uzkurtuta dagite amets
lar sufritzen ari direnak.
Aukera bat nahi du presoak
hesia bihur dadin ate,
justizia nahi du txiroak
txabola bihur dadin etxe,
errukia nahi du zarpailak
kartoia bihur dadin ohe.
Gazte sentimentalak dio
“buka dadila gabezia
onura haz dadin Munduan”,
udaberrian entzun nahi du
txiolari txantxangorria,
esperantzaren irrintzia.

*2013ko apirilaren 7an*

*277*

## Kartzelak hil duen kide bati

Mendeku zitalaren sarean erorita
botereak gupida gabe iraindu zaitu,
krudelkeria pairatu behar izan duzu
zure herria oro maitatu duzulako,
ospitale batean bakarrik hil egin zara
esku maitagarrien babesa ukatuta,
gelako atean polizia batzuk daude
ezin ulertu barik konpromiso itzela,
aberriari eskaini diozu bizitza
jendarte maiteñoa hobetzeko musu-truk,
ez duzu egun handia plazan gozatuko,
gurekin gozoro biziko zara ordea,
Auñamendian egunsenti oskarbietan,
Kantauri itsasoan arrats oskorrietan,
zelaian lili usaintsuen petaloetan,
jaioko diren ume askeen taupadetan.

*2013ko apirilaren 7an*

*278*

## Buruaz beste ez egiteko *Stop*

1
Buruaz beste egin du estutu dutelako,
etxebizitzarekin espekulatzen delako,
eskubide horrek gaur bermerik ez duelako,
lukurreruak hemen onartzen ditugulako,
banku bihozgabeen menpe bizi garelako,
auzolana zer den kasik ahaztu dugulako.

2
Marrazoen itsasoan naufragoa galtzaile,
batuta aukera dugu izateko garaile,
“Stop” esan diogu etxe kaleratzeari,
halaber banku gaizkilearen demasiari,
ekimen iraultzaile horren moduko printzekin
Euskal Herria argituko dugu irriekin.

*2013ko apirilaren 7an*

*279*

**Oraingo negu gordinak leunduko dira**

1
Udazkena badoa
badator negua,
izan dadila, otoi,
gurekin malgua,
"ez dut gura ospelik"
ohi da erregua,
kartzelan ez dadin has
ozen ernegua.

2
Neguan jipoitzen nau
kartzela okerrak,
laiotzak direlako
hemengo bazterrak,
izozgailu handi bat
dirudi tailerrak,
halaber kiroldegi
umel eta lerrak.

3
Andaluzian ei da
ikur eguzkia,
neguak baina dakar
tamalez flakia,
sukarrak duenean
jotzen bekokia,
dardarka datza soilik
ziegan gizakia

4
Puerton uzkur gabiltza
hotzaren garaian,
denbora darabilgu
berotzeko nahian,
kalean eguna zen
joaten ezarian,
kartzelan txepel doa
arima erian.

5
Negutean hotz dagi
ziega txikietan,
izoztuta geratzen
zara iluntzetan,
aterpea bilatzen
duzu izaretan,
gustagarri zaizkizun
amets askeetan.

6
Elkartasunak digu
negua leuntzen,
bihotza laztanduta
gogoa gozatzen,
etxartean kideok
garenean batzen,
bisitak zein gutunak
ditugu eskertzen.

7
Putzu beltzean ditut
gorriak ikusten,
berogailurik gabe
eztulka naiz hasten,
maitasunari esker
hotza dut jasaten,
naro dit behar dudan
kemena ematen.

8
Atsegin zait zurekin
hotzari eustea,
"zoritsu bizi gara"
garbi entzutea,
etxean goxo-goxo
zeuri esatea,
"opari bat izan da
gaurko elurtea".

*2013ko apirilaren 14an*

*280*

**“197/2006”: Estrasburgo txepelaren zain gaude**

1

Eskubideak barraskiloak bezain geldiro dira higitzen,
hilabete mordo bat herrenka dabiltza Europa zeharkatzen,
Mendeku ankerrak aldiz injustizia lasterka du ekartzen,
lege miserableak maltzurki ditu asmatzen eta ezartzen,
konponketa dihardu amarruekin bihozgabe atzeratzen,
euskal ameslariok jarrai dezagun negu gorria sufritzen.



2

Eskubideak izan daitezela zikoinak adina azkarrak,
Mendekuri ken diezazkioten sua elikatzeko abarrak,
justizia korrika ekar dezala Estrasburgok alegia,
epai bat berresteko ezin daitekeelako izan hain nagia,
ziegetan zut dauden bihotz xaloak objektuak ez direlako,
gerezien sasoian herrian gurekin behar ditugulako.

*2013ko apirilaren 21ean*

*281*
## ***Ogi eta zirku* leloak indartsu darrai**

1
Hogei mende igaro diren arren
*Ogi eta zirku* leloa dirdai,
jauntxoak darabil lokar gaitezen,
botereari errazki eusteko,
orduan gladiadoreak ziren
gaurko boxeolari gihartsuak,
gizajo haiek elkar hiltzen zuten
bizirik iraun ahal izateko,
gazte hauek elkar jipoitzen dute
goizetik gauera aberasteko,
izerdia garai hartan lez baita
odolarekin larruan nahasten.

2

Erroman Koliseoa izan zen
ankerki haien erdigunea,
orain Koliseoa Las Vegas da,
kontsumismo ustelaren ikurra,
jendeak telebista isiotzen du
K.O. bat txalokatzeko irrikaz,
txapeldunen indarra miresteko,
euren diru poltsak desiratzeko.
Eta guk benetan zer gura dugu?
Kontsumismoa edo Utopia?
Boxeo hutsala edo Kultura?
Erantzuna gure buruan dago.

*2013ko apirilaren 21ean*

*282*

**Kukuak jaun eta jabe Nafarroan**

1

Miranda, Maya... eta Sanz
etikoki apurrak,
Barcina moduan dira
agintari makurrak,
txanponak gura dituzte
txerriek lez ezkurrak,
Nafarroari zaizkio
lotsaz gorritu lurrak.

2

CANetik irteten ziren
sariak kobratuta,
egon eta gero batzar
laburretan mututa,
gobernua dutelako
sumatu zemaituta,
dirua itzuli dute
soldatak goratuta.

3
Herria pobretu dute
CAN ergelki galduta,
tren garestiaren lanak
eroki ordainduta,
Estatuak dena die
barkatzen behartuta,
Nafarroa ez galtzeko
zeharo beldurtuta.

4
Nafarroa darabilte
dirua egiteko,
Euskal Herriko geroa
maltzurki errausteko,
herria limurtzen dute
luxuari eusteko,
mutur gogor horiekin
onurak irensteko.

5
Jainkoa baino gehiago
gurtzen dute dirua,
aberats berri hauentzat
bankua da zerua,
boterea izan denez
eurentzat helburua,
Opusekin egin zuten
apustu segurua.

6
Polit mozorrotzen dira
agintzen irauteko,
euren grina zikinei
bidea emateko,
“Nafarrak gara”, diote
gezurra babesteko,
nafar behien errapeak
esne barik uzteko.

7
Politika uste nuen
zela duin altruista,
UPNek du ordea
bihurtu egoista,
Barcinak dioen arren
“zinez naiz foralista”,
soilik da espainolista
eta kapitalista.

8
Arrano Beltzak dezala
kanpora bizkarroia,
urrea gutiziatzen
diharduen erroia,
Nafarroak zuzenki du
ezarriko egia,
itzul dadin herri bera
ginen garai argia.

*2013ko apirilaren 28an*

*283*

## Geure Untzagako plaza akorduan

1

Jai bateko suak ohean entzunda
akorduan gure plaza agertu zait,
zirraraz ziega barrenean dakusat
iretargi betea bezain polita.
Eibar maitatzen bertan ikasi nuen
gurasoekin irteten nintzenean,
anaiekin olgetan nenbilenean,
edo lagunekin baloiaz jokatzen.

2

Untzaga, dirdaitsu gogoratzen zaitut
zerua ilun egon edo oskarbi,
Isasitik arin jaisten nintzenean
maiteminduta eta liluratuta.
Zure haurren algarak oroitzen ditut,
albo dotore biluziak neguan,
euren gerizpe zoragarriak udan
patxadaz jarrita banku kutunetan.

3
Zurekin barre eta negar egin dut
sanjuanetan eta sanandresetan,
greba orokorreko egun latzetan,
presoen alde elkarretaratzetan .
Zure zolan hainbat aldiz ibili naiz
dultzaineroekin eta pankartekin,
kantuan edo garrasi eginez,
oi, plaza, aldarri eta dantza zara.

4
Zu zarelako hitzorduen gunea,
udaletxearen inguru ederra,
kirol ospakizunen txoko bikaina,
zure taupadak sakon sentitu ditut.
Euskal Jaixan sarritan hunkitu nauzu,
berdin Korrikaren zain nengoenean,
Olentzero eta danborradarekin...
zein musika-bandaren *Cielito*rekin.

5
Udaletxetik, Txantxa-zelaitik dizut
begiratu miraz eta begirunez,
gure herriaren historia zara,
bihotz samur, arnasa, eta lekuko.
Adiskide elkar ikusiko dugu,
zugana itzuliko naiz enparantza,
pixka bat zahartuta baina kementsu,
maitaleak lez osoro sorginduta.

*2013ko maiatzaren 5ean*

*284*
**Estatubatuarren su armak**

1
Estatu Batuak dira
armetan txapeldunak,
Munduko bortxa hilgarri
gehienen errudunak,
aspaldian egin ziren
Herioren lagunak,
etxean sarri zaizkie
oro beltzen egunak.

2
Odola eta izua
eskolako geletan,
ezbehar zentzugabe bat
Estatu Batuetan,
ero batek burutu du
dagitena gudetan,
galtzaileak dira tamal
haurrak halakoetan.

3

Connecticut lehertu da
oraingoan minetan,
baina izan zitekeen
Irak edo Pakistan,
ikara gura badugu
aienatu benetan,
galda ditzagun su armak
deblauki labeetan.

4



Newtowndarrak ia dira
bart urtu negarretan,
hipokrisia galanta
Obamaren hitzetan,
nonahi dituzte su armak,
salgai daude dendetan,
konstituzioak ditu
baimentzen arauetan.

5
Munduan nahiz eta nahi ez
armak dira hiltzeko,
jauntxoek behar dituzte
boterea zaintzeko,
askotan darabiltzate
txiroak kikiltzeko,
haien lurren ondasunak
tiroka lapurtzeko.

6
Armak egin beharrean
herra elikatzeko,
ekoitz dezagun onura
herriak gizentzeko,
Mundua izan dadila
alaia bizitzeko,
eta ez orain lez grisa
saminki pairatzeko.

7
Elkartasuna daukagu
armekin lurperatuta,
haur tristea hola datza
indarge gosetuta,
altxa dezagun maiteki
eskuak luzatuta,
Lurra ikus dezan eder
zuzenki banatuta.

8

Bakea izan dadila
bihotzen atsegina,
Mundua bihur dakigun
Oasi, alajaina!
Txoriek txioka dute
berretsi gure zina,
“armen bolboraren ordez
haurren irrifar mina”.

*2013ko maiatzaren 12an*

*285*

**Biharko urte handiarena**

1

Aurtengoa kide izango da
niretzat hamahirugarrena,
sinetsi nahi dut izango dela
kideontzat zeozerena,
seguru asko ez da izango
nahi dugun zohardiarena,
baina bai gure goiztiri hori
hasten lagunduko duena.
Urte hau ziur izango dela
zeurea eta besteena,
horrela gero iritsiko da
dirdaiki gainerakoena,
deserrietan urruti gauden
euskaldun sentimentalena,
Ama-Lurraren euskara maitez
laztanduko dugunarena.

2

Orduan hor da dena hasiko,
gutarrek espero zutena,
galtzailerik ez duen izango
garaipen kolosalarena,
pobreziarik ezagutuko
ez duen auzolanarena,
herrarik gabe hedatuko den
giza eskubidearena.
Urte hori da izango uros
gure askatasunarena,
zuk eta denok itxoiten dugun
egun zoragarriarena,
bortxarik gabe on biziko den
euskotar jendartearena,
maiteñoari oparituko
diegun irriñoarena.

*2013ko maiatzaren 19an*

*286*

## Geure idazleen aldeko dei bat

1
Kontzientzia enegarrenez zaizu kexatu,
nortasun bihurria nahi zenuke bezatu,
ez dadin axolagabe kultura gezatu,
besaulkian zara eserita erlaxatu,
ohiko nagikeria txarra duzu xaxatu,
literatura euskaraz oparo gozatu.

2
Gure idazleak hasi zara gerizatzen,
itzultzaileen langintza gozoro pusatzen,
ele maitea diharduzu eder usatzen,
nonahiko istorioak gogoan pausatzen,
euskal unibertsoa hola zaude osatzen,
Etxepareren aldarria bikain gauzatzen.

*2013ko maiatzaren 19an*

*287*

**Birziklatuz zoriontsu biziko gara**

1

Zabortegiak ia daudenez
gainezka, gara zoratu,
zaborra eta errauste planta
*versus* zentzuz birziklatu,
ezinbestean beharko dugu
bietatik bat hautatu,
atez ateko aukerak bere
praktika du plazaratu,
Ama-Lurrari nahi diolako
iraupena ziurtatu.

2

PNVek beltz dakusanez
egindako apustua,
nonahi ari da gogor baztertzen
atez ateko hautua,
hainbat herritan hauspotzen dabil
zalantza eta txistua,
zaborra maltzur du bilakatu
politikaren itua,
errauste planta kinka larrian
dagoela da kontua.

3
Kalean orain irmo dabiltza
ustezko intsumisoak,
euren jauntxoen asmoak dira
gardenak baino lausoak,
arrazoi barik sortu dituzte
Gipuzkoan arazoak,
kapital gaitzak tronpatu ditu
erraz samar inozoak,
ezjakinei laket zaizkie
jarduera erosoak.

4
“Dirua baino askoz gehiago
balio du izadiak”,
berba egiten jakingo balu
esango luke ardiak,
mozkinak gura ditu ordea
handinahi hutsal hordiak,
errauste plantan egongo dira
ke grisentzat prest hodiak,
aldiro eman behar zaizkio
zabor kopuru handiak.

5
Diruzaleak hor ari dira
berriro jotzen adarra,
ez dut ulertzen zer dela eta
erre nahi duten zakarra,
nahiz eta nahi ez birziklatu da
geurean betebeharra,
Mundu koskor hau soilik delako
gure lurralde bakarra,
izan ez dadin euskal umeen
etorkizuna kaskarra.



6
Kotxe batena zen olioa
isurita komunean,
Ego erreka kaltetu nuen
erarik zikinenean,
lur jota ziplo geratu nintzen
konturatu nintzenean,
geroztik daukat arantza hori
etengabe burmuinean,
birziklatuz naiz naturarekin
biziko zorionean.

*2013ko maiatzaren 26an*

*288*

**Aske guneen askatasunean**

1

Bulebarrean bildu gara eusteko,
berdin Zumardian zubia janzteko,
espetxeratzeen kontra jarduteko,
kartzelak batera hustuta uzteko,
desobedientziaz garden ikusteko,
erdiets dezakegula esateko,
utopiaren bidea marrazteko,
etsipena kemenez ekiditeko.

2

Aske Guneak arantzak baztertzeko,
eskubideak sano eskuratzeko,
bortizkeria hemendik haizatzeko,
boterearen zigorrak gainditzeko,
gatazka zuzen demokratizatzeko,
bakeari geroa ziurtatzeko,
zauritutako bihotzak sendatzeko,
esker onaren soekin hunkitzeko.

3
Ertzainak tamalez ez dira heroiak,
soilik dira Espainiaren morroiak,
bere agindupean dauzka borboiak,
oro ahultzen gaituen bizkarroiak.
Donostian esan zituzten idoiak,
Ondarroan erabili modu lohiak,
hurrenekoan has daitezke jipoiak,
iraungo du baina doinu herrikoiak.

4

Herri harresia eskutik heltzeko,
erkide jazarriak aterpetzeko,
elkartasuna poliki hedatzeko,
zapalkuntza jarrita deuseztatzeko,
demokraziaren falta salatzeko,
herrian berdintasuna ereintzeko,
urtetako malko beltzak gozatzeko,
aro berria gozoro erditzeko.

5
Aske Gunea, zu zarelako baikorra,
zure baitan dago gaztedi jatorra,
izango zara dir-dir gure altxorra
herritarrok behar genuen motorra.
Intsumisioa da eraginkorra,
mendekua bihurtuko du galkorra,
lor dezagun askatasun iraunkorra,
euskarak gal ez dezan bere alorra.

6
Kartzelan dituzten arren sarrarazi,
kideen ereduak du irabazi,
kontzientzia zaigu zoragarri hazi,
Aske Gunea zer den dugu ikasi.
Esperantza ezin dute galarazi,
libre bizitzeko grina gerarazi,
herri harresia ez delako sasi,
baizik euskaldunen nahiaren garrasi.

*2013ko ekainaren 2an*

*289*

**Untzagan elkartzen ginenean**

1
Euriarekin oroit naiz
agertzen zinenean,
irriño bat marraztuta
aurpegi leunean,
Isasitik jaisten zinen
gabardina soinean,
Untzagan zure zain dontsu
egoten nintzenean.



2
Taberna batean ginen
jartzen goxo txokoan,
zerbait afaltzen genuen
bare hango giroan,
gure planak genegitzan
gustura jandakoan,
zoritsu egoten nintzen
maite, zure alboan.

3
Guk ez genuen sentitzen
hotzik negu gorrian,
eskutik samur helduta
iluntze hozkirrian,
arnas lurruna hasten zen
poliki aldarrian,
“gu gabiltza”, genioen,
“modu zoragarrian!”.

4
Zu eta ni bizi ginen
bikain iraganean,
gu memento hartan geunden
xarmaren larrainean,
horixe baieztatzen dut
ziegan nagoenean,
goiz-argian maiteminez
esnatzen naizenean.

5

Izar denak egon arren
erabat estalita,
gau beltzuria zitzaigun
iruditzen polita,
alai genbiltzan batera
ilusioz jantzita,
aterkitik euri tantak
erortzen ikusita.

6

Iretargia borobil
ateratzen zenean,
luzaro egoten ginen
agurtzeko unean,
bihotzak zebiltzan gertu
taupaka gauminean,
amandrearen distira
jasotzen zutenean.

7
Besarkatuta gozoro
gaueko soseguan,
entzuten genuen hontza
uluka inguruan,
artizarra keinuka zen
pizten dir-dir orduan,
bere grazia eskainiz
ortziaren ortuan.

8
Gure Untzagako plazan
ginelako elkartzen,
zurekin atseginez naiz
oroitzan kulunkatzen,
askapenaren zuhaitza
hasi gara kimatzen,
gerezia onduko da
has gaitezke ospatzen.

*2013ko ekainaren 9an*

*290*

**Hegaztiak bat: kaleko usoak**

1

Uso zuriak pausatu dira
herriko haurren jolaslekuan,
guraso batek uxatu ditu
tokia zikin utz ez dezaten,
ez ziren nahita heldu ordea
hegazti apal moko-meharrak,
guk genituen jarri plazetan
ogi apurrez elikatzeko.

2

Orain guretzat usoak baino
dira arratoi hegalariak,
hor nonbait tamal ahaztu zaigu
zein goxo geunden eurei beha,
polita zena hegan zeruan
zatar samarra ei da kalean,
garai bateko haurren desira,
maite genuen uso zuria.

*2013ko ekainaren 16an*

*291*

## **Plazetan batuko gara hutsik dauden aulkiak bete arte**

1

Umeak lez zirraraz goaz ehunka plazetara,
bihotzen taupadekin iristeko kartzeletara,
ilusioa bidaltzeko gure arimetatik,
zigortutako lurraldearen lau bazterretatik,
eskuarekin oratuko diogu asmoari,
presoei sostengua emateko ekintzari,
pankartak sendo helduta egingo dugu bidea,
bete daitezen gutarren ametsak eta oldea,
egitasmoa ez doa inoren kontra bestalde,
baizik lur honetan bizi garen herritarren alde.

2

Xalo batuko gara iragana ez ahazteko,
oraina behingoz ontzeko, geroa irabazteko,
Udaberrian elkartasuna marrazteko,
isiotu dugun garaiaren lurrina arnasteko,
kartzelak hustuta bikain askatuko garelako,
bizkarrak hola elkar laztanduko ditugulako,
herra nahi dugulako eskubidean deuseztatu,
deserrian dagoen ziega goibela brau zartatu,
Herriraren ekimenak direlako egokiak,
ez dira bihar hutsik egongo kutunen aulkiak.



*2013ko ekainaren 16an*

*292*

**1978ko urtarrilaren 11: Xefe eta Txintxo gogoan**

1
Martin Villak zuenean
harro eman berria,
bortxa elikatu zuen,
haserretu herria,
geuretzat irain bat izan
zen esaldi larria,
“bi eta bat irabazten
goaz” izugarria.

2
“Hogeita hamabost urte”
oroitzak dit aitatu,
urtarrilaren hamaikan
segada zen gertatu,
Txintxo eta Xefe tiroz
zituzten zarratatu,
Iruñean poliziak
hori zuen hautatu.

3
“Polizia bat hilotz da
suertatu tiroketan”,
esan zuen Martin Villak
prentsarekin berbetan,
irria zeukan ordea
nabarmen ezpainetan,
euskaldun bi zeutzalako
erailda odoletan.

4
Martin Villak zuenetik
egin aipu krudela,
sarritan mugituko zen
markagailu itzela,
ordutik emendatu du
txanponekin sakela,
geuri utzi eta gero
uzkurtuta sabela.

5
Gure inguruan zuen
gordin hazi negarrak,
gatazka konpondu barik
erre gintuen garrak,
Martin Villak aldiz ditu
ezagutu aparrak,
Munduak epai ditzala
behingoz halako harrak.

6
Martin Villaren jarrerak
sakon gintuen mindu,
maltzur nahi izan zituen
euskal nahiak birrindu,
faxista horri diogu
baina poza hebaindu,
Aieten dugu beraren
asmo txarra lorrindu.

7
Madrilek nahi duen arren
erein sasi zikina,
azken urteurrenetan
ondu zaigu samina,
gatazka konpondu baita
aberri honen grina,
“Xefe, Txintxo, askatuko
gara!” da gure zina.

8
Hiletetan egin zuen
zirrara iluntzean,
Ordizia zein Altzaga
zeuden blai agurtzean,
Txintxo eta Xefe daude
gutarren baratzean,
ihintzak laztantzen ditu
argia urratzean.

*2013ko ekainaren 23an*

*293*

**Hegaztiak bi: bakearen usoa**

1

Euskal Herrian ez dugu ikusi
hegan bakearen usoa,
etengabe pairatu dugulako
estatu txarren erasoa.
Uso hori pozarren etortzen da
olibondo hosto batekin,
baina nekez etorriko da hona
gaurko baldintza eskasekin.
Hemen askapen bideak ditugu
bidegabe galarazita,
Giza Eskubideen lur ederrak
kate astunekin itxita.

2

Bakearen usoa, zatoz arren,
pausa zaitez gure plazetan,
denok atseginez ibil gaitezen
gatazka barik karriketan.
Gizaki berria jaio dadila
zoritsu aske bizitzeko,
benetako demokrazia zuzen
euskal lurretan ezartzeko.
Usoa zurekin dirdai nahi nuke
ospatu bihar amnistia,

udaberrian berriz ikusteko
otea eta gorostia.

*2013ko ekainaren 30ean*

*294*

**Hegaztiak hiru: bi kaio eta oilar bat**

1

Kaio bi zeru garbiaren azpian
hegaldari itsasoaren gainean,
ikuskizun apal hori behatzea
polita ohi da izaten udaldian,
kartel urdinen kaioei ordea
goiko sabaia marroi bihurtu zaie,
alderdi kideak aberastu nahian
diruarekin kakaztu direlako.

2

Oilar gorriak, Sirian gura ditu
ustezko iraultzaileak sostengatu,
Azawaden aldiz egurtu zituen
uranioa ziurtatzeko asmoz,
elkartasuna nonahi ehundu ordez
ero dabil egoismoa sustatzen,
bere *demokraziarekin* dihardu
herri txiroak bidegabe zanpatzen.

3

Kaioak eta oilarra baino lehen
arrano inperialak ziren zitalak,
herri xumeak kontuan hartu barik
lurrak eta urak banatzen zituzten,
guk euskaldunok sufritu genituen
orain lez oinordeko nazkagarriak,
monarka izugarri ase ezinek
bortizki ziguten zatitu txokoa.

4



Kaioak hega egiten dakuskigu,
oilarra goizero kantuan dantzugu,
Madril eta Parisetik etorrita
zirinekin harro zikintzen gaituzte,
baina guk izakiak maite ditugu
Ama-lurraren arauen barrenean,
naturaren graziak babes gaitzala
hegazti faltsuak jasan ez ditzagun.

*2013ko ekainaren 30ean*

*295*
**Kide irribarretsu bati esker onez**

1
Ate baten kirrinka,
hasi da eguna,
irteteko prest dago
kideko hiztuna,
begiak pozten zaigu
egin ezaguna,
bere alboan pena
dirudi biguna,
suspertzen du etsita
dagoen urguna.

2
Urte asko darama
herritik kanpora,
borrokan erori zen
gatibu zulora,
kartzelan usatu du
ganoraz denbora,
euskara ikasita
egin dezan gora,
euskaldun helduko da
zoritsu txokora.

3
Bere umorea da
zinez kutsakorra,
arlo askotan baita
horrela motorra,
erabat lautu digu
aldapa gogorra,
irribarreaz blaitu
kartzela lehorra,
inguru ezkorra du
bihurtu baikorra.

4
Txantxekin murrizten du
kartzelan laharra,
zirtoekin argitzen
etxarte nabarra,
herriminak duenez
zeharkatzen marra,
adorea eskaintzen
digu barra-barra,
gau beltzean dirdai da
amandre zaharra.

5
“Bizipoz barik”, dio
“ez dago biderik,
ezta ere tamalez
geroko xederik,
kide denok batuta
badago eusterik,
hola ez duzu hemen
izango ajerik”,
berari esker ez dut
izaten nekerik.



6
Halako lagunekin
ni nago gustura,
sentitzen dudalako
naroki onura,
zurekin dut aldendu
erraz asperdura,
zure turrusta daukat
oparo eskura,
kartzela gainditzeko
behar dudan ura.

*2013ko uztailaren 7an*

*296*

## Hegaztiak lau: arrano inperialak eta geure arranoak

1
Inperioen sinboloak izan ohi dira mehatxagarriak,
zekuskiten eremuetan gertatzen ziren triskantza larriak,
Erromak, Arranoa zeraman lapurtzeko hamaika lurralde,
harro azpiratu zituen kulturak bere ospearen alde,
hola oldartu baitziren armadekin monarkia europarrak,
Arrano inperialak astinduz zituzten hildu herri zaharrak.

2
Nafarroako erresumaren arranoa omen zen narea,
horregatik ehizatu zuten monarka gaitzek hedatuz sarea,
Arrano Beltza gogoko zait ez delako izan erasokorra,
bere xedea soilik zelako defendatu nafarren alorra,
sinbolotzat ez du hartuko baina bihotz errepublikanoak,
baizik libreki euskal mendietan biziko diren arranoak.

*2013ko uztailaren 14an*

*297*
## Hegaztiak bost: Puertoko hegaztiak

1
Kartzela honen erdigunean dago
hegaztien talai gorrixka zantarra,
lehen bertan soilik nekusan kaio bat
eta noizbehinka kalandria polit bat,
orain mordoka dabiltza garrasika,
gure zigorraren gainean lehiatsu,
kupularen gailurraz jabetu nahian
zelatatzeko egokiro zaborra.



2
Kartzelan kaioak ugaritu dira
mugagabe hazi delako zaborra,
etxartean maiz dakuskit pausatuta
botatako pusken bila etorrita,
sirenotsarekin ziplo izututa
baldar hegan eginez alde dagite,
hurrengo batean berriz itzultzeko
jateko beharra zerbait berdintzeko.

3
Kaioak lartxo emendatu badira
txori txikiak aldiz gutxitu dira,
hormatxoriak auskalo non dabiltzan
txioak ia ez ditugu entzuten,
belatz goseti pare baten aldetik
eraso itzelak sufritzen dituzte,
bizitza galtzen dute haien onuran
kumeak indarge utzita kabian.

4
Ogoñoko kaioak gogoratuta
burutapen hauek inguratu naute,
hango zeruari beha uste nuen
itsasertzeko hegaztiak zirela,
egun, bidea ergel erakutsita
aldraka dabiltza zabortegietan,
Ama-Lurra ez dugulako maitatzen
izakien izaera dugu txartzen.

*2013ko uztailaren 14an*

*298*

**Tabakoaren drama kartzeletan**

1
Kartzelan ozen, “hau drama!”, diot
erruz delako erretzen,
preso askoren patrikak dira
kearen truke zulatzen,
tabakoak du hemen nabarmen
osasuna izorratzen.
Zenbat birika ote da hola
pozoi horiaz kutsatzen?
Zenbat bronkio zentzurik gabe
txakur eztulaz ahultzen?

2
Preso gaixoak pipatu nahi du
nikotinak behartuta,
dirurik gabe dabil eskean
lotsa sakon lurpetuta,
tabakoa da bere galera
minki dauka zigortuta,
aldiro ditu zigarrokinak
hartzen baldar makurtuta,
karkasa franko zikin utzita
etxartean banatuta.

3
Presoa dago keari beha
pentsatu barik zorretan,
murriztuz petral elikadura
zigarroen ohoretan,
xaboia dizu larri eskatzen
sartzen denean dutxetan,
arnasa ezin hartuta zaio
loa eskasten gauetan,
ez du merezi halaxe bizi
kartzela lar goibeletan.

4
Borondaterik ez duelako
presoa dago hilduta,
tabakoaren azpian dauka
etorkizuna galduta,
ez dakit zelan iraun dezake
ke artean ilunduta,
nik aspaldian baztertu nuen
kalteekin higuinduta,
nikotinaren kiratsarekin
nengoelako minduta.

5
Tabako beltza edo gorria
bilduta edo biltzeko,
zu presoago zaude irrika
duzunean pipatzeko,
itzal ezazu gaur zigarroa
bihar berriz ez pizteko,
diru pixka bat izango duzu
hobekiago jateko,
kirola udan eta neguan
gusturago egiteko.



6
Ero pipatuz zaude lotuta
erabat kateatuta,
zure gorputza dago horrela
kearekin mugatuta,
burua sano izango duzu
tabakoa uxatuta,
konpai, aldatu zure bizitza
baitatik kanporatuta,
kalean edo kartzelan zara
sentituko gaztetuta.

*2013 uztailaren 21ean*

*299*
## Hegaztiak sei: Kalamuako arranoa

1

Akondiatik nekusan arranoa, gaur egun han al da biziko?
Kalamua ondoan airean, ote da trebeki eskegiko?
Beharbada oraindik gogoko zaio Eibar aldeko zerua,
handik hur atonduta eduki lezake kabia segurua.
Desio hauek piztu zaizkit geroa nabilelako ehuntzen,
dakidalako arranoak bere talaia duela preziatzen.

2

Ez dakit harraparia etorriko zen nahi izan zuelako,
edota derrigorrez sorlekua hondoratu ziotelako,
tamalez, gizakiak horixe dagigu sarri gupidagabe,
lurraldeak diruaren truk ditugulako hausten etengabe.
Kartzelatik "berriro ikusi nahi nuke", diot modu onean,
Akondiatik luzaroan agurtzeko biharko zorionean.

*2013ko uztailaren 28an*

*300*

## Hegaztiak zazpi: beltxargak ez dira basatiak, baizik zisneak

Atzo bezala hegaztiak dakuskit
igerian goiz-argiaren unean,
zisne bi dira, arra eta emea,
izen bereko aintzira gardenean.
Irrazionalak ei direla diogu
geure handiustetik begiratuta,
euren arteko harremana ordea
bikain daukate izadian zertuta.
Ugaltzeko sasoia iritsi zaie,
naturalak baitira halakoetan,
bizitza partekatu nahi dutelako
dihardute limurtzeko jolasetan.
Leun ferekatzen dituzte lepoak
udako egun polit oskarbietan,
izaki dotore hauen izaera
islatuta geratu zait ninietan.

*2013ko uztailaren 28an*

*301*
**Uztailak sei: Maia auzapeza, ikurriña eta gu**

1
Uztailak sei Sanferminak
nekez dira lehertu,
Maia auzapez eskasa
lar delako pipertu,
txupinazoa ziplo du
burugabe atertu,
ikurrinak duelako
enparantza edertu.

2
Ikurrina dugunean
ikusi eskegita,
begiak busti zaizkigu
zirrarak atxikita,
Maiak aldiz dakusanez
balkoia estalita,
irria geratu zaio
haserre itzalita.

3
Bizardun batzuek dute
zabaldu ikurrina,
aberri zapalduaren
sinbolo apal mina,
udalak ez duenez nahi
ipini, hau iraina!
Arrantzaleek baitute
eskegi alajaina!

4
Soka kanaberaz dute
jaurti eta tenkatu,
ikurrina teilatutik
artez zintzilikatu,
Munduak liluratuta
"aupa!", du oihukatu,
"eusko izan zaitez", dio
Maiari aholkatu.

5
Jendea plazan ari da
begira txundituta,
udaletxean eskuina
dago aztoratuta,
gazte lerdenen asmoa
zoragarri zertuta,
gutarren bihotzak daude
punpaka suspertuta.

6
Franco kriminalak zuen
ikurrina zirtzildu,
diktaduran bere sona
bortxaz ia isildu,
Nafarroan UPNk
gura luke amildu,
makurren harrokeria
ausartek dute hildu.



7
Nafarroak oparo du
egia barreiatu,
demokrazia faltsua
garbi azaleratu,
polizia duten arren
errabiaz xaxatu,
euskal herriak ezingo
dituzte aienatu.

8
Fermin Deunak jator ditu
bizardunak babestu,
atxiloketa horrela
aise dute saihestu,
entzierroan lez dugunez
bizitza hemen estu,
ikurrinarena dugu
gatibuok mirestu.

*2013ko abuztuaren 4an*

*302*

## Hegaztiak zortzi: oilarra ez da harro portatzen

1
Oilarra ez da zital portatzen,
ez du sekulaz lizun estutzen,
harro samarra dirudi baina
ez du oiloa koldar jipoitzen,
gandorra eta ezproi zorrotzak
zelaian ditu sano usatzen,
berea soilik genetika da,
berezko zerak du gobernatzen,
egunsentia hasten denean
hagan igota ohi du kantatzen.

2

Puta-zain putzak bizi nahi luke
oilar beltza lez haren batean,
boterearen sinbolo gisa
neskatxak lotu bere katean,
oilategian hola omen da,
gordeta daude ezinbestean,
burdelean maiz gertatzen dena
bortxa aldiz da bete-betean.
“Oilartu baino”, diot argiro,
“berdintasuna zut jendartean”.



*2013ko abuztuaren 11n*

*303*
## Hegaztiak bederatzi: belea eta urrea

1
Beleak harribitxiak gutiziatzen omen ditu,
berak ez du horretarako sentimenik ordea,
agian distira erakargarri egingo zaio,
beharbada urreak nahasiko dio oldea.
Metalak eskuratzeko grina kriminalak baitu,
horregatik hartu zituen menpean afrikarrak,
sarraskitu Ameriketan hainbeste indigena
dotoretzeko zikoitz lepoak eta atzamarrak.

2
Dirua jokoan dagoenean errukirik ez,
herriak zanpatzen dira urrea ustiatzeko,
monarken ardura bitxiak biltzea izaten zen
gizatasunik gabe guden gastuak ordaintzeko.
Lurraren erraietatik erauzi ziren metalak
Europako hantusteen biziera gorpuzteko
horrela lurperatu zituzten arimak Potosin,
inperio maltzur baten boterea babesteko.

3

Bele batek inoiz ez luke sarraskirik egingo,
ez liguke urreagatik birrinduko bizitza,
ez lizkiguke pozoituko urak zein lur onenak
naharotsu zena bilakatzeko tamalez hitsa,
ez luke aldra bat osatuko gu esklabotzeko,
ergel emateko altxorra gurtuz bizialdia,
izaerak asmo hori galaraziko lioke
ez delako gaizkile ustel bat baizik izadia.

*2013ko abuztuaren 11n*

*304*
**Burukomina udaberrian igaroko zaigu**

1
Presondegian eta kalean
edozein min da tristura,
burukomina datorrenean
dirudi dena malura,
baitan sentitu gura zenuke
ihes zaizun joan onura,
zugana itzul dadin gardenki
amets ederren lilura.

2
“Estresak dizkit minkor hanpatu
zainak lokien gainean,
hori gertatzen zait ardurekin
aztoratzen naizenean”,
pixka bat larri esan zenidan
hitz egin genuenean,
udaberria isiotu barik
beltzuri zegoenean.

3
Zenbat arazo hainbeste kezka
hor dator burukomina,
tarte horretan bizitza zaizu
bihurtzen estu osina,
aspirina bat irentsi duzu
arintzeko zerbait mina,
desioetan babestu zara
azkar dadin eragina.

4

Konpartitu nahi nuke maiteño
ari zarena pairatzen,
zirri leunak dituelako
burukominak sendatzen,
bakardadeak tamalez ditu
penak ilunkor metatzen,
plazerak aldiz zoriona du
ariman naro sustatzen.

5
Astero naute sakonki zure
burukominek hunkitzen,
nireak egin ditudalako
zurekin ditut sufritzen,
presondegitik gaitza den arren
saiatzen naiz zu aupatzen,
poza oparo izan dezazun
bihotza dizut opatzen.

6
Buruko eskuin ingurua dut
sasataka azkenaldian,
odola astun samar ei dabil
horko zainaren hodian,
xingola bat dut kopetan lotu
ganoraz lo egin nahian,
begiak batu ditut zurekin
esnatzeko goiztirian.

7
Jendartea nahi nuke hobetu
burukominak gutxitu,
egoismoa taxuz bezatu
elkartasuna bizitu,
ohitura txarrak garai berrian
auzolanean txikitu,
kapitalaren sasiak moztu
berdintasuna sustraitu.

8

Burukominen puntua zaigu
burmuinean oneratu,
esperantzari tinko genion
besarkatuta oratu,
hutsik zegoen aldean dugu
logela txukun eratu,
udaberria gaur loratu da
askatasuna garatu.

*2012ko abuztuaren 18an*

*305*

## Gure lurretan inkisidoreen menpe

Zenbat suprefet tratulari,
zenbat estatu ordezkari,
gure lurretan mehatxari,
jakobino amorratuak,
zentralista inposatuak,
inkisidore muturtuak,
euren xedea zanpaketa,
euskal senaren birrinketa,
ele txikien bazterketa,
laga gaitzatela bakean,
jardun ez dezagun txokean,
askatasunaren eskean,
maite dugu demokrazia,
gaitzesten hauen malezia,
direlako bortxen hazia,
joan daitezela hemendik at,
bizi gaitezen zazpiak bat,
euskaraz libre harat-honat.

*2013ko abuztuaren 25ean*

*306*

**Euskal Herriko eitea**

1

Sagarra bezain mamitsua
elkartasunaren zentzua,
maitasuna bezain hezea
askatasunaren haizea,
krabelina bezain gorria
klaserik gabeko herria,
ilunkera bezain morea
berdintasunaren lorea,
esperantza bezain berdea
euskal presoaren oldea.

2

Zaila den arren sinistea
zabalduko dugu atea,
garatuko da ostartea
ekiaren izpiz betea,
lortu dugulako eustea
hautsiko da gaurko katea,
euskaltzalea eta gaztea
izango du eder eitea,
hola sumatzen dut maitea
elkartuko garen urtea.

*2013ko abuztuaren 25ean*

*307*

**Bihotz-bihotzez Eibarko artistei: Mikel Arrieta, Josu Gil, Eroa Nazan, Norman, Ekinocio, Napoka Iria, Pulgi eta Beltziri**

1
CDa txukun ekoitzi dute musu-truk,
aurkezpena opari bat sanandresetan,
musikariek bikain omendu gintuzten,
bihotzak doinuekin zizkiguten puztu.
Nire hitzak entzun ditut goxo kantari,
zure pinturekin dituzte Mikel ondu,
inprimatu duten liburuxkari esker
izendatu gaituzte ohorez artistak.

2
Mundu gaizto batean bizi garen arren
zuekin lasai gaude ametsen txokoan,
elkartasunak bere xarma handitzen du
ilusioak gauean konpartituta.
Gatazka gainditzea delako onura
hasi gara kemenez askatzen barrura,
aiseki askatzeko barrutik mundura
musikari gazteek duzuen zerura.

*2013ko abuztuaren 25ean*

*308*

**1813: Gasteizek ospatu du, Donostiak pairatu**

1

Berrehun urte jadanik
gerrak erre gintuela,
Gasteiztik Donostiara
izua igaro zela,
Independentziarena
izan zen patu krudela,
militarren historiak
izaten dira horrela,
armadek ezarri zuten
oihanaren erregela,
zanpatuz herri xumea,
gurtuz botere ustela,
ekonomia ziguten
laga herrenka mengela,
euskaltasunari egin
zioten kalte itzela.

2
Donostiak zein Gasteizek
oroitza dute paratu,
arimak zituelako
gudate hark erdiratu,
egia nahi dugu jakin
gezur hutsa deitoratu,
lurperatuta zelako
gizatasuna geratu,
Wellington dukeak zuen
ohorea eskuratu,
Jose Bonapartek berriz
bere sona beheratu,
Castaños jenerala zen
han anker degeneratu,
herriak aldiz zituen
hauen hozkadak pairatu.

3

Alava jeneral gaitzak
Gasteiz omen zuen zaindu,
soldadu kriminal haien
asmoa taxuz ozpindu,
horri esker ez zituzten
hango etxeak birrindu,
emakumeak bortxatu
bihotzak zital erkindu,
hiltzaile haiek ordea
Donostia zuten mindu,
Alavaren ezaxolaz
sugarrak ero astindu,
han dena izan zen hiraz
lapurtu eta iraindu,
donostiarrei zieten
txoko maitea urrindu.

4
Arabarrak ari dira
garaipena lar goratzen,
kiskali ez zutelako
hiriburua ospatzen,
Donostiakoa baina
Gasteizek ez du aipatzen,
hola jardunda baikara
xedetik urrutiratzen,
gudetan goibel joan zaigu
aberria kateatzen,
jauntxoek tiroka dute
arrazoia deuseztatzen,
herri honetan bakea
gogoz gaude apailatzen,
Aiete lantzen badugu
hasiko gara askatzen.

*2013ko irailaren 1ean*

## **atara**miñe

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso. *2003.*

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa. *2004.*

**Kartzelako leihotik**
Joseba Arregi. *2004.*

**Seineri aurrez aurre kontaturiko ipuina**
Joxe Blanco. *2004.*

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza. *2005.*

**Azeri gosetia**
Kepa Etxebarria. *2005.*

**Ataramiñe kantuz**
CD. Hainbaten artean. *2006.*

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola). *2007.*

**Zimaren abenturak**
Belen Gonzalez / Kepa Etxebarria. *2007.*

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta. *2008.*

**Mendian gora, mendian behera, Euskal Herrian zehar**
Mahai-jokoa. Zorion Zamakola. *2008.*

**Penumbras de un ayer**
Iñaki Ojeda. *2009.*

**Preso nago**
Mikel Orbegozo. *2010.*

**Bakarmortuko kronikak**
Mikel Antza. *2011.*

**Espetxetik at**
Borxa Urberuaga. *2011.*

**Ametsen txokoan bizi baiz**
Ibon Muñoa . *2011.*

**Ametsen txokoan**
CD. Hainbaten artean. *2012.*

**Kandela bat pizteko behar dena**
Mikel Antza / Iker Moreno. *2012.*

**Fakin xokona**
Oier Goitia. *2012.*

**Sasian barna**
Xabier Makazaga. *2012.*

**Preso nago 2**
Mikel Orbegozo. *2013.*

**$Z^2$**
Mikel Antza. *2013.*

**Agurra eta ohorea**
Jokin Urain. *2013.*

Iritsi zait urrutiko
txoriaren kantu hotsa,
eta distantziak ez du
bilakatu kantu hotza.
Heldu zait malenkonia
haserrea eta poza,
bere deiadar ozena
polita bezain zorrotza.

Euskal Herriaz dihardu
ezer ez zaio arrotza,
gorputza Andaluzian
gure artean bihotza,
Kilometro asko dago,
baina oso tarte motza (ber.).

***Mikel Arrillaga***



**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**
1958.05.18
Eibar

2011-2013 tartean Puerto I espetxean idatzitako bertso eta olerkiak kronologikoki antolatuta bildu dira liburu honetan. *Ametsen txokoan bizi naiz* (Ataramiñe, 2011) liburuaren ildo eta ordenari ere jarraiki.



ataramiñe
www.literaturakoadernoak.org